

## Mikel Prieto

Mikel Prieto Gil de San Vicente (Donostia, 1959). Pedagogian doktore Euskal Herriko Unibertsitatean. Irakasle gisa Arantzazuko Ama Ikastolan 15 urtez aritu ondoren, Antigua-Luberri Institutura aldatu zen eta egun bertan dihardu. Ikerketa-lanen adibide bere tesi-doktorala: "Ikasleen interesak kurrikulumaren oinarri" (2009). Liburu honek Albizturko historiaz interesa dutenei abiapuntuko erreferentzia eskaintzen die 1552. urtean kokatuta.

*Lehen-lehenik, nire eskerrak Antxon Aguirre Sorondo zenari.*
*Berak etengabe lagundu, aholkuak eman eta idazlanaren lehen zuzenketak egin zizkidalako. Juan Bautista Mendizabal ere eskertu nahi dut, "Etxe erre Ermandadea" eskrituraren interpretazio erabakigarria egiteagatik eta ikerketan jarraitzeko animatzeagatik. Baita Albizturko herritarrak ere, laguntzeko prest izan direlako eta interes handiko datuak eskaini dizkidatelako; besteak beste Muñazpiko Pedro Arrue, Pauleneko Juan Ugartemendia, Urtukoetxeko Jose Antonio Arrue, Gomaiztegiko Jose Manuel Muñoa Echeverria eta Goikoetxeko Miguel Angel Uranga. Azkenik gure artetik joan ziren Atxistako Juan eta Joseri, eta Errementerizarreko Prontxiori eskaini nahi diet ikerketa hau, izandako adiskidetasunaren lekuko.*

**Gomendatutako katalogo fitxa / Ficha catalográfica recomendada**



PRIETO, Mikel

Albiztur 1552: baserriak eta etxeak / Mikel Prieto. – Donostia: Aranzadi Zientzia Elkartea, 2014.

173 or.: ir. kol. – (Tolosaldea historia bilduma, ISSN 1579-6299; 19)
L.G. SS 1352-2014. – ISBN 978-84-941323-8-4
73 or. gaztelaniaz (testuaren itzulpena argazkirik gabe)

1. Albiztur – Baserriak 2. Albiztur – historia

CDU 728.6(460.154 Albiztur)
946.015.4 Albiztur"1552"





**Argazkien eta dokumentuen iturriak:** I.M. (Imanol Goikoetxea); J.J.(Joseba Jauregi); M.P. (Mikel Prieto); A.E. (Alfredo Erviti); Elane; G.F. (Goikoetxea Funtsa); Arandiatarrak; M.S. (M. Sarasola); A.U. (A. Ugartemendia); A.J. (A. Jauregui)



**Tolosaldea Historia Bilduma 19**
Zuzendaria: Juantxo Agirre-Mauleon

Maketazioa: Tamtam S.L.
Inprimatzen du: Gráficas Lizarra
Saretik Hizkuntza Zerbitzuak euskaratua

ISSN 1579-6299
ISBN 978-84-941323-8-4
L.G. SS 1352-2014



**Eskerrak:** Albizturko baserritarrak
Albizturko Udala
Gipuzkoako Artxibo Orokorra
Archivo Diocesano de San Sebastián
Gipuzkoako Foru Aldundiko Kultura Saila
Gipuzkoako Foru Aldundiko Lurralde Informazioa
Imanol Goikoetxea
Fernando Fueyo



Zuzendu gutunak helbide honetara:
Diríjase toda la correspondencia a:

**ARANZADI zientzia elkartea**

Zorroagagaina 11
20014 Donostia - San Sebastián
Tel.: 943466142 Fax: 943455811
e-mail: idazkaritza@aranzadi.eus
www.aranzadi.eus



Gure herrian pentsatzen dugun bakoitzean, erreferentzia nagusia bertako etxeak, baserriak eta han bizi diren edo bizi izan diren pertsonak izaten dira. Horiek izan dira eta dira gaur egun gure nortasun-ezaugarri zalantzarik gabe.
Ikerketa-lan honen eta liburuaren bidez, azken bostehun urteotako belaunaldiak baserriko familia-ustiategiaren inguruan nola antolatu diren egiaztatu ahal izango dugu. Liburuan argitaratutako datu ugariek eta dokumentazioak bizimodu horren garrantzia ulertzen eta belaunaldiz belaunaldi nola igaro den ulertzen lagunduko digute.

Horrekin lotuta, familiak, uztak eta ganadua aurrera ateratzeko baserriaren erantzukizuna bere gain hartu zutenek garatutako lana azpimarratu nahiko nuke. Izan ere, gaur egun edonor harrituko lukeen autosubsistentzia lortu zuten. Baina, batez ere, Albizturreko ingurune fisikoan eta naturalean, eta norberak etxean eta nekazaritzako eta abeltzaintzako ustiategian zuen askatasunean errotuta dagoen jakinduriaren erakusgarria dira. Eraikinak berrituta edo zuhaitzak landatuta eta, batez ere, etorkizuneko belaunaldiak aintzat hartzen zituen ikuspegiarekin.

Familia bakoitzak, bere baserritik, gaur egun ezagutzen dugun komunitatea sortzen lagundu zuen eta haien guztiek bateratuta sortu zen Albiztur. Horri guztiari esker, auzolanaren edo herri gisa egindako proiektu kolektiboaren erakusgarri den udala edo kontzejua sortu zen. Gaur egun hemen bizi garen guztiok gure iraganetik ikasten eta, gure nortasuna galdu gabe, etorkizunera aurrera egiten jakingo dugula espero dugu.

Azkenik, eskerrak eman nahiko nizkioke Aranzadi Zientzia Elkarteari udalerriaren inguruko dokumentu-datuak biltzen egindako lana eta emandako laguntza direla eta; bestalde, Mikel Prietori eskerrak eman nahiko genizkioke ikerketa-lan nekaezina egin duelako; eta, azkenik Gipuzkoako Foru Aldundiko Kultura Departamentuari eta bertan lagundu duten herritar guztiei.

**Gregorio Iraola Tejeria**





* Izartxoa duten 28 etxeak ez dira existitzen gaur egun. Urkizuko 11 baserriak, Albizturko Etxe erre Ermandadean parte hartutakoak, ez ditugu sartu lan honetan.

# 1. Sarrera

Etxea eraikita dagoen orubearen historiari buruz gehiago jakin nahi duen Albizturko jendeari eta garai historiko horrekin interesatutako guztiei zuzenduta dago lan hau. Lan hau garatzeko, herri horretako biztanleek 1552an egindako “Etxe erre Ermandadea" eskrituran oinarritu gara. Dokumentu honetan 76 baserri eta etxeren eta haien jabeen izenak aipatzen dira[1]. Aurretik ezagutzen genituen Tolosarekin anexionatzeko gutunean (1384) aipatutako Albizturko herritarren 27 abizenak. Kontuan hartu behar da, garai hartan, oro har, etxearen izena hartu ohi zutela abizen gisa. Bi zerrenda horiek sakramentu-liburuetako datuekin (1555-1600) eta zenbait eskriturarekin alderatu ostean, 100 baserri eta etxe identifikatu ditugu eta honela sailkatu ditugu:

| | |
|---|---|
| 1. Ermandadekideak, 1552-1553 urteetan izena emandakoak.<br>*Ermandade horretan parte hartu zuten Auzotxikiko (Tolosa) hamaika baserriak ez ditugu azterketa honetan sartuko, Tolosan zeudelako (horien izenak 100 baserrien zerrendaren amaieran ikusi). | **89** |
| 2. Bi baserri (Estangabehekoa eta Irazustagoikoa) aurrekoei erantsita. | **2** |
| 3. Zapatariechea, Ganbaraechea eta Orya, 1550ean Maryna Guebarak aipatuta. | **3** |
| 5. Sakramentu-liburuetan eta beste eskritura batzuetan oinarrituta egiaztatutako sei baserri eta etxe.<br>Andreona, Balda, Bidagain, Kaminochipi, Ipintza eta Kalea. | **6** |
| **Baserriak eta etxeak, guztira, 1552an** | **100** |
| Horrez gain, beste 16 baserri eta etxe ikerketa sakonagoa egiteko zain daude, hainbat arrazoi direla eta:<br>- une horretan hutsik baina egoera onean egoteagatik<br>- ohiko erabilerarako edo aldi baterako erabilerarako (udaberria-udazkena) ganaduarentzako borda bilakatu izanagatik<br>- aldi baterako erabilerako artzaintzarako borda bilakatu izanagatik<br>- oilategi bilakatu izanagatik<br>- zati batean (adibidez: bi etxebizitzatik bat eraitsita) edo guztiz eraitsita egoteagatik<br>- eraitsita eta materialak enkantean saldu izanagatik<br>- edo aztarna galdu izanagatik, etxe-jabea aldatu delako. | **16** |

Lan honetan aipatutako eta gaur egun existitzen diren etxe guztiek bost mende inguru dituzte eta, beraz, horietako bakoitzarekin ia azterketa monografikoa egin ahal izango litzateke. Hortaz, zuhaitz genealogikoa egiteko nahiz bere etxearen historia ezagutzeko interesa duenarentzat erreferentzia baliagarriren bat eskaintzea espero dugu.

Hasteko, aurreko orrialdean aurkibidean jarri dugu 100 etxeen zerrenda[2]. Ondoren, oso antzinakoak izanik zerrendan aipatzen ez diren 16 etxeen gaia jorratuko dugu, gero “Etxe erre Ermandadea" eskriturari buruzko alderdi interesgarri batzuk landuko ditugu eta, azkenik, 100 baserri eta etxeen deskribapena egingo dugu.

### 1.1. AURKIBIDEAN AIPATZEN EZ DIREN BASERRI ETA ETXE ZAHARRAK

Albizturko irakurleren batek bere etxea zerrendan topatzen ez badu, kontuan izan behar du garai bateko orubeen zerrenda hau osatu gabe dagoela. Aipatutakoez gain, etxe gehiago ere izango zirela uste dugu. 1555etik 1600era artean etxe bati buruzko daturik ez egotea hainbat arrazoirengatik izan daiteke: 1) etxea utzi dutelako eta berriro ere norbait bizitzera etorri arte hutsik geratzea; 2) borda edo saletxe gisa erabiltzera igarotzea; 3) zati batean edo guztiz eraitsi izana; 4) garrantzi gutxiagoko eraikin bilakatzea (artzain-borda, oilategia...); 5) guztiz desagertzea, eraitsi ostean materialak saldu direlako; 6) etxea ez topatzea, jabe berriak edo zaharrak izena aldatu diolako eta ez dugulako datu frogagarririk topatu. Ikus ditzagun adibide batzuk.


**Intxurbi.** (M.P.)


**Aristizabal edo "Aazti".** (I.G.)


**Txorrosti edo "Aaztibekoa".** (I.G.)


**Santutxoko Benta edo "Santu".** (J.J.)

***600 m-ko altitudean, goi mendietako baserrien lerroan ez dira Aristizabal, Txorrostegi eta Intxurbi baserriak aipatzen.*** Antzeko kokapena izanik, nola existitzen dira Larrarte, Gorostidi, Larreta eta Artutxa etxebizitza gisa eta ez aurreko hirurak? Gure aburuz, denbora batean hutsik egon ondoren, beste pertsona batzuk bizitzen jarri arte aprobetxatzeko aldi baterako borda edo saletxe izatera igarotako etxeak izango ziren. **Etarte, Isetxe, Santutxo eta Erroma etxeak *ez dira aipatzen, nahiz eta garai bateko "Arrozpide-Atxisaeta-Arrate-Bidania" edo "Arrozpide-Atxisaeta-Etarte-Santutxo" bideetatik oso hurbil zeuden edo igarolekuak ziren (guztiak ere 400 m-ko altitudean).*** Gipuzkoako Ermandadearen bileren garaietatik zirkulazio handiko bideak izan dira bi horiek. Eraikin zaharren dokumenturik ez dugu topatu izen horiekin. Oñatiko artxiboko hipoteken kontularitzaren arabera soilik agertzen dira lehen hiru etxe horiek bereiz aipatuta eta XVI. mendearen ondoren berreraikita. Erroma, aldiz, desagertu izanaren adibide izango litzateke, hain zuzen ere, materialak beste zerbaitetarako berrerabiltzeagatik desagertutakoa izango litzateke: XX. mendearen erdialdera, etxe horren hormetako harria Santamarinarako bidea eraikitzeko berrerabili zen eta teilatua ondoren erre egin zen Azarolazpikoa[(3)] borda berreraikitzeko.

***1552an dagoeneko, Albizturko kale bakarrean etxe ugari zeuden eraikita bidearen alde bietan, eta horiek, aldi berean, erantsita edo oso hurbilean beste etxe bat izan zuten. Etxe horiek izandako izen-aldaketek asko zailtzen dute kokatu ahal izatea.*** Ugartetik plazara, 1552an eraikin gisa dokumentatutako 20 etxe hauek guztiz desagertu dira: Bidagain; Aldaya; Kamino; Ibargoen; Irigoien; Miranda; Kaminotxipi; Semerobi; Attodo; Attodotxipi; Alama; Aitzaldetxipi; Aitzalde bitartea, Aitzalde goiena; Eguzkitza; Barrenetxea; Urkasoro; Urkasorotxipi; Muruetxea eta Gurutzeaga. Uste dugu balitekeela oraingo eraikinen batek aipatutako etxe horietakoren baten orubearen zati bat partekatzea; hori da Beneziaren kasua, orube horretan baitago oraingo udaletxea. Askotan jabeen eskrituretara jo beharko genuke etxe bakoitzaren kokapena zehazteko. 1552an, esaterako, kalean, "Zubiaurretik" gertu bi "Yribarren" etxe zeuden (Yribarren Elenarena eta Yribarren Pedro Caminorena) eta 1655ean beste bat gehiago agertu zen (Luisa de Barrenaren "Yribarrenen borda"). "Yribarrenena" bezalako kasuetan ezinezkoa zaigu etxe bakoitzean nor bizi zen bereiztea, sakramentu-liburuetan izen eta abizen berak errepikatzen baitira. Gure helburua lortzeko baliabide baliagarria garaiko dokumentuetara jotzea da, hala nola ezkontza aurreko kontratuak, testamentuak edo salerosketako eskriturak eta, horrela, familia bakoitzeko kideak zein ziren osatzea (ikus 49. zk. Iribarren Elenarena).

***Elizaren inguruan bi etxeren erreferentziak topatu ditugu, baina ezin ditugu baieztatu datuak falta direlako.*** **Lezi** (XVII. mendean ageri dira, baina XVI. mendean eraikitakoak izan daitezke); eta, azkenik, **Aroztegia** (1607ko maiatzaren 19ko eskritura Juan Ochoa de Aguirreren aurrean: *"La casa de Babilonia ... y sus tierras y huerta de Aroztegui que son detrás de la casa y que lindan con tierras de la casa de Goycoechea, Uscasoro y Gomaztegui")*. Aroztegi hori al zen 1552an arotza zen Martin Muruarena? Edo Babilonia etxearekin zerikusia zuen aurrekoren bat zen? (ikus, baita ere *"Pleito sobre los bienes de las casas de Arozteguy, Babilonia y Venecia"* 1605/03/26).

***Sakramendu-liburuak (1555-1600) oso lagungarriak izan zaizkigu, datuak askotan osatu gabe dauden arren; izan ere, garai hartan hasi zen jendea erregistratzen.*** Horregatik, sakonago aztertzeko utzi ditugun 10 adibideei 1552ko eta lehenagoko datuetan aurkitu ditugun Albizturko herritarren sei abizenak, etxerik aurkitu ez diegunak, gehitu behar dizkiegu; honako hauek dira: Arandia, Basabe eta

Sagastizabal (1384ko Tolosako herritartze-eskrituran azaltzen ziren); eta Pagola, Munoa eta Hormaetxea (1552-1600eko dokumentuetan). Atal honetan azaldu dugu 16 baserri eta etxe zergatik ez ditugun aipatu zerrendan. Amaitzeko, azpimarra dezagun datu guztien arabera 1552an etxe kopurua 100etik gorakoa izango zela.

**1.2. "ETXE ERRE ERMANDADEA" ESKRITURARI BURUZ**

Idazlan honetarako Ermandadearen eskriturako lehen atala baino ez dugu erabili. Bertan jabearen izena, orubearen izena eta jabeak Ermandadean egiten zuen ekarpen ekonomikoa (edo kuota) aipatzen dira. Dokumentuaren gainerako zatiaren interpretazioa eta azterketa egiteko dago eta gure helburua "Etxe erre Ermandadea" dokumentua (suteen aurkako akordio edo aseguru gisa) osotasunean aztertzea ez bada ere, dokumentuaren berezitasuna dela eta, ohar batzuk egitea merezi du.

Edukiaren zehaztasuna da alderdi aipagarri horietako bat: 1552ko "Etxe erre Ermandadea" elkartearen eskrituran hamaika atal aurkitu ditugu. Horien artean daude hauek: Albizturko eta Auzotxikiko (Tolosa) herritarren zerrenda; Ermandadea sortzeko izan zituzten arrazoiak; ordaintzeko modua; etxea erretzen ari dela abisua eman ondoren jarraitu beharreko prozedura; bazkide partaideen arteko gatazkak konpontzeko modua eta beste zenbait baldintza. Hain dokumentu osatua ez da ezerezetik sortzen. Azaltzen diren xehetasun ugariek dokumentua prestatzen eta idazten esku hartu zutenengan pentsarazten digute eta zalantzarik gabe metatutako esperientzia handiagatik ezagutza zabala izango zuten.

Bestalde, eskritura guztian zehar nabarmena da azaltzen diren kideen arteko berdintasuna eta ekitatea lortu nahi dela eta horrek atentzioa ematen du. Esate baterako, etxe bat erretakoan, orube bakoitzak egin beharreko ekarpen ekonomikoa sei mailatako ratioan adostu zuten. Kuotarik altuena dukat bateko izango zen; horren atzetik hiru laurden dukatekoa; ondoren, dukat erdikoa; dukat laurden eta erdikoa; dukat laurdenekoa eta, azkenik, laurden erdikoa. Erretako etxearen jabearen ekarpena altuena hots, dukat batekoa, baldin bazen, kuota txikiagokoek beren kuota baino ez zuten jarriko (dukat erdia, adibidez). Aldiz, erretako etxea kuota txikiagokoa bazen (dukat erdia, esaterako), dukat bateko kuota zuenak kuota txikiago hura jartzen zuen eta ez gehiago.

Azkenik, parte-hartzaileei (honela sailkatuta: erlijiosoak, emakumezkoak eta gizonezkoak) legeetako zenbait eskubideri uko egiteko eskatzen zitzaien, hurrengo belaunaldietan Ermandadea iraunarazteko eta jarraitasuna emateko xedearekin. Hori ere berdintasuna lortzeko ahaleginaren adibide dugu. Ikus dezagun alderdi hori eskriturako bigarren atalean:

*"... muchas e diversas veces, antes de agora, se ha platicado y hablado, sobre los daños que a nos, los sobredichos, han acaecido e podrían acaeçer, redundar y subçeder adelante, con la quema de las dichas nuestras casas,y sobre ello hemos habido muchos pareçeres, queriendo cada uno favorecer más a sus deudos que a otros que no lo son, y que sería bien que para adelante, entre nos sin respeto particular, proveyendo a la utilidad común de todos, diésemos orden y manera, y otorgásemos Hermandad y compañía y conveniencia entre nos, acerca la contribución que habemos de hacer por las dichas nuestras casas, cuando quier que alguna casa se quemase a alguno de entre nos,..."*

Sar gaitezen 100 baserri eta etxeen xehetasunetan.

# 2. 1552an Albizturren zeuden baserriak eta etxeak, haien jabeak eta bestelako datuak[4]


Razon de la Poblacion de la V.ª de Albiztur con los nombres de sus casas con distincion las de la Calle y Caserios con sus respec... distancias es à saver.

Caserios 56.-

...rreta
...rrarte
...nzaval
...rostidi
...rrozpidea
...anguibuy
Aguirralde
Berrazan
Yriarri
Ygaran
Errausti
Acharacta
Alcortas
Yrarrabal
Azarolas
Toledo
Ynchurbia
Aranzabe
2 Olatcas
1 Artueka
Zalacain
Urrutirme
Pagolarena
Urrotas
Ypenza
Yrazurra
2 Aguirres
1 Pagadi
1 Gaiztarro
Urcaioro
1 Carcagas
2 Urquidis
1 Echecho
2 Murraburus
1 Garro
1 Armuño
1 Ycharo
Idoyaga
1 Etarte
Santa Marina
Larrañaga

2. Guardias
1.. Baldacho
1.. Goyenechea
1.. Simonarena
1.. Arrese
1.. Gambarracchea
2 Casa concejil y su taberna
1.. Elizalde
1.. Casa Rectoral
1.. Casa Sacristan
1.. Leri
1.. Andresnaga
1.. Balda
1.. Zamora
1.. Goycoechea
1.. Necoralde
1.. Babilonia
1.. Florentana
1.. Guebara
1.. Florencia
1.. Gorraiztegui
1.. Urruticoechea
2.. Ospitales
1.. Eguiguiza
4. Aizaldeas
2.. Atodos
1.. Semelodi
2.. Recaldes
1.. Alfaro
1.. Torrea
1.. Iriarte
1.. Echecho
1.. Beitia
1.. Iragarti
1.. Elichenea
1.. Oria
1.. Camio
1.. Arixanda
1.. Echeverria
1.. Andrenea
1.. Yrigoyen
1 Redegain
2.. Estangas
1.. Echarte
1.. Yrivarren
1.. Aiza
1.. Elenarena
1.. Florcaga
1.. Zubiaurre
1.. Ugarte
53

1 Recondo
2.. Molinos
1.. Olaza
63. en la Calle.

Resultan de la razon antecedente 119. Casas, que componen la Poblacion de la V.ª de Albiztur de las quales las 63. se hallan en la Calle, y las 56 restantes de Caserios de Labradores de los quales hay varios à distancia de la voz de la Calle, y seis de las mas distantes à tres quartos de ora de la Parroquia, y respectivamente se ban acercando las demas al Pueblo, y para que conste donde convenga, y obre los efectos que haya lugar en el Plan Beneficial de dha V.ª lo firmo como Alc.e de la expresada Villa en ella, oy dia à ocho de Nov.re de mil setecientos noventa y ocho

Juan Ant.º de Carcaga

# 1. Agerreaundi (Aguirre)

Dukat batekin hartu zuen parte Ermandadean (ekarpen hori zen ohikoa parte hartzen zuten baserrien artean; kuota txikiagoak kalean kokatutako etxeei zegozkienak ziren, Ugartetik plaza artekoenak).Martin Aguirre zen jabea, Maria Aguirre Urrutiarekin ezkondua. 1573ko urtarrilaren 15ean zendu zen. Bi alaba izan zituzten, gutxienez: Maria izenekoa bata (oinordekoa) eta Madalena izenekoa bestea, 1556ko apirilaren 12an jaioa.

1567an Martin de Aguirrek eta Joanes de Aguirrek orube horren ordezkari gisa hartu zuten parte Gracia de Goycoechearen hilobiaren gatazkan (ikus Aitzalde barrena 3. zk.). Eta 1655erako baziren bi Aguirre: Albizturko parrokia-zerrendaren arabera, “Aguirre maior" eta "Aguirre menor”.



(I.G.)

## 1. gaia: Ezkondu ondoren etxeko abizena hartzea

Maria Aguirre (aurrez aipatutako oinordekoa) 1563ko apirilaren 14an ezkondu zen Pedro Ezeizarekin eta hark etxearen izena hartu zuen lehen abizen gisa, aurreko abizena Ezeizagoiena izanik, Auzotxikikoa (Tolosa). Pedro Ezeizak egin zuen moduan etxearen abizena hartzea oso ohikoa zen orduan eta zerrenda honetakoen erdiek-edo baserriaren edo etxearen abizena zuten. Beste erdiek ez zuten etxearen izena hartu; adibidez Pedro Caminok; Yribarrengoa zen (ikus 57. zk.).

103 urte geroago, ordea, 1655ean, etxearen izena lehen abizen gisa hartzearen ohitura guztiz desagertuta zegoen. Albizturko parrokia-zerrendaren arabera, bertan jasotako 101 etxeetatik batean ere ez dute bi ezkontideek etxearen abizena eta 16 kasutan soilik darama

ezkontideetako batek etxearen abizena. Hortaz, baserrien eta etxeen % 15,8etan soilik jarraitzen zuen bizirik baserriaren izenak ezkontideetako batengan. Ikus ditzagun haien izenak: Theresa de Careaga, Martin de Pagadi, Mariana de Aguirre, Joan de Yrazusta, Barbara de Beinaran, Joan Lopez de Larrarte, Martin de Azarola, Joan de Yrarzabal, Maria de Echeverria, Joan de Artucha, Miguel de Aranzabe, Madalena de Olatea, Maria de Zalacain, Cathalina de Urrutume, Joan de Yrisarri eta Angela de Urreta.

1655eko gainerako baserri eta etxeetan, beste 87 kasuetan alegia, ez dakigu zenbat ziren 1552ko jabeen ondorengoak. Familia-harremanak aztertuko bagenitu jakingo genuke zenbat familiak utzi zuten Albiztur 1552tik 1655era. Garbi dago asko izan zirela eta horietatik dezente Tolosara joan zirela. Albizturren, berriz, herritar berri ugari errentan bizi zen. Hori horrela, aldaketa handia izan zen; izan ere, 1552an ia herritar guztiak beren baserriaren edo etxearen jabe izatetik pobrezia ekonomiko handiagoko egoerara igaro ziren.

Ignacio M. Carrión-en[5] arabera, XVI. mendeko hazkunde ekonomikoa ahuldu eta XVII. mendean eten egin zen. Krisiak eragin handia izan zuen Espainiako monarkian Felipe II.aren erreinaldiaren amaieran (1556-1598) eta herritarrek prezioen igoera nabarmena eta zergen gorakada jasan zuten. Hala eta guztiz ere, krisi-garai hura probintziako gainerako lekuetan baino gutxiago nabaritu zen Tolosan. Juan Garmendiak[6] 1626. urtea aipatzen du arma-fabrikako instalazioak eraiki ziren urte gisa. Santa Maria parrokia-elizaren ondoan eraiki zuten fabrika, Oria ibaiaren aldamenean, handik lortzen baitzuen makinak mugiarazteko energia. Armen industriari esker, Tolosa izan zen Gipuzkoako merkataritza-hiribildu guztien artean zorionekoena eta jarduera ekonomikoak, XVII. Mendean, gorantz jarraitu zuen.

**Albiztur. 1517. kontzejuko partaideen zerrenda.**

# 2. Agiralde

Martin de Gorostidik dukat erdia ordaindu zuen etxe horren truke, beste erdi bat Graicoechearen truke eta dukat bat Gorostidiren truke. Hala, hiru etxeren jabe izan zen eta hori ezohikoa da ermandadearen eskritura honetan. Joanes de Marquilosen ondasunen inbentarioan, 1594an, Joanes de Gorostidi azaltzen da Gorostidiko eta Agiraldeko (Aguillalde) jabe gisa. 1567. urtean Martin Gorostidiren jabetzako etxe gisa agertzen da Agiralde Oñatiko hipoteken kontularitzako artxiboan (ikus Luis Maria Mujika). Horrez gain, Gracia de Goicoechearen hilobiari buruzko gatazkan ez da "Aialde" abizena duen inor ageri, baina bai Ramus de Gorostidi, Martin Gorostidiren semea seguru asko (ikus 46. zk., Gorostidi).

"Aia___" abizena 1384ko Tolosarekin bat egiteko pergaminoan irakur daiteke, bigarren zatia irakurtezina bada ere: *Pedro Sanchez de Aia__*. Baliteke "Aialde" izatea, "Agiralde"ren ohiko izen arrunta. Herrian antzeko beste abizenik ez dagoelako ondorioztatu dugu hori. Elizako liburuen arabera, Domingo de Ayalde 1586an hil zen, beraz, 1552 baino lehenago jaioa izango zen seguru asko. Domingo de Ayalde hura izango zen seguru asko "Agirialde" orubearen abizena zuen familiako azken senidea eta beharbada Gorostidi etxeko hilobian lurperatua izango zen, 1567an, 1642an eta 1758an ez baita haren edo partekatutako hilobirik ageri; hainbat etxek hilobi bera partekatzeko ohitura ezinbestekoa izan zen hainbat kasutan, eliza barruan hilobietarako jarritako eremuan 84 familia baino ez baitziren sartzen (ikus 3. gaia, Hilobien gatazka).



(I.G.)

## 2. gaia: 1384ko Tolosako herritartze-gutuneko familiak

1384an Tolosara joan ziren 34 herritarren artean 27 abizen bildu ditugu eta horietatik 20 hauek orduan eta 1552an Albizturren zeuden baserri eta etxeei dagozkie: Itsaso, Yribarrena, Gaiztarro, Olatea, Urrutume, Urreta, Yrasagasti, Yrazusta, Aya(lde), Gomezteguy, Larrarte, Erausti, Zalacayn, Pagadi, Viscasoro, Lacalle, Recalde, Urquidi, Yrisarri eta Munaburu. Taldeko beste zazpi abizenak hauek dira: Yrisa, Ugalde, Erreçelaseta, Sagastizaval, Goycoa, Basave eta Arandia. Beste xehetasun batzuk etxe bakoitzean aipatuko dira.

# 3. Aitzalde (Ayçalde barrena)

Aitzalde izeneko orubean, 1552ko eskrituran bi etxe aipatzen dira eta 1553ko memorialean, beste bi ere bai. Denera, lau etxe beraz, barruti bakarrean: Ayçalde barrena, Ayçalde chipi, Ayçalde goena eta Ayçalde bitartea. Azkenik, 1655. urterako parrokia-zerrendan dagoeneko bost etxe ikusten dira Eguzquiça ageri delako.

Aitzalde barrena etxeak dukat bateko kuota ordainduta hartu zuen parte ermandadean. Aitzalde barrenako jabea Maese Joan de Aiçalde zen, 1565eko ekainaren 17an Domynga Larrarterekin ezkondua eta 1594ko urriaren 21ean hila. Maese Martin de Aiçalde izan zuen semea. Azkenik, dokumentuen bidez egiaztatu ahal izan dugu Aitzalde barrenatik oso gertu hilerri bat ere izan zela, ondoren azalduko dugun moduan.



(I.G.)

**Aitzalde barrenaren ezkerretara Aitzalde bitartea eta Aitzalde goiena omen zeuden 1655. urtean**

## 3. gaia: Albizturko hilobi-plana eta bost hilerriak

Albizturko hilerria gai interesgarri gisa hartuta, herriko adineko hainbat lagunengandik jasotako ahozko zenbait datu argitzea komeni da. Haien oroitzapenen arabera, “kanposantu zaharra” elizaren eskuinaldean zegoen eta hezurtegia edo “hezur-tokie” ezkerraldean; Aitzalden arroka inguruan ere hilerria egon zen; San Gregorion hilerria egon zen garai batean eta Simon Labayenek egungo hilerria eraikitzeko utzi zituen lurrak. Ideia horiek Donostiako Elizbarrutiko Artxiboko dokumentuekin alderatuta, denak egia zirela ondorioztatu dugu. Albizturren 1552an hilobi batzuk eliza barruan zirela pentsatu behar dugu eta hilobi gehienak kanpoko zimeterioan zeudela. Ditugun datuek kanpoan guztira bost hilerri ezberdin izan direla adierazten digute. Laburbildu ditzagun ideia nagusiak:

**1) Elizaren kanpoko hilerria 1567an (1. hilerria).** Alkateak eta kontzejuak 1567an alegatu zuten Gracia de Goycoecheak (ikus 6. gai laburra) hilerriko harria kendu eta elizara eraman zuela Maese Miguel de Larranaga senarraren hilobiaren gainean jartzeko. Gatazkan zehar egiten diren galdeketetan ere kanpoan hilobi gehienak zeudela irakur dezakegu. Hortaz, hasiera batean hilerria elizatik kanpo egongo zen eta ondoren, poliki-poliki eliza barruan hasiko ziren ehorzten (ikus 15. gaia: Kareagaundiko hilarria).

**2) 1556. urterako eliza barruko hilobi batzuen trazatua egongo zen.** 1567 baino hamar urte lehenago egindako bileran, hau da, 1556an, herritar guztiek eliza barruko hilobietan inolako aldaketarik ez egiteko konpromisoa sinatu zuten eskritura batean. Beste puntuen artean, etorki-

(M.P.)



Hezur-tokia.



(M.P.)

Kanposantu zaharreko ate-burniak paretan.



(M.P.)

Kanposantu zaharra.



(M.P.)

Hezur-tokia pareta honen barruan dago. Goitik betetzen zuten.

zunean hilobien gainean apaingarririk ez jartzea erabaki zuten. Hilarria zuen etxe bakarra Attodo zen. Gatazka-prozesu hartarako herriko kontzejuak hainbat bilera egin zituen eta guztira 65 lagunek hartu zuten parte. Haien hitz idatziengatik dakigu, erretoreak eta beste apaizak aldareko harmailetako hilobi batean lurperatzen zituztela, eta etxe batzuek bakarrik zutela beren hilobia elizaren barruan.

Eliza XVII. mendean handitu zenean 84ko hilobi kopurura iritsiko zen ("1758ko hilobi-plana" Elías Odriozola). Hilobiak jabez aldatzen joan zirela ere badakigu. 1642. urterako hainbat aldaketa eginak ziren (ikus 84. zk., Pagolaenea, hilobian agertzen diren oharren adibide gisa).

**3) Kanpoko *kanposantu zaharra*, elizaren eskuin hormaren eta errekaren artekoa (2. hilerria).** 1809ko uztailaren 8an lurperatu zuten parrokiatik kanpoko lehen gorpua, garai hartan agintzen zuen Frantziako gobernuak aginduta egin zen elizako hilerrian (kanposantu zaharrean). Horrela, Karlos III.a erregeak XVIII. mende amaieran emandako agindua betearazi zen bi eragozpenengatik: usain txarra eta higienea. Urteak behar izan ziren eliza barruan lurperatzeko ohitura apurtzeko, eta horrekin lotutako aldaketa-prozesu luzean auzi eta gatazka ugari izan ziren. 1809tik 1855era, fabrika-liburuak emandako datuek erakusten dute gaur egun Kanposantu zaharra gisa ezagutzen dena ez zela 1830 arte amaitu: Juan Francisco de Landa presbiteroak 1819an dekoratzeko eta animaliarik ez sartzeko proposatu zuen, harriz egindako pareta eta matxardez heldutako taulazko balaustrea altxatuta zirkunferentzia osoan, 125,5 metroko lauza eta harlanduzko zutabeak eutsitako atea jarrita. 1830ean dagoeneko egun duen kokapena eman zitzaion, parrokia-elizari itsatsita, teilatuzko estalkiarekin eta alboan burdina-hesiarekin. Gaur egun toki horretan ikus daitezkeen seinaleak 1830eko obrarenak direla ondoriozta dezakegu (ate-gontzen beruna eta burdin hesiaren zuloak horman eta habeetan).


Num. 09
D. Franco. Jose de Ezeiza
Nota: Errecondo: Anastasia de Urreta fue el 1r. Cuerpo que se enterro en el Campo Santo, que se hizo en el Cementerio de Albiztur, por orden del govierno Frances, que entonces nos mandaba.
En ocho de Julio de mil ochocientos y nueve murio en el Caserio de Recondo Anastasia de Urreta viuda de Pedro Ygnacio de Otegui Vez. que fueron de esta Villa haviendo Recivido los Santos Sacramentos, no testo, y el siguiente dia su Cuerpo fue Sepultado en el Cementerio de esta Villa y p.a que conste firmo =

Kanpoko kanposantu zaharrean lurperatu zuten lehen gorpua (DEAH/Libro 4º Defunciones/f.9v).

**4) 1855ean, koleraren epidemia zela-eta, Attodoren baratzean behin-behineko hilerria prestatu behar izan zuten (3. hilerria).** 1855eko irailaren 29an egin zen azken ehorzketa parrokia-elizari itsatsitako hasierako hilerrian; izan ere, irailaren 1etik 29ra lurperatutako guztiak kolerak jota hil ziren. Probintziako gobernadorearen aginduz, behin-behineko hilerria eraiki zuten Atodoren etxeko baratzean, iparraldean. Bi urte baino lehenago hilerri berria prest zegoen, baina ordurako kolera-agerraldia desagertuta zegoen. Epidemiak Albizturren 68 pertsonari eragin zien arin eta 49k eragin larriak izan zituzten; horietatik 27 hil ziren 1855eko irailetik urrira; hau da, herritarren % 3,2 hil zen, kopuru txikia Tolosako % 7,89rekin alderatuta, hau da, 378 hildako izan ziren Tolosan (J.A. Monedero, 1885). Gaur egun oraindik ere, Gomaiztegira doan errepideko bidegurutzetik ikus daiteke harri hutsezko pareta eta hilerrira sartzeko atea.

**5) 1857an San Gregorioko hilerria inauguratu zuten, eta han bai, betetzen ziren orduan eskatzen ziren osasungarritasun-baldintzak (4. hilerria).** 1857ko ekainaren 13an San Gregorio Taumaturgo baselizaren ekialdean eraikitako hilerri berria bedeinkatu zuten, abestutako mezaren ostean; herriaren kanpoaldean zegoen eta orientazio egokia zuen. Egungo hormek ezin hobeto erakusten dute garai batean izan zuen lekua.

**6) 1879. urtean gaur egun ezagutzen dugun hilerria jarri zuten abian, Simon de Labayen jaunari esker (5. eta azken hilerria).** 1879an giltzak emateko ekitaldia egin eta Egaña kondesak, Simon de Labayen jaunaren alargun Concepción Aranzabek, eraikitako hilerri berria inauguratu zuten. Haren barruan Simon Labayenen familiarentzako kapera-panteoia jarri zuten. Simon Labayen Albizturren jaio zen 1825eko apirilaren 19an, gaztea zela Habanara emigratu zuen eta 1871ko urtarrilaren 9an hil zen Sevillan.

**1855, kanposantu probisionala, Atodo atzeko aitzaren kontra (DEAH/Libro4º Defunciones/f.137r).**

**San Gregorioko kanposantuaren bedeinkapena 1857 (DEAH/Libro 4º Defunciones/f.141v,142r).**




1879ko kanposatuarekin antza handiko proiektua (Goikoetxea Funtsa).

# 4. Aitzalde bitartea

“Medio ducado por Aiçalde de medio”, horixe da Juanes Recalderen 1553ko maiatzaren 24ko memorialean irakur dezakegun bakarra. Memorial horretan daude jasota 1553an "Etxe erre Ermandadea" elkartera bildu ziren etxeak. Eskribauaren jatorrizko liburukia ez dago Tolosako Gipuzkoako Artxibo Orokorrean, galdu egin baitzen, eta erreferentzia bakarra Albizturko Udaleko artxiboko garai bateko eskrituren liburuan gelditu da gordeta. Artxibo horretan, osorik kopiatuta azaltzen dira batzuetan eta laburtuta besteetan.




Azken eskritura XVII. mendearen bukaerakoa denez, liburua XVIII.ean edo ordutik aurrera egina dago.

1655

1. EGUZKITZA
2. AITZALDE TXIPIA
3. AITZALDE GOENA
4. AITZALDE BITARTEA
5. AITZALDE BARRENA
6. ATODO
7. ATODO TXIPIA

1 2 3 4 5 6 7

DOS HOSPITALES
IRIGOIEN
Torrea
Aitzalde
ERREKALDE

(M.P.)

Zazpi etxeak gutxi-gorabehera kokatu ditugu mugak irakurri ondoren.

# 5. Aitzalde chipi (Ayçalde chipi)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat laurdenarekin, elizaren auzoko beste zortzi etxek bezala). Marina de Isasaga zen jabea, 1561eko urriaren 8an zendu zena, "alias de ayçaldechipi" heriotza-agiriaren arabera eta Maria de Guebarak bere testamentuan (1550) aipatua: *"maryna de ayçaldechipi viuda del dicho lugar compro una saya de su hermana catelyna..."*. Oraingoz, ez dugu Isasaga abizena Isitxe (Isatxe) baserriarekin lotutako toponimoa (leku-izena) dela egiaztatzeko daturik. Baserri hori Ergoien auzoan dago, Bidaniarako bidean errepide nagusitik igo eta Santutxora iritsi aurretik, errepidearen ezkerraldean (ikus, baita ere, Itsasoren orubea, 62. orubea). Gainera, 1556ko apirilaren 22an Joanes Ayçalde chipi (Andicona) Ayçaldechipi jaio zen Albizturren, Andiconaren (izenik gabe) eta Catalina Ayçaldechipiren semea.

AGG-GAOPT

**Etxe erre Ermandadea (1552).**

AGG-GAOPT

**Marina Guebararen hilburukoa (1550).**

# 6. Aitzalde goiena

Joan Garcia de Atodo jaunak dukat bat eman zion ermandadeari Aitzalde goienaren truke: “por la casa de Ayzalde goyena, que primero estaba en ochava”. Ez dakigu “Ochava” izeneko toki hori non zegoen. Elizgizona eta Atodo familiako senide zen aldetik (baita Attodo sakramentu-liburuetan eta “Atao” lagunartean ere), Ermandadearen eraketa-prozesuan parte hartu zuenetako bat izan zen, Joanes de Aburruza eskribauarekin batera. Sakramentu-liburuko ohar baten arabera, Joan Garcia de Attodo, Albizturko erretore zela, Iruñean egon zen 1599ko abuztuan, sinodo-konstituzioak eratu zirenean. Bernardo de Rojas y Sandoval zen gotzaina.

Albizturko hainbat herritarrek Tolosako idiakeztarrekin lotura estua zuen. Horien artean ziren atodotarrak, larretatarrak, lazcanotarrak, recaldetarrak, goicoecheatarrak, urreetatarrak, iriartetarrak eta jatorria Bidanian zuten aburruzatarrak. Lidergorako gaitasun handieneko Albizturko familiek, garai bateko erabilera eta ohituretan oinarrituta, “Hermandad contra el fuego” ermandadearen akordio osatu eta zehatza idaztea lortu zuten, garai hartako Gipuzkoako estamentu gorenenean kokatutako familiek eraginda, beharbada.

Ayçalderen eremuan hirugarren etxe hori izan zela badakigu, aipatutakoaz gain, Marina Garçia “Ayçaldegoyena”k 1561ean Domingo Recalde eta Garcia Atodori emandako ahalordeagatik.

Horrez gain, badugu Marina Garçia “Ayçaldegoyena”, Domingo Recalde (Albizturko apaiza), Garcia Atodo (apaiza) eta Maria Recaldek 1561ean Domingo Recalderi eta Garcia Atodori emandako ahalordearen eskriturari ere. Domingo Aburruza eskribauaren aurrean 1561eko urtarrilaren 15ean egindako eskritura da (Gipuzkoako Artxibo Orokorra; 38. protokoloa; 355r.-355v. orrialdeak). Marina Garçia Ayçaldegoyena (adinez nagusia 1561ean) Ayçaldegoyena etxean jaioko zen seguru asko edo, bestela, hara ezkonduko zen edo hara joango zen bizitzera.

Hemen azalduko dugun moduan, gatazka sortu zen Gracia de Goycoechearen hilobiari buruz eta gatazka horretan murgilduta topatu zuten bere burua etxejabe eta eliza barruan hilobia zuten herritar guztiak. Aitzalde etxeari dagokionez, Joanes de Ayçalde azaltzen da 1567an bileretan parte hartu zutenen artean, beraz, Ayçalde barrena etxearen jabea dela pentsa dezakegu. Ikerketan aurrera egiteko, heriotza-agiriak sakramentu-liburuetan bila ditzakegu. Batzuetan hildakoak testamentua egin ote zuen, data eta eskribauaren izena ageri dira. Datu horiekin testamentura jo daiteke Tolosako artxibo historiko probintzialean.

**Joanes Aburruzarenmemoriala (1553).**

## 4. gaia: Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkaren laburpena[7]

1567an, Gracia de Goycoechea, Maese Miguel de Larranagaren alargunak eta Albizturko lurretako herritar Bernaldino de Lazcanok demanda jarri zuten herriko alkatearen eta kontzejuaren aurka; izan ere, auzi-jartzaileek eliza barruan hilobia zuten eta hilarria jarri zuten, baina kontrakoek kendu egin zuten. Alkateak eta kontzejuak 10 urte lehenago, 1557an, herritar guztiek hilobietan inolako aldaketarik ez egiteko konpromisoa sinatu zutela eskritura batean alegatu zuten. Hori horrela, hilarria zuen etxe bakarra Atodorena zen.

Herritarrek, epaimahaiek, alkateak eta Albizturko parrokia-elizako kabildoak onartutako epaiak eliza barruko hilobien banaketa, neurri eta gainerako elementuei buruzko xehetasun guztiak argitu zituen eta hilobi hauen gaineko hilarriak kentzea xedatu zuen: Gracia de Goycoechea, Olatea, bi Urquiçu etxeak eta Florencia. Ramirez y Sedeño apezpikuak berretsi zuen epaia.

Guztira 65 herritarrek hartu zuten parte prozesuko uneren batean edo bestean. Ikus ditzagun haien abizenak grafia berberarekin eta parte hartutako pertsona kopuruarekin:

Açarola (1 lagun); Aguirre (2 lagun); Alcorta (2 lagun); Alquiça (1 lagun); Arançabe (1); Arbuno (1); Arrospide (1); Artucha (1); Asurtzia (1); Atodo (4); Ayçalde (1); Aychesaeta (1); Beynaran (2); Çalacayn (1); Careaga (1); Çubiaurre (2); Errondosoro (1); Gayztarro (1); Goycoechea (1); Gorostidi (1); Herausti (1); Larranaga (1); Larrarte (1); Larreta (3); Lazcano (1); Marquilos (1); Myranda (1); Munoa (1); Murua (1); Necolalde (1); Olatea (2); Oriar (1); Pagadi (1); Recalde (2); Ugarte (1); Urdapilleta (1); Urquidi (1); Urrutia (2); Urrutume (1); Uscasoro (1); Vidagayn (1); Ydoyaga (2); Yraçusta (5); Yrarçabal (1); Yriarte (2); eta Yrisarri (2). Zerrenda horretan ditugu “Errandosoro” (Hernandosoro) eta “Asurtzia”, biak Auzotxikiko (Tolosa) baserrietakoak. Errandosoro, Urquizu-arriba eta Urquizu-abajo abizenek (Auzotxikikoak denak ere) hilobia zuten Albizturren 1642. urtean.

# 7. Alama

"La casa de Alama en ochava" da Ermandadeko partaide gisa Joanes de Recalderen 1553ko memorialak utzi digun datu bakarra. Badakigu 1608ko apirilaren 2an Alamaechea etxearen jabe gisa azaldu zela Joanes de Urrutume Joan Lizardi eskribauaren aurrean. Eta 1652ko otsailaren 1ean, Mariana Aizaldek, Andres de Arsuagaren aurrean, Alamanchipi etxearen erdia jaso zuen familia-kontratuan haren amak, Catalina Urrutumek, egindako dohaintza gisa. Catalinak, era berean, Alamanchipiren erdia ere jaso zuen Maria Perez de Urrutumeren dohaintza gisa. Seguru asko, Joanes de Urrutume eta Petronila de Gorostidi emaztea izan ziren Maria Perez Urrutume haren gurasoak eta Alama etxearen jabeak (ikus Urrutume 96. zk.). Ez dakigu, ordea, 1552rako Alamanchipia eraikia ote zegoen.

"Ochava" izeneko tokia azaltzen da Joan Garcia de Attodo Ayçalde goyenaren jabe gisa aipatzean, "que primero estaba en ochava" oharrarekin. Momentuz, ez dugu kokapenaren berririk.

La Casa de Alama en Ochaua

**Joanes Aburruzaren memoriala 1553 (Albizturko Eskritura Zaharren Liburua).**

AGG-GAOPT

**Alaman txiki 1652.**

# 8. Aldai (Alday)

Ermandadean hartu zuen parte (dukat laurdenarekin 1552an, baina dukat erdia jarri zuen 1553ko memorialean). Esteban de Alday zen jabea, Cattalyna de Yriarterekin ezkondua. 1594ko azaroaren 2an zendu zen. Seme bat izan zuten gutxienez, Joan Martin Aldaya Yriarte, 1583ko uztailaren 22an jaioa. Sakramentu-liburuei begiratuta ikus daiteke harekin desagertu zela Aldaya abizena Albizturren eta, hala etxea-abizena harremana. Gaur egun orubea existitzen ez bada ere, badakigu 1655ean etxea Oria eta Elenarena artean zegoela, Ibargoyen delako beste baten aldamenean, urte hartan baieztapena jaso zuten herritarren datuen arabera. Berrogeita bi urte geroago, etxea desagertuta zegoen, Ygnacio de Ayero eskribauaren aurrean 1707ko apirilaren 8an egindako eskrituraren arabera: *"Almoneda y venta de los materiales que quedaron después que se desmoronó"*. Horregatik, elizako hilobien 1758ko planoan Aldaya Estanca de Arriba-rekin ordezkatuta agertzen da. Desagertzeari buruzko xehetasun gehiago ezagutzeko (kokapen zehatza, mugak, baratza eta ondoko lursailetako piezak edo atalak) Tolosako artxibo historikoan aurrez aipatutako eskriturara jo behar genuke (ikus Muruechea adibidea, 77. orubea).


donacion Por Don Garcia de aicalde

AGG-GAOPT

## 5. gaia: 1552tik 1798ra etxeak eraistea eta eraikitzea

Aldaia etxearen adibidearekin, zerrendan ziurtasunez aipatutako 100 etxeez gain gehiago ere izan ziren ideian gehiago sakontzeko aukera izan dugu: Ugartetik Necoalderantz eramaten zuen errege-bidean, aipatutako baserriren baten lurretan, izen propioarekin edo "Chipia", "bekoa", "azpi"... moduko ezizenekin... Adibide batzuk jartzearren: Ayalde-chipia, Aiçalde-chipia, Atodo-chipia, Urcasoro-chipia edo Kamino-chipia.

Hori horrela, 1552tik 1798ra denboraren joanean desagertutako eraikin multzoaren gaia jorratuko dugu. XVI. mendean Albiztur kale nagusia betetzear zegoen, Tolosak XIII. mendean egin zuen moduan (1252an, M.G. Tellería Tapiaren arabera). Kale nagusi bakarraren bi alboetan, nahiz sakabanatutako baserrietan, eraikin gehiago egiteko prozesua gertatu zen, batzuetan erantsita (borda-baserria, oinetxea baino txikiagoa), bestetan atxikita (borda edo etxe chipia). Zenbait kasutan eraikin horiek handitu egin ziren (Atxisaeta), beste batzuetan batu egin ziren (Aitzalde), baina erre edo eraitsi ondoren batzuetan berreraiki (Zalacain) eta beste batzuetan enkantean desagertu zirela ere ikusiko dugu (Aldaya, hain zuzen ere).

Hori dela eta, 1552az geroztiko baserri eta etxeen azterketa honetan etxearen historia irakurtzen saiatu gara, ez soilik barruko eta kanpoko arkitekturako xehetasunen bidez (ikus 20. zk. Atxisaeta), baita inguruan izan zuen eta gaur egun existitzen ez den horretan sakonduta ere.

Ideia horri jarraiki, bi alderdi historiko horiez osatutako begiradarekin (etxearen historia eta etxearen ingurukoa) oso prozesu historiko ezberdineko eraikinak topatuko ditugu zerrenda honetan. Adibide bat jartzearren: Alkorta orubea (9. zk.) etxe bakarra (baserria) zen 1552an, baina XX. mendean nolabaiteko osotasuna bilatu zuen lau eraikin sendorekin (Alkorta mayor, Alkorta menor –bakoitza bere ur-gordailuarekin edo bozaerarekin–), borda-zerratokia eta estalki-simaurtegia). Aitzalde barrena orubeak (3. zk.), aldiz, kontrako prozesua jarraitu zuen: etxe handi bakarra bilakatu da (baserria), 1655ean zazpi eraikin zeuden lekuan (Eguzkitza, 4 Aitzalde eta 2 Attodo) (ikus 1655eko Albizturko parrokia-zerrenda).

1552 eta 1798 artean desagertutako etxeekin bi talde egingo genituzke. Lehenean, 1552ko zerrendako 20 etxeak sartuko genituzke, jada ez daudenak, eta lanaren aurkezpenean aipatutakoak. Eta bigarren taldean, 1560tik 1798ra dokumentatuta azaltzen diren 12 etxeak, une batean edo bestean desagertu eta orain ez daudenak: Aroztegi, Eguzquitza, Mendoza, Erroma, Sayaz, Irisagastichipia, Borda-Yribarren, Andren-chipia, Echarte, Floreaga, Echecho eta Olaza-menor. 1798ko Albizturko Elizgizonen plangintzan 119 baserri eta etxe azaltzen dira eraikita. Horiei une hartan hutsik zeudenak edo noizean behingo erabilera zutenak gehitu beharko genizkieke.

| **1552an 100 baserri eta etxe ageri dira eta ondoren horietatik 20 desagertu dira.** | **1655eko Plan Benefizialeko Zerrendakoak.** | **Oñatiko 1768 urteko Hipoteka kontu-liburua** | **1798ko Plan Benefizialeko zerrendakoak.** | **1560tik 1798ra lehen aldiz dokumentatuak, agian lehenagokoak.** |
|---|---|---|---|---|
| 100eko zerrendatik gaur 20 falta dira: Bidagain; Aldaya; Kamino; Ibargoen; Irigoien; Miranda; Semerobi; Attodo; Alama; Attodotxipi; Aitzalde goiena; Kaminotxipi; Barrenetxea; Aitzaldetxipi; Eguzkitza; Aitzalde bitartea; Urkasoro; Urkasorotxipi; Muruetxea; Gurutzeaga. | Planean 103 baserri eta etxe ageri dira, baita nor bizi den eraikuntza bakoitzean ere; morroiak eta artzaiak barru. | 114 + 3 errota + udaletxea + erretoretxea + Santa Marinako ermitazaina, guztira 120. | Planean 119 baserri eta etxe ageri dira, baina horiez gain zenbat zeuden une hartan, bizilagunik gabe, hutsik? Eta zenbat erabiltzen ziren urtaro batez edo denboraldi jakin batez? | Aroztegui, Andrenchipia, Mendoza, Sayaz, Olaza-menor, Echarte, Erroma, Irisagastichipia, Echecho, Eguzquitza, Floreaga, Borda-Yribarren. |
| **100** | **103 + …** | **120 + …** | **119 + …** | **12 data zalantzazkoak** |

# 9. **Alkorta** (Alcorta)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin). Martin de Alcorta zen jabea, ezizenez Roldan. Beste Martin Alcorta bat, “Martin Alcorta menor en días”, aipatzen da etxearen ordezkari gisa Gracia de Goicoechearen hilobiaren gatazkan, 64 herritarren taldean. Jabea Martin zaharrena izango zela eta bestea haren anaia izango zela ondorioztatu dugu. Martinetako bat 1564ko abenduaren 16an ezkondu zen Catalinarekin eta gutxienez Gracia Alcorta izeneko alaba bat izan zuten, 1557ko otsailaren 17an. Ageri diren hiru familietako datuak zailak dira uztartzeko eta osatzeko. Sakramentu-liburuek behar adina argi ematen ez dutenean, horietakoren baten testamentua edo ezkontza-kontratua bilatzea komeni da (ikus adibide bat, 43. zk. Guebara).Martin Alcortaren heriotza ez dago jasota, baina bai handik gertuko Atxisaeta baserrira ezkondu zenarena: Martin Achesaeta Alcorta, 1586an hila (ikus 17. zk. Atxisaeta).1556ko urtarrilaren 8an Catalina Alcortaren hipoteka azaltzen da Maese Miguel Larrañagarekin hartzekodun gisa, Oñatiko artxiboko hipoteken kontularitzaren aurkibideetan.

Lehenik eta behin Alkorta mayor, eta ondoren, Alkorta menor, terrazan eraikitako bordak dira. Hau da, harri lehorrezko euste-hormaren kontra eraiki ziren eta garai hartan ohitura zen moduan, iparraldean ur-gordailua dute (bozaera), euri-ura biltzeko (ikus 20. gaia). Baserri hartan Lino Imaz Eguia (1873-1962) bizi eta hil zen, pareta lehorraren bidezko teknikarekin eraikitzen maisua zena. Altzagan jaio zen eta haurra zela Albizturra etorri zen familiaren baserria erre zelako; Jose Ignacio Imaz Iturrioz (Itsasondo) eta Maria Martina de Otegui Arrue (Alzaga) izan zituen guraso. Albizturren oraindik ere haren lan asko zutik ikusteko aukera dugu, batzuk mantendu faltan erortzen ari diren arren.



(I.G.)

# 10. Alfaro

Joanes de Recalderen memorialean honako hau irakur daiteke: "Don Domingo de Recalde, por las casas de Ychaso y Alfaro en una caveza". Alfaro etxeak, beraz, dukat erdiko ekarpena egiten zuen. Etxearen kokapena ez da aldatu. Inguru hurbila ordea bai, aldatu zaio: Alfaro eta Mitxenearen artean izan zen gutxienez beste bat, eta zati bat ikusten dela esango genuke Albizturko argazki zaharrena dela uste dugun horretan (ikus Iribarrena Elenarena, 58. zk.). Ez dakigu ziur Alfaroren eta Errekalderen arteko eraikinaren historia ere.

Esango genuke Domingo de Recalde benetako jabearen (Frai Mateo de Recalde, XVI-XVII) ahalordez jokatu zuela. Frantziskotarra zen hura eta Indietako Komisariorde Nagusia izan zen. Baliteke ahalordea Gabriel anaiak eman izana ere, aurrerago ikusiko dugun moduan.

Bildutako dokumentuetan ikusi dugu Frai Mateok Sevillatik lagundu ziela familiakoei eta gertukoei eta San Gregorio ermitarako dirua bidali ziola Joan Garcia de Attodo erretoreari (Erretoretza 1583-1608). Erretorearen 1608ko testamentuan honako hau irakur daiteke: "Y también digo y declaro que Fray Mateo Recalde, mi sobrino, de la orden del señor San Francisco, desde Sevilla me envio cierta limosna para la ermita de San Gregorio, obispo y confesor, que los vecinos de esta dicha tierra por su deboción la fundaron … y toda la dicha limosna que así el dicho Fray Mateo me envio la tengo empleada, puesta y gastada en el edificio y adorno de la dicha ermita y un censo que para la dicha ermita se compró …". Uste dugu Frai Mateok Perun Albizturko elizarentzat utzitako 500 dukatei buruz ari dela. Hala dio Domingo de Aburruçaren 1578ko abenduaren 22ko eskriturak. Aurrerago, Indietan, Gabriel de Recalde ere ikusi dugu eta handik, 1618 inguruan, ahalorde bat bidali zuen Juan de Gorostidirentzat, hura baitzuen Albizturren zituen ondasunen administratzaile eta ondasun haien tartean zen Alfaro etxea. Hori guztia kontuan hartuta esan dugu Domingo de Recalde, kasu honetan, Indietan ibilitako bi anaia fraideetakoren baten ordezkari izango zela, Mateorena edo Gabrielena. Tellechea Idígorasek "Retazos de un País" (2010) liburuan adierazitakoaren arabera, Frai Mateo Sevillan hil zen eta han dago lurperatuta, San Francisco komentuan, Albizturko ongile hura.


(G.F.)
(I.G.)

# 11. Andreona (Andreonaga*)

Ez zuen Ermandadean parte hartu, baina dagoeneko existitzen zela pentsatzen dugu, 1581ean Maria de Andreonagak, Domingo de Ormaechearen alabak, Recarteren etxea jaso baitzuen Maria Perez de Recalderen oinordeko gisa. Domingo Ormaechea Andreonaga 1576ko nahitaezko eskritura batean agertzen da Juanes de Recalderekin batera. Hortaz, Domingo Ormaechea Andreonagara ezkondu bazen eta alaba bat izan bazuen, etxea 1552rako existitzen zen.

Garai hartan elizaren inguruan biltzen zen etxe multzoak gaur egun baino bi etxe gehiago zituela topatu dugu: Muruechea (77. zk.) eta Arozteguy. Orduz geroztik beren orubeetan mantendu diren 17 eraikinetako bat Andreonaga da. Etxe multzoaren antolamenduak aldaketarik gabe jarraitzeak Andreonaga 1552an gaur egun dagoen lekuan zegoela pentsatzera eramaten du. Elizako liburuetan azaltzen diren biztanleek baieztatu egiten dute iritzi hori: Luis Ormaechea Anruonaga (1560an jaioa, Estibariz Anruonaga izan zuen ama) eta Catherina Anruonaga (1574an jaioa, Pedro Anruonaga izan zuen aita); Joan Ormaechea Urquidi de Andreonaga (1591n ezkondu zen) eta bi Domingo Andreonaga hil ziren, bata 1579an eta bestea 1580an.


(M.P.)
(I.G.)

# 12. Apaizetxea (Florencia*)

Florencia etxeak Ermandadean parte hartu zuen lehen aipatutako 1553ko memorialaren arabera eta Bernaldino de Lazcanok dukat bat jarri zuen. Marina de Guebararen 1550eko testamentuan bere lurrekin mugakide gisa ere aipatzen da, suntsitutako Guebararen etxearen eta Babiloniako lursailen ondoan. Bernaldino de Lazcanok (1565ean Marina Larreetarekin Albizturren ezkondua eta bertan hila 1574an) Florencia etxea ordezkatu zuen 1567an Gracia de Goycoechearen hilobiaren gatazkan bildu ziren beste 63 herritarrekin batera.

Etxea ordezkatu zuena Bernardino Lazcano izateak "Florencia" ez zela abadia izan pentsatzera eramaten gaitu. Gainera, Pedro de Recalde erretorea da Ermandadean "Abadia" eta "Mongia"ko jabe gisa agertzen dena (ikus 63. zk. Iturriondo).

Florencia izena deigarria da Albizturren. Gertakari esanguratsuren batekin (bidaia, egonaldia, emaitza, gerra...) lotutako urruneko tokien izenak etxe hauetan ere topatu ditugu: Babilonia, Venecia eta Zamora (Toledo etxea ere aipatuko genukeen, baina ez dugu egin 1655 arte parrokia-zerrendan agertzen ez delako).



(I.G.)

# 13. **Arantzabe** (Arançabe)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin). Joan de Arançabe zen jabea, 1558ko abenduaren 25ean hila. Ezkontza liburuan Maria Miguel Arançabe Arançabe topatu dugu Gracian Aguirrerekin ezkonduta 1570ean eta Lope de Arançabe (etxean jarraitzen duena) ere 1570ean ezkondua Heufemia Calacaynekin; azken horiek hiru seme-alaba izan zituzten: Maria, Joanes (1574) eta Joanes (etxean jarraitu zuen), 1575eko apirilaren 24an jaioa eta Maria de Urquiçurekin ezkondua 1616ko otsailaren 14an. Sei seme-alaba izan zituzten eta horien artean Miguel Arançabe Urquiçu (1620an jaioa) ezkondu zen Maria de Pagadirekin 1652an.

1655eko parrokia-zerrendan pertsona hauek ageri dira Aranzabe etxean: Maria de Urquizu (Miguel Arançaberen ama), Miguel de Aranzabe, Maria de Pagadi, Anton de Carrera eta Martin (morroi nafarra).



(I.G.)

# 14. **Armuño** (Arbuno)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin). Domingo de Arbuno zen jabea, Catalina Arbunorekin ezkondua. 1571ko otsailaren 21ean zendu zen. Bi alaba izan zituzten gutxienez, Catherina (1559) eta Gracia (1563). Bi horien aurretik jaio zen Marina Arbuno, Martin Pagolarekin ezkondua 1574ko otsailaren 6an. Ezkontzeko batez besteko adina 20-22 urtekoa baldin bazen, normala da Maria 1555ean hasi ziren sakramentu-liburuetan jasota ez egotea. 1597an, Martin de Arbuno (seguru asko aurrez aipatutako Martin Pagola, orubearen izena abizen gisa erabilita) agertzen da Irun-Uranzu frantsesengandik defendatzeko Albizturko eskuadrako arkabuzarien zerrendan.

Maria eta Martinen seme Pedro Pagola Arbunok jarraitu zuen etxean; Ana Otaeguirekin ezkondu zen 1622ko uztailaren 25ean eta seme bat behintzat izan zuten, Pedro Pagola Otaegui (1623). 1655eko parrokia-zerrendaren arabera, Arbuno etxean Ana de Otaegui, Martin de Pagola eta Maria Joaniz de Pagola bizi ziren.



(I.G.)

# 15. **Arretxea** (Arrese)

Juan de Errecalde da jabea, Pedro de Errecalde erretorearen anaia, eta dukat erdiarekin hartu zuen parte. Eleyçalde (30. orubea) eta Guebara (1550ean suntsitua, ikus 43. orubea) orubeen jabea ere bada. Maria de Eleyçalderekin ezkondu zen eta bost seme-alaba izan zituzten: Gracia, 1583an Maese Martin Eçeiçarekin ezkondua eta 1619an zendua; Maria Joaniz, Domingo Ugarterekin ezkondua; Domyngo, Albizturko elizako benefizioduna; Antonio eta Martin. Gracia eta Martinen ezkontza-kontratuaren arabera, senar-emazteak Eleyçalden bizi ziren 1583an. Ez dakigu ziurtasunez, ordea, nor bizi zen 1552an Arretxean eta nor Eleyçalden, ezta Guebara dagoeneko berreraikita ote zegoen ere.

Toponimiak ikertzen jarraitzera bultzatzen gaituen defentsazko esanahia ematen digu: Goardia, Arrechea eta Muruechea etxeek elizaren aurretiazko itxieraren ideia adierazten digute, hegoaldea defendatzeko, hain zuzen ere, bi bide sartzen baitziren hegoaldetik. Bata ezkerretik eta bestea eskuinetik, urrundutako Etarte etxetik (ate-arte: ateen arteko tartea); lehena Bidaniatik zetorrena, "Arrate" (harkaitzaren atea) eta "Partileku" (bidea banatzen den lekua) orubeetatik igarotzen dena eta, bigarrena, "Erroman galtzada" ("Santucho" zeharkatuta Albizturko hirigunera heltzen zen errege-bidea).



(I.G.)

# 16. **Arrospidezar** (Arrozpide)

Marina de Arrozpide (edo Arozpide) jabeak 1 dukatekin hartu zuen parte Ermandadean. 1567ko abuztuaren 7an hil zen eta haren senar Joan 1574ko abenduaren 27an. Haien seme Joanesek jarraitu zuen Juan Lopez de Olazabalen aurreko 1558ko azaroaren 20ko eskrituraren arabera; bertan zehaztuta daude, bai aldez aurreko familiaren akordioa, bai ondorengo Joanes de Arozpide eta Domenja Gorostidiren arteko ezkontza-kontratua. Elizako datuek beste familia-lerro bat egon zela erakusten dute, Catalina Arozpide eta Francisco Lazcanoren ezkontzarekin; horiek alaba bat behintzat izan zuten: Catalina (1571).



(I.G.)

**6. gaia: Arrozpideren hazkundearen eredua. Gertuko bi baserritatik abiatuta handiago bat eraiki zuten, hori bi etxebizitzatan banatu (ekialdea/mendebaldea) eta etxebizitza bakoitzak bere ganadu-borda zuen atari-aurrean**

Marina Arozpide 1567an hil zenerako dagoeneko bi Arrozpide etxe zeuden, bata bestearen ondoan: bata Pedro de Arrozpiderena eta bestea Joanes de Marquilox y Arrozpiderena.

1553ko otsailaren 20ko Olazabalen eskrituraren arabera, Pedro de Arrozpidek Juan de Yrisarriri Arrozpide etxea eraikitzeko baimena eskatu zion, hura lursailaren jabea zelako eta hark baimena eman zion. Pedro Arozpide 1562ko uztailaren 31n hil zen. Marina eta Pedro anai-arrebak edo senideak izango ziren ziur asko. 1594ko aipu honi esker badakigu bi etxeak batera egon zirela (Joanes de Marquilox eta Yrisarriren ondasunen inbentarioa; ikus 2. zk. Agiralde): *"la casa llamada arrozpide que asi bien es de la dicha tierra de albiztur junto a la otra casa de arrozpide que es de joanes de marquilox y arrozpide ..."*. Denboraren joanean, bi etxe horiek birmoldaketaren bat jasan zuten eta eraikin bakarra bilakatu ziren, oraingo eraikinetik gertuago. Parrokia-zerrendari jarraiki 1655ean Arrozpide izeneko etxe bakarra zegoen eta egungo Arrozpidezar izango zela ondorioztatzen dugu.

# 16. Arrospidezar (Arrozpide)

Arrozpideren orube altu horretan gaur egun etxe handi bat baino ez dago, Arrozpidezar delakoa, bi borden ondoan (bata aurrean eta bestea atzean). XIX. mendean bi familia bizi ziren, ekialdean bata eta mendebaldean bestea, gaur egun Larreta ikusten dugun moduan, berdin-berdin. Hori horrela, etxe bakoitzak ganaduarentzako borda zuen aurrean (ikus 7. gaia eta Arrozpidezar 16. zk.).

Errepidean behera 300 metrotara Arrozpideberri delako etxea dago. Luis Mari Mujikak urtebete geroago, 1656an, aipatu zuen lehenengo aldiz Arrozpideberri etxe gisa, baina ez da etxebizitza gisa ageri ez 1655eko elizako zerrendan, ez 1768ko Oñatiko hipoteken kontularitzako inbentarioan. Hasiera batean borda gisa edo aldi baterako erabiliko ote zen?

Sarreran aipatu dugun moduan, baserri bakoitzaren azterketak lan monografikoa egiteko behar adina material eskaintzen digu, "Arrozpide" honekin argi ikus dezakegun moduan. Topatu ditugun Arrozpideko obren eskriturek irakurri eta aztertzeko denbora eskaintzea eskatzen digute. Lehenik eta behin, bi eraikinetako zeini buruz ari diren argitu behar dugu. Esate baterako, 1654ko urtarrilaren 5eko datarekin obra-eskritura ageri da, Juan Mendizabal eskribauaren aurrean, Juan Arrospidek Miguel Landari enkargatutako etxea eraikitzeko. 1676ko abenduaren 15ean, berriz, Miguel de Larrañagaren aurrean Juan de Arrozpide eta Domingo de Landaren arteko eskriturak egin ziren, urtebete lehenago izandako erreketaren ondorioz "Arrozpide de abajo" berreraikitzeko obra amaitzeko.

Gorago aipatutako Juan Arrozpide, hasiera batean, Arrozpide de arriba orubeko bi etxeetako baten jabe gisa aipatutako Juanes Marquilox Arozpideren biloba zela pentsatzen dugu, Juan Ibañez de Erquiciaren aurrean bere aitak 1625eko ekainaren 23an egindako testamentuaren arabera.

Bukatzeko bi hitz bertako aska zaharrei buruz. Arrazpiberriko aska ttikia "Arrospide bekoa" etxea bezain zaharra ez dakigu, baina oso zaharra ere izan liteke (**Oilo-aska 2**). Harri librean egina (22x28 cm),12 kilo pisatzen ditu. Eluterio Pellejerok, bertako baserritarra, esaten digunez, garai batean oiloei jatena jartzeko erabiltzen zuten. Bere gainean beste oilo-aska haundixeagoa ageri da, Goikoetxekoa (**Oilo-aska 1**). Eta bere eskubian Florentzio Martinezena (**Ur-bedeinkatu-ontzia 2.**) eta ezkerrean Arandiatarrena (**Ur-bedeinkatu-ontzia 1.**). Lau hargin-lan, maila ezberdinekoak, Albizturko hargintza zaharraren seinale:


(M.P.)
**Oilo-aska 1.**


(M.P.)
**Ur-bedeinkatu ontzia 1.**


(M.P.)
**Oilo-aska 2.**


(M.P.)
**Ur-bedeinkatu-ontzia 2.**

# 17. **Artutxa** (Artucha)

Jabeak, Joan de Artuchak, 1 dukatekin hartu zuen parte Ermandadean eta 1559ko otsailaren 20an hil zen. Beste Joan de Artucha batek jarraitu zion; 1556an Maria Joaniz Munitarekin ezkondu eta gutxienez hiru seme-alaba izan zituen: Joanes (1556), Asensio (1558) eta Martin (1560?). 1567ko hilobien gatazkan, Joan de Artuchak bere etxea ordezkatu zuen beste 63 herritarrekin batera. Joanes Artucha Munita izan zen aurrekoaren ondorengoa. Maria Joaniz Argañagoena Legorreta-çarrarekin ezkondu zen 1609an eta bost seme-alaba izan zituzte: Asencio (1610), Catalina (1614), Ana (1619), Joanes (1622) eta Maria (1625). Bost seme-alaba horietatik Asenciok jarraitu zuen etxean eta Hursula Achesaetarekin ezkondu zen 1633an.

1655ko Albizturko parrokiko sendotza-zerrendaren arabera, etxean 10 lagun bizi ziren: Joan de Artucha eta Maria Joaniz Argaña senar-emazteak; Hursola Achesaeta eta Asencio de Artucha senar-emazteak; Maria Echeverria eta Martin de Artucha senar-emazteak; Maria Lopez de Artucha; Joan de Artucha; Pedro de Gastesi eta Martin de Artucha. Etxe berean familia bat baino gehiago elkarrekin bizitzeak barrutik espazioa banatuta egotea dakar; sukaldearekin banatutako bi eremu eta abar. Ondoren landuko dugu gai hori.



(I.G.)

## 7. gaia: Bigarren etxebizitza, baserriaren barruko arkitekturan kontuan hartu beharreko elementua

Etxe berean bi familia bizitzeko, hainbat aukera erabili izan dira. Aipa ditzagun horietako batzuk: baserriko frontala erditik zatitzea, ezkerra eta eskuina, bi etxebizitza sortzeko (adibidez: Pagadi); atzerantz edo aurrerantz hazi den baserria eta horma banatzailea barrutik erdian duena (adibidez: Larreta); eremuak partekatzetik sortutako aldaera (ukuilua eta ganbara erabilera komunekoak, baina sukaldea eta logela pribatuak; ikus 20. zk. Atxisaeta); etxebizitza bat bestearen gainean, bi etxebizitzetako sukaldeak eta logelak partekatuta, ekialdeko orientazio berarekin; urritasun ekonomikoagatik, solairu berean trenkada gutxi batzuen bidez banaketak eginda (zumitz edo hurritz bergamoak) eta sukaldea partekatuta bizi ziren beste batzuk.

1876ko Albizturko elizako fabrikako kontuen liburuak bi familiako 24 baserri inguru zeudela erakusten dute. Hauek ziren horietako batzuk: Arrospide-arriba, Igaran, Olatea-arriba, Zalacain, Urrutume, Ichaso, Irazusta-arriba, Aguirre-mayor, Armuño, Isagasti, Pagadi, Careaga-arriba eta Isatza. Gorostidin hiru familia daude jasota.

Etxe berean bi familia bizitzearen gaia Urquizu etxearekin ageri da Etxe erre Ermandadearen eskrituran: "Sabastian e Marina de Urquiçu, por estar so un techo las dos casas, en una cabeza por la dicha su casa de Urquiçu". Esku artean ibili ditugun beste eskritura zaharrago batzuetan ere topatu dugu baserriaren barruko zatiketa edo banaketaren fenomeno hori (Estanga, Oria); horren aztarnak batzuetan argiak dira, baina beste batzuetan, berriz, topatzen oso zailak edo ezinezkoak dira, baserriaren historia ondo ezagutzen ez bada behintzat. Yrisarri, esate baterako, banatuta deskribatzen da 1595ean, Joanes de Marquilus e Yrisarriren ondasunen inbentarioan; zati bat Tolosa alderantz eta bestea herriko elizarantz; banaketa horren arrastorik bat ere ez zen geratu (ikus 6. gaia, Arrozpidezar 16. zk.).



(M.P.)

**Markulutsen teilatu ertzean bere saletxea, Saltxo. 1777an etxebizitza bihurtu zena eta ordura arte ganadu-borda zena.**

# 18. Atodo (Atodo)

Aitzalde orubearen lurretan XIX. mendearen amaieran edo XX. mendearen hasieran desagertutako etxea. Gaur egun, adineko pertsona batzuek soilik gogoratzen dute kokapena, Aitzalderen eskuinaldean, elizako sarreratik 200 metrotara. Domeca de Atodo zen jabea, Joan de Attodorekin ezkondua. Haien seme Joan Miguel 1557ko urtarrilaren 24an jaio zen. Dukat erdiarekin hartu zuen parte Ermandadean. Abizenaren grafia Attodo da Albizturko elizako liburuetan (lagunartean Atao) eta Tolosan, aldiz, Atodo. Atodo chipi izeneko beste etxea ia aurrez aurre zegoen, bidearen bestaldean, Errekaldeko baratza ixten duen murruaren barruan, hau da, etxeak bata bestearen aurrean zeuden.

Albizturko Attodo familiak, garai hartan dagoeneko Gipuzkoako estamentu gorenarekin oso lotuta zegoenak, zabalkundea bizitu zuen XVI. mendean. Aipatutako bi etxeez gain, bazegoen Attodo bat Urretan (ikus 84. zk.); Juan Garcia Attodo elizgizona Aiçalden bizi zen eta Juan Marin de Attodo Marina de Guebarak aipatu zuen bere testamentuan Licº de Attodoren oinordeko gisa. Hori horrela, lau etxe daude gutxienez abizen horrekin. Attodotarren 1556 eta 1562 arteko ezkontzak kontuan hartzen baditugu, urte haietan izan zituzten guraso-harremanen zabaltasunaz jabetuko gara: Firmyn Catalina Attodo Asurçiarekin Tolosara ezkondu zen 1556an; Martin Maria Ydoyagarekin ezkondu zen 1557an; Sebastian Maria Veytiarekin ezkondu zen 1558an; Joan Maria Perez Urrutumerekin ezkondu zen 1562 inguruan eta Joan Atodo Maria Hernandez Muruechearekin ezkondu zen (1559 aurretik). Azkenik, Miguel de Attodo Maria Juaniz Aburruçarekin (Etxe erre Ermandadeko akordioa idatzi zuen eskribauaren senidearekin) ezkondu zen 1573an. Aburruçatarrak, jatorriz Bidaniakoak, aurretik ere ahaidetuta zeuden larretatarrekin (ikus 71. zk.).



Elane

**Erdian borobilduta Attodo Dorrea.**



(M.P.)

**Atodo zenaren sarrera Aitzalde barrenaren eskubitara.**

# 19. Atodo txipi (Atodo chipi)

Marina de Atodo zen jabea eta dukat laurdenarekin hartu zuen parte Ermandadean. 1556ko ekainaren 15ean hil zen, sakramentu-liburuen arabera. Atodoren parean zegoen etxea (ikus 18. zk.), bidearen bestaldean. Etxearen azalera Errecaldeko baratzaren murru barruan dago (ikus 32. zk.). Ageda de Iriartek Aitzaldetxiki izenarekin gogoratzen du, normala dena, Atodo eta Atodotxipi Aitzaldeko azken jabeenak izan baitziren.



(M.P.)

**Atodo Txipia. Muga gurutzetik beste muru ertzera zihoan.**



(M.P.)

**Atodo txipia kanpotik begiratuta.**

# 20. Atxisaeta (Achesaeta)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin). Pelayo de Atxesaeta zen jabea. Litekeena da Pelayo 1555 baino lehen hila izatea, hortaz, ez zen jasota geratuko sakramentu-liburuetan. Gainera, 1567an jada Miguel de Achesaetak ordezkatzen zuen familia aipatutako hilobiei buruzko gatazkan. Beste eskritura batzuen (testamentua, ezkontza-kontratua...) azterketa osagarririk gabe zaila da sakramentu-liburuetatik ateratako datu gutxi horiek interpretatzea 1552ko familia finkatu eta osatzen hasteko.Dokumentatutako datua da Maria Achesaeta (Echasaeta) existitu zela. 1569. urte inguruan ezkonduko zen ziur asko Martin Achesaetarekin eta gutxienez bi alaba izan zituzten (Catalina 1575ean eta Gracia 1577an). Maria zordun gisa azaltzen da Maryna de Yrysarriren testamentuan (1595) txerrientzako bazka erabiltzeagatik.



Atxisaetako Jose zenak egindakoak.

(M.P.)

(M.P.)

## 8. gaia: Baserriaren barruko arkitektura; hainbat handitzeren adibidea

2001. urtean hil zen Juan Zelaia Imaz lagunari esker, eraikinari buruzko datu adierazgarriak eskuratu ditugu. Atxisaeta (lagunartean Atxista) hartuko dugu adibide gisa, itxuraz ehunka urte dituen baserriaren barrualdeko ikuspegiak erraz nahas gaitzakeela ikusteko. Atxisaetaren gaira itzulita, lehenik eta behin, gure oroitzapenak, oro har, ez direla gure aitona-amonetatik haratago joaten azalduko dugu eta halabeharrez ahaztu egiten da haiek transmititzen ez digutena. Egun hauetan Atodo edo Urcasoro etxeen historiarekin gertatzen ari den bezala, hain zuzen ere, bizilagun guztiek ahazteko zorian. Hori dela eta, premiazkoa da adinekoek oraindik ere gordetzen dituzten lursailen izenen eta kokapenaren datuak biltzea.

Bigarren, Atxisaeta etxearen kanpoko bistak irudi trinkoa transmititzen digu, teilatu simetrikoa duen eraikinarena; gehigarria du atzealdean (orbeltokia); simaurtegia *(ximaurtokia)* iparraldean; baratza oilategi mugakidearekin hegoaldean eta handik gertu garaje bilakatutako estalpea eta ganaduarentzako borda Irarzabalerako bidean. Tamaina harrigarria duen etxea ikusiko dugu, astintzen duten haize zaka-

rrak jasateko egina eta, gainera, ereiteko, frutetarako eta basorako lursail asko dituena. Oinarri karratuko egungo orubea berria dela jakin ahal izan dugu. Urteagatarrek bere garaian egindako erreformaren emaitza da; Argentinara emigratu zuten XX. mende hasieran, egungo Zelaia-Imaz familiari lekua utziz. Gehitutako atzealdea edo orbeltokia eta simaurtegia XX. mendeko obrak dira. Hori horrela, Juan Zelaia Imazek kontatutakoaren arabera, XIX. mendean etxea txikiagoa zen (laukizuzena); beti izan dute Arunzkoiturria izeneko iturria etxetik gertu, Txorrostegi alderantz, eta garai batean teilatuaren atzeko isurialdearen azpian uraska luze edo harri sendozko aska zegoen euri-ura jaso eta aprobetxatzeko.

Datu horien arabera, 1552an Atxisaeta egitura laukizuzeneko (eta ez karratuko) etxebizitza izango zen, Albizturko beste etxe batzuk bezala, hasieran ganaduarentzako borda izan zena, sukalde eta logelarentzako bizileku txikiarekin eta horiek bereizten dituen paretarik gabea. Hainbat eraberritzeren ostean, baserri sendo bilakatu da. Sendotasun hori 80-90 cm-tik beherako paretekin altuera gehiago emanda eta, aldi berean, handituz lortu zen: mendian gora ganbarara sartzeko arrapala eraikita eta etxeari upategia gehituta mendian behera. Upategia egiteko lurzorua gehitzeak gainean banatutako bi eremu egiteko aukera eman zuen: bata zabala, jabeen familiarentzat eta bestea bigarren familia batentzat, sukaldea eta ondoko logelarekin bakarrik (ikus 16. zk. Arrozpidezar, 6. gaia).

Borda iparraldeko euste-hormari atxikita dagoenean eta pareta lehorraren teknikarekin egina denean, “Borda de terraza” (txapaldako borda) deitzen diogu. Borda mota hori pareta lehorrez altxatutako murruarekin egindako terraza aprobetxatuta sortzen da eta gutxienez bi solairu izaten ditu, batzuetan baita hiru ere: bizitegia eta ukuilua behe solairuan eta maila bat edo biko ganbara. Lekuak aukera emanez gero, denborarekin ur-gordailua (bozaera) eraikitzen zen lursailaren goiko zatian euri-ura biltzeko (ikus 9. zk. Alkorta). Hori horrela, zorionez, gure informatzaileari esker badakigu egungo Atxisaeta ez zela terrazako murruaren kontra eraiki, garai bateko lapiazaren edo harkaitzen berdindutako eremuan baizik. Asko dira gaur egun barruan bi maila dituzten terrazako borden adibideak: Urretaberri, Txorrostegi, Markuluts-saletxea eta Alkorta-menor, esate baterako.

Txapaldako pareta lehorra jatorrizko harritik ateratako zatiak harri-ildoz elkartuz jasotzen da. Harri-ildoen antolaera gurutzatuak, berriak azpikoekin gurutzatuta jarrita, indartu egiten du egitura, euri-urari igarotzen uzten baitio ur gehiegi pilatzean. Baina beste batzuetan, harriak berak ur-isuria horma lehorraren alboetara desbiderarazten du, beraz, hormaren gorputzaren zatiak lehor egoten dira urte osoan. Horma horiek hamarkadatan diraute zutik, mantentze-lan txiki batzuk eginda.

Atxista etxearen adibide horrek balio izan digu azaltzeko, eraikinaren historia barruan gertatutako aldaketek hobeto adierazten digutela, kanpoko itxurak baino. Atxistaren kokapena, lapiazaren harkaitzezko lurzoruan, gaur egun esplotaziorako gaiak diren lursailez inguratuta eta hurbilean iturria duela, urruneko egun batean etxebizitza iraunkor bilakatu zen. Atal honetan 1860az geroztik gaur egun arte bizilagunek egindako zenbait aldaketa jaso ditugu eta aldaketa horiek barruko arkitekturan oraindik bazeudenez, ikusi ahal izan ditugu. Behaketarekin jarraitu ahal izango genuke, oinarrizko materialetan arreta jarrita, esate baterako: egurra, harria eta metalak. Ganbaran sartzean, gure begiradak egurrezko egitura sendoa estaltzen duten lasto-izpiei erreparatzen die; haritzezko zenbait haberen datazioak XVI. mende aldera eramango gintuzke seguru asko (ikus analisi dendrokronologikoa; 100. zk., 25. gaia).

(M.P.)

**Atxisaeta XIX. mendean lauki zuzena zen. Urteagatarrek bere garaian egindako erreformaren emaitza da; Argentinara emigratu zuten XX. mende hasieran, egungo Zelaia-Imaz familiari lekua utziz.**

(M.P.)



**XIX. mendean teilatuaren azpian zegoen abere-aska. Txorrostegi alderantz, eta garai batean teilatuaren atzeko isurialdearen azpian uraska luze edo harri sendozko aska zegoen euriura jaso eta aprobetxatzeko.**

(M.P.)



**Atxisaetako ganbarako pareta zaharra.**

# 21. Azarolabekoa (Açaroladebaxo)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin) eta Martin de Açalora izan zen jabea. Maria Perezekin ezkondu zen 1564. urtean eta 1569an hil zen Maria izeneko alaba eta Miguel semea (1569) izan ondoren. 1567an Martin Açarolak etxea ordezkatu zuen hilobiei buruzko gatazkan.

1591n Miguel de Azarola erretorea zen etxearen jabea, Maria Azarola arrebak eta haren senar Miguel de Argañak hura eman ondoren. Azken horiek 1572ko urtarrilaren 22an ezkondu ziren sakramentu-liburuen arabera. Miguel de Azarolak, 1624an hil zenean, bere testamentu-berearazleei utzi zien Azarola etxea oinordean nork hartu behar zuen erabakitzeko betebeharra, Francisco Ibañez de Erquiciaren aurrean egindako 1622ko apirilaren 8ko testamentuaren bitartez.

Martin de Açarola de Yuso Veinazak eta Maria Joanizek 1591n ezkonduta osatutako bikotea ere izango dugu; "de yuso" edo "de abajo" (behekoa) terminoak orubearen jatorria adieraziko luke.

Elizako liburuetan abizena Açalora idazten da 1576 arte jaiotza-agirietan. Hortik aurrera, berriz, Açarola. Orube hori Azarolatarren leinuari buruzko liburuan aipatzen da eta izenaren berezitasunak interpretazio bat baino gehiago ekarri du. Batetik, R.M. Azkuek honela dio: *"(azarola significa) lugar de noviembre o lugar de época de sementera"* (ikus "Azarola, crónica del linaje" lana, 1929, Luis Enrique Azarola Gil). Izen mota hori ez da oso ohikoa etxe baterako, baina Juan txiki Barandiaran Dorronsororen eskutik honelako toponimoak ere topatuko ditugu "Contribución al estudio de la toponimia (Ataun)" artikuluan: "negusoroa" (neguko soroak) edo "gabesia" (gaua igarotzeko itxitura). J.M. Barandiaranek jasotako kondairetan, berriz, "azaro-noviembre" eta "voltear la tierra" bat eginda topatuko ditugu "azarolayan aritu" adierazpenean, hau da, "el voltear la tierra en noviembre con la laia"[(8)]. "Azarola" abizenaz gain, "Azarolaza" ere badugu Mutrikun (1614), Arraten (1700) eta Soraluzen (1700), izenari are izaera gehiago emanez, bukaera "-ola" izatetik "-olatza" izatera pasatuta.

Bestalde, "lugar del zorro" interpretazioa izango genuke; Igaran orubetik gertu dagoen "Azariturri" (azeriaren iturria), esaterako. Baita esanahiari buruzko eztabaida bizirik mantentzen duten beste interpretazio batzuk ere.



(I.G.)


En 17 de Novre de 1819 Cogio un Pastor de Regil sobre Etumeta
un Lobo q.e peso ochenta y siete ll. en un Cepo de Madera que
el mesmo hizo, hera mui feroz, y le mato à Palos.
El dia 28 de Diziembre de 1819 mataron à
tiro de Escopeta Otro Lobo en los altos de Hernio Miguel Ygn.
de Ezeiza su hijo menor Ygn.o de Gorostidi, Juan Baup.ta de Pagola
y otro Juan Baup.ta de Pagola hijo de Martn Inclinos de Arrozpide arriba
Peso 84 libras.
En nueve de Heneros de 1820 mataron otro lobo Cerca de la
Cruz de Hernio Juan Baup.ta y Jose Ygn.o de Albizu Inclinos de Sorostizu
y Juan Jose de Ugartemendia y Telleria del primer tiro de Bala
hera mas flaco q.e los otros y sin embargo peso 88 ll. parecia mas
viejo q.e los otros.
Estos lobos han echo mucho daño estos tres años
en las obejas y yeguas, y tambien en burros y Cabras. Hasta este tiempo
no se conocian en estos montes estos animales.
A principios del año de 1819 bajo Janguain Cogieron
tres lovitos dos machos y una Hembra

Libro 4º Bautizados/f.207v/DEAH.

## 9. gaia: Otsoen presentzia ezohikoa Albizturren

Azeria oraindik ere Albizturren oso presente dagoen animalia da, baina ezin da gauza bera esan otsoari buruz. Gure harridurarako, Albizturko sakramentu-liburuetan otsoen presentzia baieztatu zuen parrokoak 1819an eta honela adierazi zuen: *"Hasta este tiempo no se conocían en estos montes estos animales"*. Ikus dezagun testu osoa:

*"En 17 de Noviembre de 1819 cogió un pastor de Regil sobre Etumeta un lobo que peso ochenta y siete libras en un cepo de madera que el mismo hizo, hera mui feroz, y le mato a palos.*

*El dia 28 de Diciembre de 1819 mataron a tiro de escopeta otro lobo en los altos de Hernio Miguel Ignacio de Ezeiza, su hijo menor, Ignacio de Gorostidi, Juan Bautista de Pagola y otro Juan Bautista de*


Fernando Fueyo

*Pagola hijo de Martin, inquilinos de Arrozpide arriba. Peso 84 libras.*

*En nueve de Henero de 1820 mataron otro lobo cerca de la cruz de Hernio Juan Bautista y Jose Ignacio de Albizu, inquilinos de Sorostizu, y Juan Jose de Ugartemendia y Telleria del primer tiro de bala, hera mas flaco que los otros y sin embargo peso 88 libras, parecia mas viejo que los otros.*

*Estos lobos han echo mucho daño estos tres años en la obejas y yeguas, y tambien en burros y cabras. Hasta este tiempo no se conocian en estos montes estos animales.*

*A principios del año de 1819 bajo Janguain cogieron tres lobitos, dos machos y una hembra."*

# 22. Azarolagoikoa (Açaroladesuso)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin). Simon de Azarola zen jabea eta horren heriotza ez dago eliza-liburuetan jasota. Orubearekin lotura izan dezaketen senar-emazteak topatu ditugu, abizena mantentzen dutelako: Maria Lopez Açarola 1565ean Ambrosio Yrazustarekin ezkondua. Haien alaba Maria Açarola (Yraçusta) Açarola, orubearen izena aitaren abizenaren aurretik zeramanez, bertan biziko zen. Mariak (1566) beste hiru ahizpa gehiago zituen: Marina (1569), Catalina (1573) eta Madalena (1576). 1597an Ambrosio de Açarola arkabuzarien zerrendan ageri da (ikus 95. zk. Urrutikoetxea).



(M.S.)

# 23. Babilonia (Babilonia)

Maria Andres de Babilonia (Vabilonia) jabeak dukat laurdenarekin hartu zuen parte Ermandadean. Martin de Bablilloniarekin ezkondu zen 1561eko abuztuaren 28an eta 1565eko urriaren 16an hil zen. Mariaren heriotzarekin abizena desagertu egin zen. Etxeak eliza barruan zuen hilobia eta beti eduki zuen, baina ez dakigu nor izan zen jabea Maria Andres de Babilonia hil ondoren.



(I.G.)

## 10. gaia: Elizaren inguruko etxe multzoa: 1384az gerozkoa?

Elizaren inguruan aipatutako etxeen artean bat ere ez dugu topatuko 1384an laguntza bila Tolosara joandako 34 herritarren abizenen artean. Horregatik, litekeena da 1552an dokumentatutako etxe multzo hori 1384an ez esistitzea.

Babilonia 1552an eliza inguratzen zuten 16 etxeetako bat zen. 16 etxeko talde horretan ez dugu sartu egungo “Leundene”, garai batean “Simonarena” edo “Muruechea" zena (1655, parrokia-zerrenda); izan ere, jasotako datuen arabera, Simonarena Muruecheako erreketa, erauzketa eta lurzoruen salmentaren ostean eraiki zen 1622. urtean, baina ez orube beraren gainean (ikus 67. zk. Muruechea), Azarolasera doan bidearen ezkerraldean baizik.

Segurutzat jotzen dugu ordurako errege-bidea bazegoela eta gaur egun kale nagusia dena orduan Kalea izena zuen etxean hasten zela, gaur egun Ugarte taberna dena (ikus 64. zk. Kalea eta 88. zk. Ugarte). Horrez gain, ondorioztatu dugu 1384an bazela eliza, herritarren zerrendan baitago *Pedro de Errecalde* abadea eta Albizturren bazen erretoretza 1367az geroztik. Sakramentu-liburuetan, Joan Garzia de Asurziak, 1556tik 1581era erretore izandakoak, jaso zuen ezagutu den Albizturko lehen erretorea 1367an izan zela: Alonso de Yurramendi jauna. (Ikus dezagun lehen erretoren zerrenda Don Juan Garcia Assurçiaren arabera).

| Lehen hamabi erretoreak Albizturko parrokian | | |
|---|---|---|
| 1) | 1367-1397 | Don Alonso de Yurramendi |
| 2) | 1397-1447 | Don Pero Abad (de Errecalde) |
| 3) | 1447-1477 | Don Miguel de Alquiça |
| 4) | 1477-1487 | Don Joan de Alquiça |
| 5) | 1487-1501 | Don Joan Marin de Attodo |
| 6) | 1501-1527 | Don Martin Recalde |
| 7) | 1527-1541 | Don Bernardo de Attodo |
| 8) | 1541-1555 | Don Pedro de Recalde |
| 9) | 1556-1578 | Don Joan Garcia (Attodo y) Assurçia |
| 10) | 1583-1608 | Don Joan Garcia de Attodo |
| 11) | 1609-1624 | Don Miguel de Azarola |
| 12) | 1624-1663 | Don Miguel de Alcelus |

Baina elizaren presentziak ez dakar, nahitaez, inguruan halako etxe multzo trinkoa izatea. Guneko 16 etxeen izenei erreparatuta, batzuk bat datoz hiribilduak sortzean kaleko bizitzara egokitu ziren ahaide nagusiekin lotutako familia boteretsuekin: Guebara, Goicoechea, Balda, Garro, Nekolalde, Aguirre... Beste izen batzuk garrantzi historikoko gerra-ekintzak edo ekintza politikoak izan ziren tokiekin bat datoz: Benezia, Babilonia, Florencia, Zamora. Beste batzuk etorri berriak dira, eta gure kalkuluen arabera, horien artean da attodotarren kasua. Joan Marin de Attodo Albizturko erretore izan zen 1487-1501 aldian, gutxi gorabehera, eta baliteke Albizturrera Pedro Garcia de Attodorekin etorri izana eta hark bai, izan zituen ondorengoak. Beraz, 1487koa da attodotarren Albizturko lehen datua eta datu hori bat dator attodotarren familiak Albiztur-Tolosan 1552tik 1655era izan zuen hedatzearekin.

Elizaren inguruko guneko familien beste abizen batzuk, berriz, 1487 (ikus Libro de escrituras antiguas del Concejo de Albiztur), baino lehenagoko albizturdarren zerrendetan azaltzen dira; adibidez: Martin Miguel de Nekolalde (1454, Urdaztain); Joan de Goycoechea Pellijero (1454, Urdaztain); eta Perez Lopez de Helizalde eta Joan Sanchez de Elizalde (1438, Bidania).

# 24. Balda (Balda)

Magdalena de Balda zen jabea eta dukataren laurden erdiko kuotarekin hartu zuen parte Ermandadean. 1574ko urtarrilaren 28an zendu zen Magdalena. Haren aurretik beste heriotza bat gertatu zen, Joanes Baldarena (1563). Eskriturak edo eliza-liburuetako xehetasunak kontsultatu gabe ezin dezakegu jakin Joanes Magdalenaren senarra, anaia edo aita izan zen. Gainera, 1517an, Fermin Valda dugu konpromiso-gutuna sinatzen izandako herritarren zerrendan (ikus Albizturko Kontzejuaren garai bateko eskrituren liburua).

Baldatxoren inguruan, ikus "Guardizar", 47. zk.



(I.G.)

# 25. Barrenetxea (Varrenechea)

Miguel de Oriar, en Caueza entera, por la su Ca-
sa Varrenechea || - despues Leci, y el año 1825 se derribo para agregar su terreno a la huerta del Rector
Maxina de Ezeiza, en media Caueza por la
Casa de Ycasoxochipi || ----------------

Joanes Aburruzaren memoriala (Albizturko Eskritura Zaharren Liburua).

1553ko memorialaren arabera, Miguel de Oriarrek dukat bat jarri zuen Barrenetxea etxeagatik. Denboraren poderioz, Lezi izena hartu zuen. 1825ean eraitsi egin zuten haren lursaila erretorearen baratzari gehitzeko.

Miguel de Oriar Dominja Urdapilletarekin (1586ko urriaren 25ean hil zen) ezkondu zen eta bi alaba izan zituzten, gutxienez: Gracia Oria Urdapilleta (1556) eta Marya Oriar Urdapilleta (... -1587). Miguel de Oriar 1597ko uztailaren 10ean hil zen.

Miguel de Oriar *maese pincelador* izan zen (urreztatzailea eta brotxazko pintorea) eta Garesko Santiago elizan 1563. urtean egindako lanetan aipamena egiten zaio, Albizturren bizilaguna zuen Lazaro de Yriarte hargin maisuarekin batera (ikus Iriarte 47. zk.). Albizturko elizako lehen fabrika-liburuan arotz moduan ere agertzen da eta 1580. urtean elizan egindako lanengatik ordainketa jaso zuen: *"pagar a Miguel de Oriar aljezero por reparar de ladrillo delante de los altares de la iglesia y en las gradas"*. Miguel de Oriar ere azaltzen da orubearen ordezkari gisa Gracia de Goycoechearen (1567) hilobiari buruzko gatazkan eta aldi hartan beste senide bat zuen lagun: Martin de Oriar.

1552ko ermandadearen eskrituraren arabera, Miguel de Oriar zen Milia de Urdapilletaren orubearen jabea eta dukataren laurden erdia eman zuen ermandaderako. Baliteke Barrenetxea etxea *Milia de Urdapilleta* horrena izatea eta jabeak, urtebete igaro ondoren, ekarpena handitzea erabaki eta dukat erditik dukat batera igarotzea.




Barrenetxea eliz azpiko baratzaren barruan zegoen

# 26. Beitia (Veytia)

Ez zuen 1552ko ermandadearen eskrituran parte hartu, baina bai 1553koan, hurrengo urtekoan. Maria de Veytiak dukat bateko ekarpena egin zuen Veytia eta Recalde de abajo etxeengatik erdibana.

Badakigu, gainera, etxea bazela, honako datu hauek baititugu. Marina Veeytia 1560an zendu zen. Asensio Artucha Veetia (1558an jaioa) Veeytya etxeko ondorengoa zen eta gutxienez bi alaba izan zituen Magdalena Munabururekin: Gracia Recalde de Yuso y Beetia (1584) eta Maria Veeytia Munaburu (1587). Bai "Veeytia" (zatirik baxueneko lekua gisa itzuliko genukeena), bai zerrenda honetako hurrengo orubea, "Beñaran" (beheko harana), bai beste batzuk, goragoko leku batetatik jarritako izenak dirudite, Albizturko herritarrak lur altuetan (Mendukute, Zelainagusi, Zelaundi, Intxur...) bizi ziren garai zaharretakoak, goi mendietako baserrien parean edo gainetik jarritakoak (Goimendiko baserriak), Larreta edo Intxurbi kasu. XVI. mendean, Veytia familiaren historia oso lotuta dago ondoko Recalde de Yuso etxeko familiarekin, Recarte ere deitua, eta gaur egun Mitxenea izena duenarekin (ikus 32. zk. Errekalde).



(I.G.)

# 27. Benezia (Venecia)

Jabea Joan de Urdapilleta zen eta dukat bat jarri zuen Venecia etxearengatik. Joan presbiteroa izan zen, Albizturko eta Beizamako parrokia-elizetan onuraduna. 1571ko martxoaren 10ean hil zen. Babilonia eta Arozteguy etxeak Catalina Urdapilletari eman zizkion dohaintzan 1571ko martxoaren 3an Domingo de Aburruçaren aurrean egindako testamentuaren arabera.

Primeramente Dn. Joan de Urdapilleta, en ca-
ueza entera por la Casa de Venecia -- --

**Joanes Aburruzaren memoriala (Albizturko Eskritura Zaharren Liburua)**

Benezia etxea Albizturko kontzejuak erosi zuen haren orubean udaletxea eraikitzeko. Plazako etxeen artetik egokiena etxe hori zela erabaki zuen, 1642ko abuztuaren 16an Francisco Ibañez de Erquiciaren aurrean egindako erosketa-eskrituraren arabera. 1731n, Oñatiko Hipoteken Kontularitzan *La casa de la posada* dago adierazita (1731ko apirilaren 1eko 180. eskritura). Ondoren, 1768an La casa concejil (Oñatiko Hipoteken Kontularitza) izena hartu zuen eta, azkenik, 1798an, *Casa concejil y taberna* (Albizturko Elizgizonen Plangintza).



(I.G.)

# 28. Beñaran (Beynaran)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin). Joan de Beynaran (Veynaran ere) jabea 1571ko ekainaren 7an hil zen. 1567an Maria Aychesaetarekin ezkondu eta Garcia Veynaran etxean jarraitu zuen, gutxienez lau seme-alabekin. Ondoren, haren seme Martin Beynara Ydoyaga Achesaetak jarraitu zuen, 1590ean Catalina Çalacay Arbunorekin ezkonduak. Catalina hil zenean, haren izen-abizenak honela agertu ziren elizako heriotza-agirietan: Catalina Çalacayn Beynaran (lehenengoa jaiotako etxea izango dela eta bigarrena zein etxetara ezkondu zen ondorioztatzen dugu).




(A.U.)

**Beñarango bordak. Beñaran zaharra erre egin zen.**

# 29. Bidagain (Vidagayn)*

Ez zuen Ermandadean parte hartu, baina existitu zela badakigu hemen azalduko ditugun arrazoiengatik. Lázaro de Yraçuztak etxea oinordean hartu zuen Miguel de Yriarte aitaren eskutik, 1552ko otsailaren 29an, Domingo de Aburruça eskribauaren aurrean. Orain desagertuta dagoen etxeak honako hauek zituen mugakideak: *"el camino real por una parte y por otra parte la huerta de E(lena) de Yribarrena e por la otra parte el manzanal de Domingo Echeberria estimado y apreciado en sesenta ducados"*; hau da, Ugartetik Eleizalderako bidean, ezkerraldean seguru asko eta Zubiaurre eta Mitxenea arteko punturen batean.

Gainera, ez Lázaro, ez haren aita, etxean bizi ez zirenez, orubearen izena duten pertsonak agertzen dira, hura existitu zela frogatuz, han jaioak izango baitziren. 1556an Domingo Vidagayn jaio zen, Miguel eta Gracia Vidagaynen semea. Urtebete geroago, 1567an, Miguel de Vidagayn berriro azalduko da Gracia de Goicoechearen hilobiari buruzko auziaren eskrituran. Maria Bidagayn (Olatea) 1575ean hil zen.




**Aldaia Mitxeneatik Zubiaurrera goazela punturen batean zegoen.**

# 30. Elizalde (Eleyçalde)

Joan de Errecalde jabeak dukat erdiarekin hartu zuen parte Ermandadean. Aldez aurretik etxeko oinordekoarekin, Marya de Eleyçalderekin, ezkondu zen. Antonio Eleyzalde (Recalde) Eleyzalde semeak amaren etxeko abizena hartu zuen. Alabaren familia, Gracia de Errecalde eta Maese Martin Eçeiça, ere etxe horretan bizi izan ziren 1583ko ezkontza-kontratuan jasota dagoen moduan: *"Y también la casa de Eleyçalde que es la en que viven y moran con su caseria de Açarola y con las demas tierras e pertenencias e bienes ..."*. Ez dakigu bi Azaroletatik zeinen jabeak ziren edo bien jabeak ote ziren.



Elizalde plazatik atzera mugitu ondoren.

(I.G.)

(A.J.)

# 31. **Erausti** (Erausti)

Joan de Erausti zen jabea eta dukat batekin hartu zuen parte Ermandadean. Maria Miguel de Erausti Açalorarekin ezkondu zen 1564ko abenduaren 15ean eta 1584ko martxoaren 30ean hil zen. Lau seme-alaba izan zituzten gutxienez: Martin (1564), Maria Joaniz (1566), Miguel (1569) eta Martin (1576). Abizenen oinordekoa badirudi Joanes Erausti Erausti izan zela; 1606ko martxoaren 18an jaioa, Joanes Eçeyça eta Maria Joaniz Eraustiren semea.

1567ko Gracia de Goicoehearen hilobiari buruzko gatazkan Joan de Eraustik parte hartu zuen, lekuko gisa, bere orubea ordezkatuz. Azkenik, izeba edo arreba, Maryna de Herasti, aipatzen da Marina de Guebararen 1550eko testamentuan ostalari gisa eta honela dio: *"(le) dio seys reales prestados y para ellos tiene reçibyda media anega de trigo, lo demas mando cobrar de ella"*.




(I.G.)

# 32. Errekalde (recalde de suso)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin). Pedro de Recalde da jabea, aldi berean Albizturko parrokiako erretorea dena. 1384. urtean Tolosarekin bat egiteko pergaminoan irakur dezakegun abizenetako bat da Errecalde; bertan pedro derrecalde erretore gisa azaltzen da, Ermandadeko eskrituretan bezalaxe. Beste ezer baino lehen, etxearen izenari buruzko azalpena eman behar dugu; izan ere, 1552az geroztik bi etxe egon dira eta bat izen berarekin erantsita.

1552ko Ermandadearen eskrituretan Recalde etxea aipatzen da, baina artxibo probintzialeko protokoloei esker badakigu garai hartan bi Recalde etxe zeudela: "recaldegaraicoa o de suso" eta "recaldebecoa o de yuso". Pedro de Recalderena "Recalde de arriba o garaicoa" zen eta gaur egun arte gorde du izena, nahiz eta lagunartean askotan Erremeterizar deitzen zaion. "Recalde de abajo o becoa" etxea "Recarte"eta "Mitxelena" izenekin ere ezagutu da (ikus 75. zk.).



(M.P.)




Errekalde atzetik ikusita.

## 11. gaia: Errekalde etxearen historiari buruzko ohar laburra: XV-XXI mendeak

Egungo Errekalde etxea, Recalde de suso edo garaicoa, Marina de Guebara izebarengandik jaso zuen Pedro de Recaldek, 1550eko testamentuaren arabera. Recaldetarrak izan ziren etxearen jabe 1618 arte, Gracia de Recaldek 1619ko urtarrilaren 14an hil baino hilabete batzuk lehenago utzi zuen arte. Martin Urreta Iriarteren eskuetara igaro zen eta, beraz, 1384az geroztik lehenengo aldiz, jabeek ez dute etxearen izena hartuko abizen gisa. Une hartan, Recalde familiaren zati batek Albizturtik alde egin zuen eta beste batzuek, berriz, bertan jarraitu zuten eta garai batean Indietara emigratutako senideen diru-laguntza jaso zuten: frai Mateo de Recalde (Indietako kontseilariorde nagusia 1578an) eta Gabriel Recalde (Potosiko zilar-meategietan lan egin zuen eta Ameriketan hil zen 1615ean).

Errekaldeko azken bizilaguna, Florentzio Martinez Jauregui (1917-2010), errentan bizitu zen bere gurasoak bezala. Lanbide ugariko gizona zen (arotza, igeltseroa, pintorea, bizargina...), Albizturren eta inguruko herrietako baserrietan lanean eman zuen bizitza. Florentzioren laguntzari eta ezagutzei esker, sakramentu-liburuetan ageri den lehen bizilaguna, Pedro Recalde (...-1555), egungo familia-



Hizketalekua harraska bihurturik.



Hizketalekua kanpotik.

rekin lotu ahal izan dugu bost mendeetan zehar. Ildo horretatik, badakigu garai batean Errekaldek errota izan zuela, Gracia Recalde Eleyçalde eta Maese Martin Eçeiçaren arteko 1583ko ezkontza-kontratuan aipatzen delako: *"primeramente la cassa derrecalde quees dela dicha tierra de Alviztur con su molino e con su tierra e huerta y bergel..."*[9]. 1655eko Albizturko parrokia-zerrendan bi etxe eta bi familia azaltzen dira Errekalden: Munita-Olascoaga familia etxe nagusian biziko zen eta, beste familia, Domingo de Yberroa zapataria aipatzen da, eskuinaldeko gehigarrian biziko zen.

Eraikinaren egoera txarraren ondorioz, 1700. urtean saneamendu handia egin behar izan zitzaion eta honela esan zuen garai hartako jabeak: *"quedo como nueva"*[10]. Gure datuen interpretazioaren arabera, 1768an eta 1798an bi etxeak bere horretan existitzen ziren, baina 1844an Miguel José Larrea Aramburu errementariak erosi egin zituen eta bata etxe-errementaldegi eta bestea sutegi (Olatxoa) bilakatu zituen. Jabe berriak errementari gisa egin zuen lan bertan Francisco semearekin. Geroago, Maria Josefa biloba Jose Ignacio Zubillaga (1868-1948) errementari eta erlojugile ospetsuarekin ezkondu zen eta hark errementaldegiarekin jarraitu zuen 1905 arte. Handik aurrera, Zubillagak Errekalde utzi zuen eta handik hurbil zegoen Mitxenea etxera aldatu zen, eta azkenerako, handik urte batzuetara, Tolosan finkatu zen. Hori dela eta, Albizturren askotan Errekalderi "Errementerizar" (errementaldegi zaharra) eta Mitxeneari "Herreroenekoa" (errementariaren etxea) deitu izan zaie.

Larreatarrak ziren Errekalderen jabeak eta Jose Igacio Zubillaga erloju-konpontzailea eta Josefa Ezeiza emaztea Tolosara joan zirenean, 1905ean, etxea errentan eman zioten Miguel Martinez Oderiz arotz eta ebanistaren familiari. Martinez Jauregui familia Errekalden bizi izan zen ia gaur egunera arte; izan ere, Florencio Martinez, azken ondorengoa, 2010eko otsailaren 16an hil zen. Hala, etxea berriro ere larreatarren oraingo ondorengoengana igaro da, Erviti Ruiz familiarengana, hain zuzen, Francisco Erviti Larrea eta Asunción Ruiz Lopetedi senar-emazteengana. Amaren aldeko aitona-amonak Felix Erviti eta Maria Josefa Larrea Sorarrain izan ziren, azken hori Errekaldeko oinordekoa.



(M.P.)

**Erdiraino lurperatua dagoen ate arkuduna.**

Errecalde etxearen kanpoko fatxadari begiratuta, handik gertu dagoen Mitxenea etxearen antza duela baino ezin dezakegu esan. Bien abiapuntua oso desberdina izango zela jabetzen gara ordea; izan ere, egungo Mitxenea eraikinak 1707. urtea du ateburuan eraikuntza-urte gisa jarrita. Kanpoaldeko begirada horrekin, ordea, ezin dugu beste ondoriorik atera, ez baititugu Mitxenearen historia, barruko arkitektura eta materialak ezagutzen. Errekalde, aldiz, badakigu 1700. urtean barrutik saneatu zela, fatxada eta jatorrizko paretak errespetatuta; hasierako azalera karratu perfektua zen; beheko solairuan harlanduzko elementu zaharrak zituen eta bigarren solairuko eta ganbarako paretak karbonatozko toba arin transpiragarrizkoak edo tokiko errekarrizkoak ziren. Etxean aztarna utzi zuten maisu harginen artean Maese Joanes de Recalde (...-1605) eta Maese Martin Eçeiça (...-1595) topatu ditugu, 1555etik 1613 bitartean Errekaldeko jabeak izan zirenak.

Azkenik, Errecaldeko baratza izkinan Florencio Martinezekin (azken bizilagunarekin) izandako elkarrizketa gogoratuko dugu. Hormaren harri batetik bestera zihoan diagonala seinalatu zigun: "*Esas dos piedras de sillería marcan claramente el espacio perteneciente a la casa de Aitzalde. Yo siempre lo he conocido así*". Ondoren, idazlan hau egitean jakin genuen XVI. mendean “Atodo Chipia” etxea (19. orubea) egon zela seinalatutako lekuan, bidearen bestaldean, elizatik 200 metrora kokatutako "Attodo" etxe nagusiari begira (ikus 18. zk.).



(M.P.)

**Errekaldeko zepa.**

# 33. Errekarte

Catalina de Urquidi zen jabea eta dukat laurden bat eman zion ermandadeari 1553ko memorialean. Agiri gehiago behar ditugu Errekarte etxe honen eta Mitxenea eta Recalde de abajo etxeen artean zer harreman zegoen jakiteko (ikus Mitxenea 75. zk.).

Cathalina de Urquidi, en un quarto por la
Casa de Errecarte – o Michelena

Joanes Aburruzaren memoriala 1553.

Urkiditarrak 1384ko eskritura zaharrean ere agertzen zaizkigu: Martin de Urquidi dugu Tolosara joan ziren 34 herritarretako bat. Tolosako herritartze-gutuna (1384, pergaminoa). Tolosako Udal Artxiboa.



Pergaminoaren kanpoko azaleko oharra. Tolosako Udal Artxiboa.

# 34. Eskolak (Goyenechea)

Maria Recalde orubearen jabeak dukat laurdena eman zuen Ermandaderako. Askotan, oraingo honetan bezala, jabe eta senideen sakramentu-agirietako datuak ematen ditugu ezkontza-kontratuetako eskriturekin edo azken nahien testamentuarekin alderatu gabe. Datuak alderatu ostean soilik argituko ahal izango ditugu 1555etik 1600 arteko sakramentu-liburuetan dauden hutsuneengatik sortutako zalantzak. Maria Recalderi buruzko datu gutxi topatu ditugu: bere izen bereko alaba azaltzen da (Maria Recalde, 1563ko urtarrilaren 31n jaioa) eta Sebastián delakoa izango zuen aita. Maria Recalde bat Lizartzan hil zen 1578ko irailaren 9an eta beste Maria Goyenechea bat Tolosan, 1570ean. Argi dago beste dokumentu batzuk bilatu behar genituzkeela Goyenechea orubeko familiaren lehen data horiek finkatu ahal izateko.

Esan dezakegu Maria de Recalde Maryna Guebararen (ikus 43. zk.) lau oinordeetako bat izan zela 1550ean, orduan Albizturko erretorea zen Pedro de Errecalde, Juanes de Errecalde eta Catalinacho de Errecalderekin batera.



(I.G.)

# 35. Estanga garaikoa

Beste kasu askotan bezala, etxea bitan banatu zuten erdiko lerrotik. Elizaren aldeko zatia Garaikoa (goikoa edo eliza alderakoa) eta bestea behekoa (behekoa edo Ugarte aldekoa). Uste dugu hori gertatu zela Estangarekin. Elane eta Yrigoyen artean zegoen, elizara joateko errege-bidearen eskuin aldean. 1553ko memorialaren arabera, Joanes de Yrazuztak dukat erdia eman zion ermandadeari.



Elane

**Elane eta Zubiaurre artean Estanga ikus dezakegu zuhaitz batez estalirik.**



(M.P.)

**Estanga zenaren harri labratuak.**

# 36. Estanga behekoa

Gure interpretazioaren arabera bazen ordurako, itsatsita zuen *Estanga garaycoa* etxea jasota baitago. Baina ez dakigu ermandadean parte hartu zuen edo ez. *Estangas* etxeak 1655ko parrokia-zerrendan ere aipatzen dira. Gure ustez, *Estanga* etxeak Dorronsoro familiak emandako argazkian ikusten den orubean zeuden. Elane jatetxean ikus daiteke argazki hori. 1933 baino lehenagoko argazkia, etxearen hondakinak ikus daitezke.

**Estangaren atzea Aitzetik ikusita.**



(M.P.)

**Estanga eroria atzean Iruain edo Irigoien duela.**

Elane

# 37. Etxeberria (Echeberria)

Domingo de Ormaechea zen jabea eta dukat erdia eman zuen Ermandaderako. Estibariz Urquidi de Andreonagarekin ezkondu zen eta seme bat izan zuten gutxienez, Joanes Horma Echea, 1557ko martxoaren 23an jaioa. Joan Ormaechea Urquidi de Andreonaga Maria Hernandosoro Artucharekin ezkondu zen 1591ko urtarrilaren 13an. Hortik aurrera, sakramentu-liburuak ez dira oso lagungarriak izan familia horrekin lotutako pertsonen taldea osatzeko.

Bestalde, Echeberria abizena badago Albizturren, Munoarekin lotuta, baina ez dakiguna da etxe horrekin lotuta dagoen, Echeberria de Urquizurekin lotuta dagoen edo kanpotik etorri ote ziren: Domingo Echeberria eta Francisca Muñoak Domingo Muñoa (Echeverria) Muñoa semea izan zuten 1576ko irailaren 21ean. Maestre Domingo Munoa delakoak Gracia de Goycoechearen hilobiaren gatazkan parte hartu zuen eta baliteke hori Domingo Echeverria (Muñoa) izatea. Haren emazteak Domingo de Ayçalde eta Maria Yrazuztari utzi zien Echeverria etxea oinordetzan, Yrigoyen etxean Domingo de Aburruçaren aurrean 1572ko uztailaren 6an egindako eskritura bidez ezkontzeko baldintzarekin.

1655eko Albizturko parrokia-zerrendaren arabera, Echeverria etxean Joanes Echeverria Yrazuzta-y-Estanga eta Maria Lopez Urreta senar-emazteak eta haien seme-alabak bizi ziren. Joanes de Echeverria aurrez aipatutako Domingo Ayçalde de Echeverria eta Maria Yrazuzta Estangaren (1572ko uztailaren 6an ezkonduak) semea zen. Domingo Ayçalde de Echeverria hori, aldi berean, Domingo de Hormaechea 1552ko etxejabearekin zuzenean ahaidetuta egon zitekeen.



Elane

**Etxeberria Andrenea baino beheraxeago.**

# 38. Florentina edo Florencia

1553ko memorialaren arabera, Bernaldino de Lazcanoren Florencia (12. zk.) etxeaz gain, bada Florentina izeneko beste etxe bat ere. Dukat laurdena jarri zuen haren jabeak ermandaderako. Memorialean ez da jabea nor zen azaltzen.

Florentina etxea Babiloniaren ondoko eraikin gisa azaltzen da Juan Ochoa de Aguirreren aurrean 1607an egindako eskrituran. 1655eko parrokia-zerrendan ere toki horretan azaltzen da eta Anton de Mendiola eta Lucia del Alcelus dira bertan bizi zirenak.



ACG-GAOPT



(M.P.)

**Florentina gaur hutsik dagoen tartean omen zegoen, Balda eta Adreonaga atzean.**

# 39. Gaiztarro (Gayztarro)

Juan de Gayztarro Ermandadeko kidea zen eta dukat batekin hartu zuen parte. 1558ko apirilaren 14an hil zen. Bederatzi urte geroago, 1576an, Gracia de Goycoechearen gatazkara Martin Gayztarro delakoa azaldu zen eta sakramentu-liburuen arabera, Martin Eznaola Gayztarro izan daiteke, ordurako Marina Gayztarro etxeko ondorengoarekin ezkonduta zegoena. Seme bat behintzat izan zuten 1569an eta Martin Gayztarro (Eznaola) Gayztarro izena jarri zioten.

1552ko zerrenda horretako biztanleen joera nagusia argi dago: % 59k etxearen izena hartu zuen lehen abizen gisa. Jabearen izenak etxearen izenarekin bat egiten ez duen kasu gehienetan etxea kalean dago, hirigunean. Oria (ikus 82. zk.) eta Gayztarro etxeak horren adibide dira.

Gracia de Goycoechearen hilobiaren gatazkan Martin de Gayztarro azaltzen da etxearen izenean, beraz, okasio horretan Martinek etxearen izena lehen abizen gisa erabiliko zuela pentsatzen dugu. Ondoren, bere abizenari modu konposatuan eutsi ziola ikusiko dugu, hala jasota baitago 1591ko heriotza-aktan: Martin Eznaola Gayztarro. Martinen atzetik Domenja Eznaola Gayztarro (1594) eta Joanes Eznaola Gayztarro (1597) hil ziren. Hori horrela, Catalina Gayztarro Ascarate 1594an hil zenean, Gayztarro lehen abizen gisa desagertu egin zen Albizturren.

Historikoki, 1384. urtean dagoeneko Martin Perez de Gayztarro agertzen da Ahaide Nagusien erasoen aurrean Tolosara babes bila joandako 34 herritarren artean. Ezin dezakegu aipatu gabe utzi Iturrioz ermitan 1544an Igokunde egunean gertatutako liskar larria; Juan de Gayztarrori eskuineko erpurua moztu zioten eta Joan de Attodo hil zuten. Juan de Gayztarro hori aurrez aipatutako Gayztarro etxearen jabea izan liteke.

Albizturko parrokia-zerrendaren arabera eta Oñatiko hipoteken kontularitzako aurkibidearen arabera, XIV. eta XIX. mendeen artean Gayztarro etxearen jabe izandako familien abizenak hauek dira: "Gayztarro"; "Eznaola-Gaiztarro" (batzuetan "Esnaola"); "Ugartemendia" eta "Ezeiza". 1655. urtean, esate baterako, hauek ziren maizterrak: Ygnacio de Ugartemendia, Maria de Loinaz (emaztea), Joan de Loinaz, Lucas de Ugartemendia eta Cathalina (neskamea).


(M.P.)

Gaiztarroko habe tolarearen arrastoak.


(I.G.)

# 40. Ganbaraetxe (Ganbaraechea*)

Marina de Gambara Marina de Gebararen (43. zk.) testamentuan aipatzen delako dakigu 1550ean Ganabaraetxe existitzen zela: "*Y también mando cobrar de Maryna de Ganbara dos reales prestados*". Sakramentu-liburuetan ez dago abizenaren arrastorik. Baliteke azkena izatea abizen horrekin edo heriotza-aktan beste izen bat izatea. Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko 1567ko gatazkan inork ez du Gambarechea ordezkatzen, baina hasierako hilobi-planean bazuen bere lekua. Horrenbestez, jabea bazuela esan nahi du horrek, baina beste abizen batekin. Ez dakigu nor zen Gambarechea etxeko jabea 1552an eta 1576ko Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan.

1655eko parrokia-zerrendaren arabera, garai hartako maizterrak hauek ziren: Francisco de Aizalde, Maria de Marquilus Yrisarri Yrigoyen (1648ko abenduaren 14an ezkondu ziren eta lau seme-alaba izan zituzten: Madalena 1657, Pedro 1659, Joan 1662 eta Maria 1665), Marina de Albisu eta Isabel de Esnaola.



(I.G.)

# 41. Garaikoetxea

Martin de Gorostidi zen jabea eta dukat erdi bat jarri zuen ermandaderako (ikus Gorostidi 46. zk. eta Aguiralde 2. zk.). Ez dakigu non zegoen edo ezagutzen ditugun etxeetakoren baten beste izen bat izan zen.



Gorostidi oso leku egokian zegoen herri-sailak erabili ahal izateko. 1353ko eskritura hau, Albizturko lehen eskritura dakigunez,hainbat lur-sail elkarrekin erabiltzeko konpromisoa hartu zuten Albiztur, Beizama, Errexil, Goiatz eta Bidaniko herriek. Donostiako Elizbarrutiko Artxibo Historikoa (DEAH/P004-01).

Martin de Gorostidi, en Caueza entera por
la casa de Gorostidi, porque nose hallo enla
ra
es. aunque suele contribuir desde elprincipio//
It, el d[ic]ho M[art]in de Gorostidi, porlas casas de
Aguiralde, y Garaycoechea en una Cabeza
y media//

Joanes Aburruzaren memoriala 1553.

# 42. Garro (Garro)

Martin de Garrok dukat bat eman zion Ermandadeari orubearen jabe zen aldetik. Tolosako sakramentu-liburuen arabera 1565eko otsailaren 16an hil zen eta haren alaba Marina de Garro izan zen ondorengoa, Joan Marin Mirandarekin ezkondua. Bi seme-alaba behintzat izan zituzten: Gracian (1558) eta Marina (1563). 1592. urtean Marina hil zenean, Garro abizena desagertu egin zen Albizturtik.

Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko 1567ko gatazkan ez da inor ageri Garro abizenarekin, baina hasierako hilobi-planean, aldiz, etxea agertzen da. Izan liteke 1567an dagoeneko etxearen jabeak ez izatea?

1655ean, Albizturko parrokia-zerrendaren arabera, Angela de Arrese eta Pedro Yriarte Beloqui (1652ko martxoaren 31n ezkonduak) bizi ziren Garron. Angela Arrese Joanes Arrese eta Maria Recalderen (1615ean ezkonduak) alaba zen eta amaren aldetik Sebastian Attodo Veeytia eta Maria Veeytiaren (1558an ezkonduak) biloba.

Juan Carlos Guerrak garrotarrak 1377az geroztik Legazpi jatorrikoak direla esaten du “Ensayo de un padrón histórico de Guipúzcoa” lanean.



Garro goiko errepidetik.

(I.G.)

(M.P.)

# 43. **Gebara** (Guevara)

Joan de Errecalde Maryna de Guebara izebaren oinordeko jabea da (Ermandadeari dukat laurdena emanda). Guebararen etxea suntsituta zegoen eta Marynak Joan de Errecalde ilobari berreraikitzeko agindu zion 1550eko testamentuan. Testamentuan Albizturko 33 herritar aipatzen ditu guztira; horietatik 14 ahaideak izan litezke eta gainerakoak bere ondasunen hartzekodunak edo zordunak eta lekukoak. Eta aipatutako Albizturko 24 etxeei esker egiaztatu ahal izan ditugu Etxe erre Ermandadeko hainbat kide: (Zapatarietchea testamentu honetan bakarrik azaltzen da). Maryna Guebara hil zenean, abizen hori betiko desagertu zen Albizturtik. 1517an Joan Lopez de Ydoyagaren aurrean eginiko konpromiso-gutunean (Albizturko Kontzejuko garai bateko eskrituren liburua), albizturtarren artean azaltzen da Martin de Guebara, Marinaren senar zendua izan zitekeena. Aipatu dugun testamentuan azaltzen da Iriarte familiakoa zela, baina uste dugu Yriarte abizenaren ordez emaztearen etxearen izena hartuko zuela abizentzat. Azkenik, Marina Guebararen oinordekoa, Joan de Errecalde, Eleyçaldera ezkondu zen (ikus 30. orubea).




(I.G.)

## 12. gaia: 1552ko biztanle kopuruaren kalkulua

Modu horretako testamentua oso baliagarria da dokumentu gisa errealitate demografikoa deskribatzeko, “Guebara-Errecalde” familiaren eta Yriarte, Atodo eta Eleyçalde familiekin zuen ahaide-harremanari buruzko ikuspegi zabala ematen duelako. Horrelako eta antzeko dokumentuekin egiaztatu ditugu ideia hauek:

- etxe batetik bestera familiako senideen kopurua asko aldatzen da, faktore askoren arabera: senar-emazteen adina, senideak eta beste pertsona batzuk (morroia, artzaina...);
- etxe berean familia bat baino gehiago bizi zitekeen, Sebastián eta María de Urquizurekin gertatzen den moduan bi etxebizitzako Urquizu etxean (ikus eskrituraren transkripzioa 3. kapituluan);
- inon jasota ez dauden etxeak hirugarrenei errentan emanak egon zitezkeen: adibidez, “Zapatarietchea” eta sarreran aipatutako beste 16ak;
- badira jabea ezagutzen dugun arren, garai hartan inoren bizitoki ez ziren etxeak: eraitsitako “Guebara”; “Zamora” eraiki berria;...

Horren ondorioz, zail samarra da gure ustez Albizturko 1552ko biztanle kopurua kalkulatzea. Hain zuzen ere, 1655eko parrokia-zerrendako 103 etxeetako biztanleak batzen baditugu, 12 urtetik beherakoak kenduta, 449 pertsona ditugu guztira, hau da, 4,3 biztanle etxe bakoitzeko. Kopuru horri seme-alaba bat edo bi gehituz gero, etxe bakoitzean, batez beste, 5 edo 6 lagun izango genituzke, etxe askotan 2 lagun eta beste batzuetan 10 egongo baziren ere. **Hemen jaso ditugun 1552ko 100 etxeei etxe bakoitzeko 5-6 pertsonako batez besteko hori aplikatuz gero, 550 biztanle inguru izango genituzke Albizturren garai hartan** (batez besteko kopurua 500 eta 600 artean, eta behetik jota, sarreran aipatu dugun moduan, hipotesi gisa jasotzen dugulako egiatan 100 etxebizitza baino gehiago egongo zirela 1552an).


(M.P.)

**Pagolaren atetik Erausti ikusten da.**

# 44. Goikoetxea (Goycoechea)

Maese Miguel de Larrañaga zen jabea eta dukat bat eman zuen ermandaderako. Maese Miguel hil zenean, haren emazte Gracia de Goycoecheak aldaketak egin zituen hilobian; horren ondorioz, gatazka sortu zen herritarren artean eta 1567an prozesu judizial bilakatu zen Iruñako apezpikutzan (ikus 3. zk. Aitzalde barrena, 3. gaia). Gogora dezagun Gracia de Goycoecheak erromesen babeserako ospitalea sortu zuela, 1587ko urtarrilaren 22an emandako testamentuan. 1591. urtean sortu zen eta Joan Garcia Atodo eta Martin Ruiz Careagaren kargu egon zen. Testamentu-albazeak hauek izan ziren: Michaela de Urreta (ahizpa), Miguel de Beguiristain (Dulantziko biztanlea) eta Martin de Gorostidi (Albizturko biztanlea). Esteban de Urreta, ahizpa Michaelaren semea, izendatu zuen oinordeko eta haren faltan beste semea, Sebastian de Urreta.

Gotzon Uriak, Teodora Lasquibar Baztarricaren seme eta oinetxeko egungo ondorengoetako batek, bildutako datuei esker, ordea, Goikoetxea etxearen oinordekoa Maria de Urreta izan zela baiezta dezakegu. Maria de Urreta Pedro de Alcelusekin (Errezilgoa) ezkondu zen 1597an. Etxearen genealogiari buruz ekarritako informazio xehatua XVI. mendean hasi eta gaur egun arte iristen da. Horrela, hamalau belaunaldi kontatzera helduko gara. Familiaren azterketa horrek, beste datu askoren artean, Lasquibar familia Goikoetxeara noiz etorri zen argituko digu; 1710ean Jose de Lasquibar eta M. Ygnacia de Yrarzabal (Goikoetxeko oinordekoa) ezkondu zirenean etorri ziren (ikus 50. zk. Irarzabal).

Azkenik, esan beharra dago Gracia de Goycoechearen amak Dominga zuela izena (ikus Miguel de Larrañagaren testamentua) eta aitak Domingo Goycoechea (ikus 1517ko ekainaren 11ko Joan Lopez de Ydoyagaren aurreko eskriturako herritarren zerrenda).

Goikoetxea orubearen historiarekin lotuta, aurrez aipatutako azterketa garrantzitsuaz gain, beste bi informazio-iturri baliotsu ditugu: 1) Gracia de Goycoechea andreak sortutako Albizturko ospitaleko kontuen liburuak eta 2) Graciaren senar Maese Miguel de Larrañagak sortutako Albizturko neskame txiroentzako fundazioa.



(G.F.)

(I.G.)

# 45. **Gomaiztegi** (Gomezteguy)

Maria de Gomezteguy jabeak 1 dukatekin hartu zuen parte Ermandadean. Ez dugu ez bera, ez Gomeztegy abizeneko besterik topatu sakramentu-liburuetan. Hortaz, ez dugu etxejabeari buruzko inolako erreferentziarik. Joan Gomezteguyk, aldiz, elizako diruzaina zen aldetik, ordainketa-gutuna entregatu zion Domingo de Ormaeseari 1552ko urtarrilaren 10ean, Juan Aburruza eskribauaren aurrean. Hortik aurrera ez dugu abizenaren arrastorik topatu, ez Albizturren, ez probintziako beste herrietan.

Eliza barruko hasierako 84 hilobiko planean bazegoen Gomezteguy etxeari zegokion nitxoa, baina 1567an inor ez zen gerturatu abizen horrekin Gracia de Goycoechearen hilobiaren gatazkari buruzko bileretara. Hortaz, ez orduko jabeak, ez etxea ordezkatzen zuenak, ez zuten etxearen izena abizen gisa.

1655. urteko parrokia-zerrendaren arabera, bost pertsona hauek bizi ziren Gomezteguyren etxean: 1628an ezkondutako Pedro de Olaçaga eta Mari Esteban de Urreta senar-emazteak, Maria Olaçaga, Maria de Yrazuzta eta Martin de Ybarra.



**Gomaiztegiko lehengo ataria.**



**Gomaiztegiko gambara irekia.**



**Gomaiztegiko aska.**



**Gomaiztegiko Kable zaharra.**

(M.P.) (laurak)

# 46. Gorostidi

Martin Gorostidik dukat bat eman zuen Etxe erre Ermandaderako Gorostidi etxearengatik eta beste dukat bat erdi bana Aguiralde eta Garaycoechea etxeengatik. Maryna de Yrisarriren testamentuan (1594) gorostiditarrak aipatzen dira haien larretako baten erabiltzaile gisa (transkripzioa): *"Y Joanes de Gorostidi y Maria de Gorostidi, su madre, por los pastos de los puercos que el año pasado de mil quinientos noventa y tres repastaron en nuestros montes (a cobrar) de más de setenta y seis reales"*.

Sakramentu-liburuetan Gorostidi etxearekin lotura duten bi senar-emazte azaltzen dira gutxienez: Martin de Gorostidi Magdalena de Arrozpiderekin ezkondu zen eta seme bat izan zuten, Martin de Gorostidi Arrozpide, Gorostidi eta Aguiralde etxeen jabea 1594an[11]. Beste senar-emazteak Martin de Gorostidi eta Maria de Garro izan ziren eta alaba bat izan zuten gutxienez, Catalina Gorostidi Garro, 1558ko urriaren 16an jaioa.

Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan Ramus de Gorosti agertu zen etxearen izenean. Ramus 1592ko martxoaren 5ean hil zen eta aurretik Martin 1589ko abuztuaren 11n eta Maria 1565eko abuztuaren 25ean.

Amaitzeko, Martin Gorostidirekin lotura duten beste bi dokumentu aipatuko ditugu: 1) Domingo Anzietaren aurreko 1575eko abenduaren 5eko nahitaezko gutuna; bertan Martin Recalde apaizak eta Domingo Ugartek Martin Gorostidiri zaldi baten truke 16 dukat ordaintzeko konpromisoa hartu zuten eta 2) Martin Gorostidiren eta Joanes Urrutumeren arteko hitzarmena, elkarren arteko auzia amaitzeko, Juan Lopez de Olazabalen aurrean 1579ko otsailaren 2an.


**Gorostidi, erre zen txorizo-fabrika, Atxisaetatik ikusita.**

(M.P.) (biak)

# 47. Guardizar (Guardia)

1552ko apirilaren 9an Joan de Arteaga eskribauaren aurrean ermandadeko eskritura sinatzearekin batera, Maria de Guardiak etxea ermandadean erregistratu zuen. Dukat bat jarri zuela ondorioztatzen dugu, gainerako etxeek hala egin zutelako. Maria Goardia 1558ko abenduaren 21ean hil zen. Bernat Goardia eta Maria Mendizorroz senar-emazteen seme-alaben jaiotzak ere baditugu: Pedro Goardia 1573ko apirilaren 25ean eta Maria Goardia Mendizorroz 1573ko martxoaren 25ean. Hortik aurrera abizena desagertu egin zen.

Elizako lehen hilobi-planean hilobia zegoen "Guardias" idazkunaren azpian, baina Guardiako jabeak ez zuen etxearen izena abizen hartuta jokatu Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko 1567ko gatazkan. Zalantzarik gabe, etxejabeak beste abizen bat zeraman.

Guardia eta Baldatxo familien arteko harremanak dokumentazio gehiago eskatzen du. Dauzkagun datuen arabera, bi etxe izan zirela esan dezakegu, eta Baldatxo 1552 ondoren eta 1594 aurretik eraiki zela. Marina de Yrisarrik honela dio testamentuan: "Y también una caja que tengo en la casa de Valdaechea que en ella me dejó el dicho mi marido,…" (ikus 60. zk. Irisarri). "Valdacho" Valdaechearen laburdura izan daiteke eta "Salcho", berriz, Salechearena. Horregatik, Marina Yrisarrik Baldatxo esan nahi duela pentsatzen dugu. Bestalde, azterketa honetan orain arte ez dugu Balda “Baldaetxea” izenarekin ikusi. “Baldacho” etxearen hilobia 1758ko hilobi-planean ageri da, “Estanga-abajo”ri zegokion hilobian, *“Estanga abajo en 1642”* oharrarekin.

1655. urtean, Albizturko elizako parrokia-zerrendaren arabera, bi etxetan bizi zen jendea. Alde batetik, “Baldacho” etxean Maria de Azarola eta Maria Joaniz de Urrutume bizi ziren. Bestetik, “Goardia” etxean Martin de Yrazuzta, Marina de Yrazuzta, Angela de Yrazuzta eta Maria Joaniz de Careaga bizi ziren. “Guardia” eta “Baldacho” etxeen historian sakontzeko 1768ko Oñatiko hipoteken konturalitzako liburua daukagu. Bertan "Baldacho”, “Goardia-arriba” eta “Goardia-abajo” epigrafeekin eskrituratutako dokumentuen erreferentziak azaltzen dira.



(A.E.)

Guardizar Baldatxo baino goraxeago.

(I.G.)

# 48. Gurutzeaga (Guruçeaga)

Gurutzeagako jabeak, Maria de Guruçeagak, gutxieneko kuota jarri zuen Ermandadean, dukataren laurden erdikoa, alegia; Atodo chipia, Balda eta Urdapilleta etxeetakoek egin zuten bezala. Maria 1567ko urtarrilaren 3an hil zen Albizturren, baina aurretik Joanes de Guruçeaga hil zen 1563an. Ez dakigu zer guraso-harreman zuten. Tolosan Leonora Guruçeagaren heriotza jasota dago 1560an, baina ez dakigu Albizturko edo Urquizuko (Tolosa) Guruçeagari zegokion. Abizenak ez zuen jarraipenik izan Albizturren.

Gaur egun Gurutzeagari buruz galdetuz gero, herritar guztiek Urquizurantz seinalatzen dute. Denbora batean nahastuta ibili ginen Guruçeaga Urquizu auzoko etxeen artean kokatu genuelako, Ermandadean parte hartu zuten eta gaur egun Tolosan dauden beste bederatzi etxeekin batera. Falta ziren datuak auzo bakoitzeko pertsona zaharrenekin alderatzean, ordea, erre eta desagertu egin zen etxea zela jakin genuen: *"Guruçeaga (casería quemada)"* irakurtzen da Albizturri dagokion indizearen tituluan Oñatiko hipoteken kontularitzan. Erreketaren urtea ez dago zehaztuta, baina 1798. urtean dagoeneko ez da etxebizitza gisa agertzen Albizturko Elizgizonen Plangintzan.

Guruçeagaren kokapenak goiko Careagarekin muga egingo zuela ondorioztatu dugu, 1655eko parrokia-zerrendaren arabera, Careagako bi etxeen artean aipatzen delako. 1567 eta 1855 arteko hipoteken eskrituren arabera, lau familia izan ziren bi Careaga etxeen jabeak: Altolaguirre-Careaga; Artucha-Achisaeta; Aranzave-Careaga eta Aranburu. Dokumentu horietan bi Careaga etxeen eta Gurutzeagaren arteko lotura argia ere ikus dezakegu, urte askoan jabe berarenak izan zirelako (aldi batean goiko eta beheko Careaga etxeen baserri gisa ere aipatzen da Guruçeaga). Ez genuen Guruçeagaren kokapenaren inolako ziurtasunik, ordea.

Leku horretatik igarotzean "Gallinero de Careaga de arriba" (*"Kareagaundiko oilotegia"*) deitzen duten eraikinarekin egin genuen topo. Erretako Gurutzeaga etxearekin lotura izan dezake, harlanduzko ertzetako harriak eta lau paretetako baten lodiera direla eta. Goiko Careaga etxearen ateburuan ahokatutako hilarria ere ikusi genuen (ikus 67. zk.; 15. gaia). Aguirre Sorondok[11] hilarriei buruzko liburuan kontatzen duen moduan, disko-formako hilarriak baserriko ateen goiko zatian jarri ziren, apaintzeko edo babesteko. Hipotesi baten arabera, gurutzearen ikurra duen hilarri hori Arguruzeaga lurrekin eta Guruçeaga etxearekin lotuta egongo litzateke. Aipatutako etxea desagertu zenean garrantzia galduko zuen eta, orduan, Kareagaundiko ateburuan jarriko zuten.



(M.P.)

# 49. Ibargoen (Ybargoen)

Maria Perez de Erausti zen jabea eta dukat laurdena eman zuen ermandaderako. Maria Ybargoyen delakoa 1566ko abenduaren 15ean hil zen eta pertsona bera izan liteke. Ybargoen familia 1552a baino lehen Albizturren zegoela ziurtatzen duten dokumentuak falta ditugu.

Ybargoyen abizeneko inork ez zuen parte hartu Garcia de Goycoechearen hilobiari buruzko 1576ko gatazkan eta eliza barruan ez dute inoiz hilobirik izan. Etxea beste abizen bat zuen norbaitena zela pentsatzen dugu, jatorrizko familia desagertuta edo hilda zegoelako eta, beraz, Maria de Eraustik, jabeak, berarentzat erabiliko zuen Erausti etxearen hilobia elizan.

Ibargoen etxea errege-bidean zegoen eta izen bereko beste etxe bat izan zuen parean, Aitzarantz begira. 1655ean, Albizturko parrokia-zerrendaren arabera, etxe batean Catalina de Careaga eta Ana de Echeverria eta bestean Gracia de Yrarzabal eta Marina de Pagola bizi ziren.




Defunción Maria Ybarcoyen. DEAH (M005-04).

(M.P.)

**Ibargoen errepide ondoan Estanka eta Oria artean egon zen, Artadiren etxetik gertu.**

# 50. Ibartzabal (Yrarçabal)

Martin de Yrarçabal jabeak 1 dukatekin hartu zuen parte ermandadean. Marinarekin ezkondu zen eta 1585eko otsailaren 21ean hil zen. Martin elizako erreten-garbitzaile gisa azaltzen da 1576an Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan. Sakramentu-liburuen arabera, Miguel Marquilox Yrarçabal izan zuen ondorengo. Miguel Catalina Açarolarekin ezkondu zen. Ondoren, haren seme Joanes Marquilox Yrarçabal etorri zen eta 1618an Maria Joaniz Urretarekin ezkondu ostean, ondorengo ugari izan zituen. Francisco Ibañez Erquiciaren aurrean 1618ko urtarrilaren 5ean egindako ezkontza-kontratuaren arabera, Marta de Mendiola eta Juanes de Urreta, hildakoa, izan ziren Maria Juaniz Urretaren gurasoak. 1655eko Albizturko parrokia-zerrendan baieztatutako bost kide hauekin deskribatzen da familia hori: Joan de Yrarzabal, Joan de Yrarzabal txikia, Mari Sancturu de Munita, Joan de Yrazuzta eta Maria Joanez de Yrarzabal.

Oñatiko hipoteken konturalitzako indizeak erakusten duenez, etxeko jabeek “Yrarzabal” mantendu zuten lehen abizen gisa XIX. mende amaiera arte gutxienez.



(M.P.)

Ibartzabalgo ate arkuduna, Alkorta aldera ematen duena.



(I.G.)

Ibartzabal zaharberritu aurretik.




(M.P.)

Ibartzabalgo harraska borobil zaharra.

# 51. Idoiagabekoa (Ydoyaga)

Joan Martinez de Ydoyaga zen jabea eta dukat batekin hartu zuen parte Ermandadean. "Idoiagabekoaz" ari zirela pentsatzen dugu, artikulu honetan jasotako datetan (1552-1798) "Idoiagagoikoa" ("Pittin") ez baita etxebizitza gisa ageri. Idoiaga toponimoak *"ur-putzuaren"* (idoia) "tokia" (aga) esan nahi du euskara zaharrean eta handik gertu zegoen Iturribeltza iturriarekin zerikusia izan zezakeen; hiru albotatik itxia zen, arku-formako ganga zuen eta barruan *putzua* zuen.

Sakramentu-liburuen arabera eta bestelako dokumenturik ezean, Joan Martinez de Ydoyaga 1577ko martxoaren 18an Albizturren hildako Joanes Ydoiaga dela pentsatu behar dugu. Horrez gain, Joan Ydoyaga bat María Perez Oriarekin ezkondu zen eta gutxienez hiru seme-alaba izan zituzten: Martin (1558an jaioa), Domingo (1566an jaioa) eta Catalina (1593an hila). Beste Ydoyaga familia batzuk ere agertzen dira, beren ondorengoekin (Ydoyaga-Ybarganda familia eta Ydoyaga-Urquidi familia), beraz, Albizturko beste etxe batzuetan biziko zirela pentsa dezakegu, baina ez dugu horren daturik.

"Ydoyaga" eta "Oria" familien arteko harremana lanekoa ere izan zen. Hortaz, Joanes de Ydoiaga delakoak Garesko Santiago elizako obran egin zuen lan arotz gisa 1563an Miguel de Oriar (ikus Barrenetxea, 25 zk.) pintorearekin eta Lazaro de Yriarte (ikus 56. zk. Iriarte) harginarekin batera, denak ere Albizturko biztanleak.




**Idoiaga goikoa edo Pittin.** (I.M.)

(I.G.)

# 52. Igaran (Ygueraran)

Martin de Yeraranek dukat batekin hartu zuen parte Ermandadean. Pedro de Arrozpidek Martin eta Juan de Yrisarriri 1553an egindako eskaera-eskrituraren lekuko izan zen (ikus 60. zk. Irisarri). Abizena desagertu egin zen. 1567. urtean jada ez zuten parte hartu Gracia da Goicoechearen hilobiaren gatazkan eta hilobirik ere ez dago izen horrekin.

1587an, Yerarango errota hiru etxeren artean ustiatzen zuten: Goycoechea, Marquilux eta Çubiaurre. Tratuaren arabera, jabe bakoitzari hiru astetik bat zegokion errota (Gracia de Goycoechearen testamentua; ikus 44. zk. Goikoetxea).

1590. urterako, Yeraran etxea eta errotaren hiru laurdenak Joan de Marquilox Yrisarrirenak ziren eta etxea sei urterako Maria eta Marina Yrisarri ahizpei alokatuta zegoen. Albizturko errotak XVI. eta XVII. mendeetan jabetza pribatukoak ziren eta pixkanaka udalaren eskuetara igaro ziren. Errotartea[9] delako errota horren adibide da, jabetza pribatukoa izan baitzen 1613an udalak erosi zuen arte.

Aguirre Sorondok "Tratado de Molinología" laneko 101. orrialdean honela dioen Manuel de Lecuonaren aipua azaltzen digu: "...Ya sabéis que el nombre vasco indígena del molino, es eyera o ignara, de donde se derivan los nombres del barrio donostiarra de *Igara* y del Tolosano de *Igarondo*, ..." Yera euskaraz errota esateko adiera zaharra izanik, erreferentzia toponimiko garrantzitsu bilakatuko da, Yeraran (errotaren harana) leku esanguratsua izan baitzen XVI. mendean. Kontsultatu ditugun dokumentuen arabera, “Yeraran” “el río que baja de Larrarte” (Larrartetik jaisten den erreka) zen (Yeran erreka); bertako errotari “molino de Yeran" deitzen zitzaion eta etxeari, berriz, “la casa de Yeran”.

XVI. mendean Albizturren abizena eta izen bereko errota desagertu zirenean, Yeraran hitzaren erabilera laukoitzak (etxea, ibaia, errota eta abizena) “Iyan” oinetxearen iraupenari esker eutsi zion; “Igaran” formarekin iritsi da gaur egun arte. Hauek izango lirateke izenaren zenbait aldaera: Ygueraran; Yeraran; Ygueran; Ygaran; Yeran eta Iyan.



Arandiatarrak.



**Gure Gipuzkoa. Igaran erori aurretik.**

# 53. **Ipintzaerrota** edo Bekoerrota (Ypença)*

Ez zuten Ermandadean parte hartu, baina honela dio jabeak Joanes de Aburruzaren aurrean 1550eko uztailaren 26an egindako eskrituran: *"Martin de Ypença vecino de la universidad de Alço vendio a Maese Miguel de larrañaga de Goicoechea, vecino de la universidad de Alviztur, un censo sobre su casa y casería de Ypença"*.

Albizturko sakramentu-liburuen arabera, Martin de Ypinçak eta Maria Ypinça haren emazteak seme bat izan zuten 1594an, Miguel Ipinça, eta hori, seguru asko, aurrez aipatutako Martinen biloba izango zen. Martin Ypença 1550ean eskribau beraren aurrean egindako beste bi eskrituretan azaltzen da[12].Horrez gain, Maryna de Guebarak 1550eko testamentuan Catalina de Jaureguiri, ordurako zendutako Chartico de Ypinçaren emazteari, zazpi taia[13] kobratzeko agindu zuen. Manuel de Gomaiztegik gogoan du Ipintzako presako hormetako harria Alegiako eliza berreraikitzeko erabili zela entzun izana.



(M.P.)

**Ipintzaerrotatik geratzen dena, larrak hartuta, errekaz bestaldetik ikusita.**

# 54. Irazustabekoa* (Yraçustadebaxo*)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin). Domingo de Yraçuzta jabea (1587an hil zen agian) Madalena Yraçuztarekin (1571n hila) ezkondu zen eta gutxienez hiru seme-alaba izan zituzten: Domingo 1555ean, Marta 1557an eta Domingo 1565ean.

Etxe bakoitzean nor bizi zen zehaztu nahi izanez gero, hainbat dira beste dokumentu batzuen bidez aztertu beharreko "Yraçusta" senar-emazte garaikideak sakramentu-liburuetan. Juanes Yraçusta zen horietako bat. Catalina Ezeizak 1591ko uztailaren 7an Domingo Aburruza eskribauaren aurrean egindako ordainketa-gutuna jaso zuen.

1567ko Gracia de Goicoehearen hilobiari buruzko gatazkan Domingo Yraçusta (epaimahai gisa), Joan, Pedro eta Anbrosio Yraçustak hartu zuten parte. Bi etxeak ordezkatzen zituztela pentsatzen dugu, biek baitzuten beren hilobia lehen hilobi-planaz geroztik. 1576. urtean, Joanes Yrazusta eta Domingo Muñoa (arotzak) elizako lehen fabrika-liburuan agertzen dira, elizarako kanpaia egiteko lanarekin lotutako ordainketa-rengatik: *"Y tambien se ocuparon maestre Domingo de Muñoa y Joanes de Yrazuzta carpinteros el uno en ocho dias y el otro en seis que son catorce en hacer el molde de la campana y aparejos que se pusieron"*.

Irazusta etxeari buruzko lehen albistea 1384koa da, Martin de Iraçustarekin (Albizturkoa), Tolosara laguntza bila joandako 34 laguneko taldean.



(M.P.)

# 55. Irazustagoikoa (Yraçustadesuso)

Ez da ermandadeko kide gisa agertzen, baina 1552ko otsailaren 29an Etxe erre Ermandadeko eskritura sinatu eta handik egun batzuetara, Lázaro de Yraçuztak eskaera hau egin zuen: *"petición ante Domingo de Aburruça de inventario de bienes de su difunta madre, Maria Iraçuzta, dueña de la casa de Yraçuzta de Alviztur, Donación de esta y entrega de Dote"*. Hori horrela, Lázaro Iraçuztak goiko Yraçuzta etxea hartu zuen oinordetzan amaren aldetik eta Vidagayn aitaren (Miguel de Yriarte) aldetik.



(I.G.)

(M.P.)

# 56. Iriarte (Yriarte)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin). Martin de Yriarte, Iriarte etxearen eta Yrisagasti etxearen jabea, 1573an hil zen. Martin (menor en días) semearekin batera 1567an azaldu zen etxearen izenean, Gracia de Goicoechearen hilobiari buruzko gatazkan. Anna (ez da abizenik agertzen) izan zuen emazte eta Martinez gain beste bi seme-alaba izan zituzten: Gracia (1557) eta Ramus (1559).

Lázaro de Yriarte, Gareseko Santiago elizako hargin maisu eta eraikitzailea (1554 eta 1566 artean), XVI. mende hasieran etxe horretan jaio zela pentsatzen dugu eta Magdalena de Asurçiarekin ezkondu zen (Tolosako Auzotxiki auzoko etxea, "Etxe erre Ermandadea" elkartean parte hartu zuen). Lehenengo Lázaro hil zen 1576. urtean eta, ondoren, emaztea 1584. urtean, biak Albizturren. Honela dio Jose Maria Jimeno Jurioren Gareseko elizari buruzko artikuluak: "Los apoderados formalizaron con maese Lázaro de Iriarte, guipuzcoano de Albiztur, la escritura de convenios para obrar la iglesia de Santiago como está comenzada (Puente la Reina, viernes, 18 de mayo de 1554)". Obra berean aritu zen lanean ondoko Oria etxeko bizilaguna ere, Maese Miguel de Oriar pintorea[14].

Albizturko sakramentu-liburuetan, “Yriarte” abizenaz gain, bitan azaltzen da “Yrigarte”: Mari Martin Yrigarte 1615ean hila eta Martin Yrigarte 1629an hila. 1644. urteko parrokia-zenbakian “Yriarte” etxeari “Yrigarte de abajo" deitzen zaio eta “Torre” etxeari “Yrigarte de arriba” (87 zk.).



(I.G.)

(M.P.)

**Harri hutsez lehengo erara egindako arranpa.**

# 57. Iribarren (Yribarren)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin). Jabea, Pedro de Camino, 1598. urtean zendu zen, baina Pedro Yribarren izenarekin jasota dago. Marina Guebarak Pedro Camyno aipatzen du 1550eko testamentuan, bere lurren mugakide gisa. Aipuetan oinarrituta, Yribarren etxeak elkarrekin zeudela eta Aitza etxetik gertu zeudela ondorioztatzen dugu. 1583. urtean bi etxe aipatzen dira: Yribarren Elenarena eta Yribarren de Maria Lopez[15].

1384. urtean hiru anai-arrebek jo zuten Tolosara laguntza bila Yribarrena etxearen izenean: Ochoa Yeneguez de Yribarrena, Sancho Yeneguez eta Yenego.



(M.P.)

**Baratz honetan denboran zehar etxe gehiago ezagutu dira, haien artean izen batzuk, Iribarren borda, Andren txipia, Floreaga...**



(M.P.)

**Harri hutsezko murruan ondo kostata labratutako harri ugari ageri dira, orduka ordaintzen ez zen garaikoak.**

# 58. Iribarren Elenarena (Yribarren)

Maria Elena de Yribarrenek dukat erdia eman zuen Ermandaderako etxearen jabe zen aldetik. Joan de Urreetarekin ezkondu eta hainbat seme-alaba izan zituen. 1556ko otsailaren 13an hil zen. Maria Elenaren senarra urte bereko urtarrilaren 4an hil zen. Jeronimo Urreta izan zen etxearen oinordekoa eta Domingo de Aburruzaren[16] 1583ko ekainaren 6ko eskrituraren arabera handik kanpo bizi zenez, Martin Urreta anaiari ahalordeak eman zizkion gurasoen herentzia zati bat Catalina de Attodori (Fermin de Attodoren alarguna) saltzeko. Salmentan jasotako ondasunen artean zeuden Yribarren Elenarena etxea eta Errotaberriko errotaren erdia.

Yribarren etxeen kokapenarekin lotuta, Errekalderekin (32. zk.) kontatu dugunaren antzeko zerbait gertatzen da: izen bat baino gehiago izendapen berarekin eta izena aldatzea behin baino gehiagotan. Aurrez aipatutako eskrituran, Yribarren Elenarenaren kokapena bat dator egungo Elenarena edo "Elane" etxearen kokapenarekin.

Bestea, Yribarren de Maria Lopez, Elenarenarekin mugan kokatuko genuke, bai aipatutako eskrituran, bai 1655ean (parrokia-zerrenda) eta 1798an (Elizgizonen Plangintza) egindako zerrendetan hala aipatzen delako, bata bestearen atzetik.

Ez dugu ahaztu behar mapa batean 1384an Tolosara joandako herritarrak markatuko bagenitu etxeak irudikatuta izango lituzkeen kalea “Ugartetik” “Urruticoecheara” joango litzatekeela eta herriko gune nagusia “Yribarren” horretatik oso gertu egongo litzatekeela, euskaraz duen esanahietako batek adierazten duen moduan: "herriaren barruko lekua" (hiru kale edo gehiagoko arbendol-formako Erdi Aroko hiriguneetan Barrenkalek, Goenkale eta Bekokale artean, zuen esanahaiaren antzera).


(M.P.)

**Iribarren Elenarena sortaldetik ikusita.**



(M.P.) Elanen dagoen argazkian, 1995 baino lehenagokoan, Elenarena eta Zubiaurre parezpare.



(M.P.)

Elaneko iturria, Simon Labayenek eraikia 1886an.

Jeronimo Urretak bere anaiari, Martin Urretari, ahalgutuna bidaltzen dio.

# 59. Irigoien (Yrigoyen)

Catalina de Yrigoyenek dukat batekin hartu zuen parte Ermandadean. Ez dugu Catalinaren heriotzaren data topatu sakramentu-liburuetan, baina bai beste bi heriotza (Maria Yrigoyen 1562an eta beste Maria Yrigoyen bat 1595ean), hiru ezkontza eta jaiotza bat (Catalina Yrigoyen 1575eko otsailaren 6an jaio zen; Juanes Yrigoyen eta Maria Arrecheren alaba izan zen).

Yrigoyen etxeak bazuen hilobia 1642. urterako jada, baina abizen horrekin ez zen inor joan Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkara.

1655eko parrokia-zerrendan Camino, Miranda eta Beitia etxeen ondoan aipatzen da, hau da, Pedro Arruek Munaburuazpi baserriaz emandako XX. mende hasierako kokapenarekin bat dator. 1933 inguruan, oraindik oso txikia zela, aitari hargintza lanetarako zementua erostera kalera lagundu zion egun batean "Yrigoyen", “Iruain” edo "Iruin" etxea nola botatzen zuten ikusi ahal izan zuen. Garai hartan “Iruin” etxearen jabe zirenek harri hura behar zuten erre berri zitzaien “Torre” etxea berreraikitzeko. “Iruin”, hortaz, “Yribarren", “Yriarte” eta “Yrisagasti” etxeetatik hurbil zegoen, “Yrisarri” ondoan. “Yri” terminoa (jendezatutako etxea edo lekua) partekatzen dute denek.



AGG-GAOPT

Irigoien Ermandadea.



Irigoien edo Iruin, Estanka eroriaren atzean.

Elane

# 60. Irisarri (Yrisarri*)

Ermandadeko kide gisa azaltzen da 1553ko memorialean: Joan Martinez de Yrisarri jabeak dukat bat erdi bana eman zuen teilatupeko bi etxeengatik. Orubeari buruzko datuak 1384koak dira, Joan de Yrisarri Albizturreko beste 32 herrikiderekin batera Tolosara joan eta herritartze-gutuna egin zutenekoak (ikus 2. gaia). Horrez gain, Martin de Yrisarri eta haren seme Juan Martin 1553. urteko eskritura batean azaltzen dira eta eskritura hori Tolosako artxibo historiko probintzialean Albizturri buruz topa daitekeen lehenengoetarikoa da. Bertan, Juan Martin maiorazko gisa azaltzen da, Arrozpideren lurretan etxea eraikitzeko baimena eskatzen baitiote, lur horietan boterea zuelako. Urte batzuk lehenago, 1550ean, Maryna de Guebarak bere testamentuan aipatu zuen Joan de Irisarri: " *Y también mando cobrar de Joan de Yriysarri un ducado prestado y los frutos de diez años de un castañal llamado Salyveta* "[(17)].

Joan de Irisarriren arrebetako bat, Madalena de Irisarri, Joanes de Marquillusekin ezkondu zen 1568ko urriaren 3an. Horrela, haien seme Joanes hiru etxeren jabe izatera iritsi zen: Yrisarri, Marquillus eta Yeraran.



(M.P.)

## 13. gaia: gaztainadiaren balioa

Marina de Yrisarrik (ustez Joan de Yrisarriren arrebak) lau baldintza jarri zizkion Maria de Yrisarri iloba eta oinordekoari aipatutako gaztainadiak familian jarrai zezan hurrengo belaunaldietan (Joan Ochoa de Aguirreren aurrean egindako testamentua, 1595eko irailaren 15ekoa. Testamentu horren zati baten transkripzioa):

*"Y también muestro por mis bienes los siguientes: Primeramente un castañal llamado Gorostarrasti ... que lo tuve y se me adjudicó por mi legitima parte y porción hereditaria que tuve de haber de los bienes de mis padres.../... herencia que hago con la clausula y condición que después de que la dicha Maria de Yrisarri mi heredera muriere, que dé el dicho castañal arriba declarado para Marina Arrozpide su hija mayor y en falta de ella para los demás sus hijos y herederos y sucesores de la dicha Maria de Yrisarri mi sobrina, y con que el dicho castañal no pueda vender ni enajenar la dicha Marina de Yrisarri mi sobrina y heredera en su vida sino que haya de estar en pie sin venderse ni enajenarse, y si lo vendiere o enajenare quiero que ni valga la tal venta ni enajenación, salvo que quiero y mando que si Joanes de Marquilox e Yrisarri mi sobrino cuyas son las casas de Yrissarri Marquilox e Yeraran quisiere el dicho castañal para sí lo haya y tome por el precio justo y valor que valiere pagando el dicho precio y valor a la dicha mi heredera y sus sucesores".*

Gaztainadiak landatu eta aprobetxamenduaz gozatzeko herri-zailen erabilera Yrisarri etxeko oinordekoarengan topatuko dugu, Joanes de Marquillox y de Yrisarrirengan, alegia. 1594. urtean bost gaztainadi zati erabili eta aprobetxatzeko eskubidea zuen: *"Y también inventariaba al inventario los árboles de castaños y su aprovechamiento que están plantados en los términos concejiles y comunes del concejo de la tierra de Albiztur en cuatro pedazos y lugares llamados Corteta, Larluz, Ejido y Salibeta, que son anexos a la dicha casa de Marquilox y lindan con ella .../ Y otro pedazo de castañal a si bien en el mismo término concejil llamado Eraustico Iturriaga que es su aprovechamiento anexo a la dicha casa de Yeran ...".*



**Maryna Guebararen testamentua 1550 (ver nº 43).**

# 61. Isagasti (Yrisagasti)

Martin de Yriarte zen jabea eta dukat batekin hartu zuen parte Ermandadean. Martin Yriarte orubearen (ikus 56. zk.) jabea ere bada. Izena honela itzul daiteke: “lugar poblado en el manzanal” (sagastian jendeztatutako lekua). Eskrituretan “manzanales, castañales, robledales y montes” terminoak ageri ziren, eta horien bidez ondoriozta dezakegu baserriaren biziraupenerako garrantzitsuak zirela. Eskribau bakoitzaren aldaerak kontuan hartuta, ezkontza-kontratuetan maiz errepikatutako formulak honela esango zuen: "Y mando la casa de ... con su casa y borda de ganado y su huerta, tierras sembradías y valdías, manzanales, castañales, robledales y montes que tiene y le pertenece y con el derecho de vecindad de patronazgo y señorío y sepultura que tiene la dicha casa en la iglesia parroquial de nuestra señora de Santa Maria de la dicha villa de Albiztur donde es sita dicha casa."



(I.G.)

## 14. gaia: sagastien garrantzia

XVI. mendean Albizturren izandako sagardogintzaren adierazgarri dira eremuko hainbat baserritan topa ditzakegun garai bateko habe-dolare sistema eta horren hondarrak. Baserri batek bere burua horni zezakeen torloju bateko dolare txikiarekin, baina baziren espezifikoki sagardoa ekoizten zuten ardatz bat edo biko hainbat dolaretako edo habe-dolareko baserriak ere eta inguruko baserrien zerbitzura ere bazeudenak. Hain zuzen ere, bi ardatzeko dolarea egiteko eskatu zioten Miguel de Basayaz Albizturko arotzari 1658an, erre zen Guruçeaga de Urquizu etxea berreraikitzean:

*"Lo primero que el dicho Miguel de Basayaz haya de fabricar la casa en lo que toca a la carpintería toda ella hasta echarle la teja, en perfección conforme a la arte del dicho oficio; Y también que dentro de dicha casa y en su primer sobrado haya de poner y asentar los lagares y su mandiadura bien ajustada en el punto que toca conforme a lo dispuesto, con dos usos de forma que queden acabados perfectamente para majar manzana y hacer sidra."*[18].

Bildutako XVI. mendeko ondasunen inbentarioetan sagardoaren munduarekin zerikusia duten aipu ugari topatu ditugu. Esate baterako, etxe bakoitzeko sagardoa ontziratzeko upel bat edo bi egon daitezke jasota, halakorik baldin bazen. Kupel haiek gehienez ere 220 eta 180 errada ingurukoak (3.520-2.880 litro) edo txikiagoak izan zitezkeen. Kupelaren landutako hegalek bere horretan inbentario batean aipatuak izateko adinako balioa zuten. Gauza bera gertatzen da ere hamabi upel-oholekin kupeletarako. Etxeari zegozkion sagasti zatien (zaharrak edo gazteak) mugak aipatu egin ohi ziren eskrituran.



**Sagastiak Maryna Guebararen testamentuan 1550 (ver nº 43).**

# 62. Itsaso (Itsaso*)

Domingo de Recaldek dukat bat eman zion ermandadeari Ychaso eta Alfaro etxeengatik. Hortaz, Itsaso etxeak dukat erdia ematen zuen. Domingok Indietan bizi zen anaiaren baten ahalordea zuela ondorioztatzen dugu (ikus 10. zk. Alfaro).

Gainera, 1384az geroztik dugu horren berri, Pero Yeneguez de Itsaso beste herritarrekin batera Tolosara joan zenetik. Sakramentu-liburuetan jasotakoaren arabera, Marina Yssaso 1570eko uztailaren 7an hil zen eta Cathalina Yssaso 1573ko abenduaren 15ean. Haiekin “Itsaso” abizena desagertu egin zen Albizturren. “Yssasso” etxea Joanes de Marquiloxen 1594. urteko inbentarioan aipatzen da. Abizen horrekin, ordea, ez du inork etxea ordezkatuko Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan. Bi galdera sortu zaizkigu: Marina eta Cathalina Itsason bizi izan al ziren? Eta nor zen jabea 1552. urtean?

Parrokia-zenbakiari jarraiki, 1655. urtean dagoeneko Joan de Zalacain eta Maria Joaniz de Aburruzaren familia etxe horretan bizi zen. Albizturko elizan hilobia zuten Ychaso izenarekin, 1758-1642ko hilobi-planean azaltzen den moduan.



(I.G.)

# 63. **Iturriondo** (Abadia eta Mongia)

Pedro de Errecalde erretorea agertzen da Abadia eta Mongiako jabe gisa eta horietako bakoitzarengatik dukat laurdena eman zion Ermandadeari.

Erretore-etxea edo apaizetxea gaur egun "Florencia" orubean (ikus Apaizetxea 12. zk.) badago ere, 1552an ez zegoela han, garai bateko Erretoretxean baizik pentsatzen dugu, gaur egun Labayenek eraikitako iturriaren parean, agian Mongia edo monjetxea zenaren aldamenean egongo zen.

Iturriaren pareko "Iturriondo" izeneko orubean etxe bat baino gehiago eta izen bat baino gehiagorekin ezagutu dira mendeen joanean, berritu eta XX. mendean tamaina handiko eraikin bakarra bilakatu arte. Hori dela eta, orubearen prozesu historikoa ulertzeko beharrezkoa da ikerketa sakonagoa egitea eta gure datuen arabera etxe hauek agertuko lirateke hainbat datetan: Abadia eta Mongia (Iturriondo 63. zk.); Erretore-etxea eta Atodo (1655ean parrokia-zerrendaren arabera); Erretore-etxea eta Lezi (1768an Oñatiko hipoteken liburuko indizearen arabera); Erretore-etxea, Sakristau-etxea eta Lezi (1798an Albizturko Elizgizonen Plangintzaren arabera) eta, azkenik, Florencia (Apaizetxea 12. zk.).

Azkenik, esan behar da datu baten arabera 1642an Abadia denbora batez Zamora etxean egongo zela, hilobi-planeko ohar batek dioenez Zamora etxeak aurrez 1642an Abadiarena zen hilobia hartu baitzuen.



(I.M.)

**Erretorearen sukaldeko aska.**

(I.G.)

# 64. **Kalea** (Callea*)

Ez zuen parte hartu “Etxe erre Ermandadea” elkartean. Aitzitik, Martin de la Calle 1384. urtean Tolosara joandako herritarretako bat izan zenez, 1552an orubea existitzen zela frogatuta dagoela uste dugu. Horrez gain, Machin de Calle topatu dugu 1438an (Portillo-ko eskritura) eta Martin de Cale 1454an (Urdaztainen eskritura).

Calle etxearen kokapenari buruz, Juan Miguel de Landa eskribauak 1567ko uztailaren 13an Juanes de Barrenechearen aurrean sinatutako eskritura jaso zuen 1781eko martxoaren 5ean eta bertan Domingo de Ugarte ordurako Calle etxearen jabea zela egiaztatzen da, gutxi gorabehera kokatuta zegoen lekuan:"...*y Domingo de Ugarte también fiador hipotecó la casa llamada de Ugarte y la otra Calle con sus huertas, tierras sembradías y baldías, y el molino que está pegante a la dicha casa de Ugarte todos en la jurisdicción de la Villa de Albiztur"*. Salerosketa hori Albizturko hipoteken kontularitzako indizean jasota dago data berarekin, “Calle (casa)” izeneko atalean. 1567ko data horren ostean ez dugu Callea etxea gehiago topatuko; horren hilobirik ere ez dago jasota. Hau da, etxea betiko desagertuko da etxebizitza gisa.

Hori horrela, 1567an Kalea etxea dagoeneko ez zen Martin Calleren ondorengoena. Sakramentu-liburuetan hildako bi lagun soilik topatuko ditugu abizen horrekin: Maria Callea 1572. urtean hila eta Mari Latron Callea 1578an hila. Haiekin abizena desagertu egin zen Albizturtik.

Etxeen izenek okerreko ondorioetara zergatik eraman gaitzaketen jabetzen gara (ikus Urrutikoetxea 95. zk.), baina baita zenbait ustek azterketan sakontzera eramaten gaituztela ere. Azterketari buruzko jarrera kritiko horretatik ezin ahantz dezakegu Tolosako Kale Nagusia 1000 eta 1256 urteen artean amaitu zela eta bigarren kalea 1350. urtean, ordurako harresitutako ingurunearen barruan (Tellería Tapia; 2011). Albizturrek ere etxe multzoa sortu zuen uneren batean Ugartetik eliza arte, Tolosatik Bidaniarantz zetorren errege-bidearen alboetan. Callea etxea (1384tik 1567ra) “Ugarte” etxearen ondoan egonik, orduan Albizturko kale bakarra zenaren hasiera izan zitekeen (ikus "Yribarren" 57. zk.).




(I.G.)

# 65. Kamino (Camino)

Juan de Azteguy zen jabea eta dukat laurdena eman zuen Ermandaderako. Ez dugu Juanen heriotzarik topatu elizako liburuetan. Catalina Camino eta Martin Caminoren (Yriarte) alaba Maria Caminoren jaiotza, aldiz, azaltzen da 1556ko urriaren 10ean. Pedro de Camyno ere agertzen da Maryna de Guebararen 1550eko testamentuan: *"Y también mando cobrar de pedro de camyno veyntycinco tarjas de resta de mayor suma"*. 1782ko Albizturko hipoteken liburuaren arabera eta 1798ko Albizturko Elizgizonen Plangintzaren arabera, Camino etxea Yriarte, Oria eta Beitia inguruan zegoen. Familien arteko harremanek (1550-1560) ere leku bera iradokitzen dute (Camino, Yriarte, Yribarren, Oria, Errecalde eta Guebara familiak). Ez dakigu ziur, ordea, 1552an eta aipatutako epean (1782-1798) kokapena bera izan ote zen.

**Matias Camino Chipiren heriotz agiria (Libro 2º Defunciones/f.7r/DEAH).**

**Pedro de Camyno aipatua Maryna de Guebararen hilburukoan 1550.**



(M.P.)

**Kamino Oriaren etxetik gertu zegoen.**

# 66. Kamino txipi* (Camino Chipi)

Jabe ezezaguna. Elizako liburuetan datu bakarra ageri da, baina hori erabakigarria da: Matías Camino Chipiren heriotza-agiria, Arrabane (1587).

"Kamino" izeneko etxea bazegoenez eta kalean kokatuta zegoenez, Kamino txipi haren ondoan edo handik oso gertu kokatuko zela pentsatzen dugu. Hau da, Ayçalde chipi, Uscasoro chipi edo Atodo chipi etxeen antzera gertatuko zen. XVI. mendean kalearen bi aldeetan etxe ugari eraikitzearekin batera, Camino chipi fisikoki desagertu egingo zen eta eraikinarekin batera baita abizena ere. Sakramentu-liburuetan "Caminos" abizena ere agertzen da. (ikus 90 zk. Urkasoro chipi).

**Hilobien planoa, 1758, DEAH. Kamino txipikoak Kamino etxean lurperatuko ziren, beraien hilobirik ez zeudelako.**

# 67. **Kareagaundi** (Careaga)

Kareaga izeneko etxe batek Ermandadean parte hartu zuen dukat batekin. Catalina de Careaga zen etxearen jabea. Careaga etxebizitza bakar gisa agertzen denez, egungo bietako zeini buruz ari garen argitu behar genuke. Oñatiko hipoteken kontularitzaren arabera, jasotako lehen eskrituretan "Kareagaundi" "Careaga de abajo" (Careaga behekoa) eta "Kareagatxiki" "Careaga de arriba" (Careaga goikoa) ziren. Denboraren joanean egoera aldatu egin zen eta, bitxia badirudi ere, hasieran etxe txikia zena handi izendatua izatera igaro zen. Honela gertatu zen: Careaga goikoa edo Goyena Careaga eta Borda ziren. XIX. mende hasieran berreraiki eta bi etxeekin bakarra egin zen eta neurri handiagoa hartu zuen; XIX. mendearen amaieran erre eta berreraiki egin zuten egungo itxura emanez. Hortaz, Ermandadearen 1552ko eskriturako Careaga egungo Kareagatxiki baserria izango zen.

Aurrez aipatutako Catalina de Careaga Martin Careagarekin ezkondu zen. 1562ko abenduaren 29an hil zen eta bi seme-alaba utzi zituen gutxienez: Antonio (1558an jaioa) eta Maria (1560an jaioa). Miguel de Careaga delako bat (Catalinaren seme zaharrena izango zen seguru asko) familiaren izenean agertu zen ama hil eta bost urtera, 1567an, Gracia de Goicoechearen hilobiari buruzko gatazkan. Miguel de Careaga Domenjarekin ezkonduta zegoen (1564ko abenduaren 15ean), baina ez dago ondorengorik jasota. Antón Careagak (1598-1675), Estebania de Amonarrorekin ezkonduak, jarraitu zuen etxean, 1655eko Albizturko parrokia-zerrendak adierazitakoari jarraiki. Careaga behekoan konfirmatutakoen zerrenda: Anton de Careaga, Estebania de Amonarro, Mariana de Careaga, Angela de Careaga, Cathalina de Careaga eta Tomas de Careaga. Careaga goikoan, berriz, hauek bizi ziren: Andres de Altolaguirre, Theresa de Careaga eta Martin artzaina.


(I.G.)

## 15. gaia: Kareagaundiko disko-formako hilarria

Antxon Aguirre Sorondok[19] ez du Kareagaundiko hilarria aipatzen 1991ko "Estelas discoidales de Gipuzkoa: Origen y significado" liburuan, baina bai 2013ko "Las estelas discoidales de Ordizia" artikuluan. Albizturko honetaz gain, gure probintzian baserri edo etxeen ateburuetan jarritako beste lau hilarri daude dokumentatuta: Barrena jauregia (Ordizia), Garikoetxea (Alkiza), Urbizu (Idiazabal) eta Errotazarrenea (Segura).

Aguirrek dioenaren arabera, disko-formako hilarriak jatorrian hilarriaren buru gisa erabiliko ziren, lurperatze-lekua adierazteko. XV-XVI. mende inguruan eliza barruan lurperatzen hasi eta kanpoko hilerria albo batera utzi zen. Kanpoko hilerriko hilarriak baztertu ziren une hartatik aurrera, bideetan eta eremuetan jartzen hasi ziren, heriotzaren lekua adierazteko.

Aurrerago harlangaitz arrunten moduan erabili zituzten eta Kareagaundin bezala, elementu apaingarri eta sinboliko gisa erabili ziren (etxea babestea, azpitik igarotakoak bedeinkatzea...). Albizturko 1550eko hilerri zaharrean (elizaren kanpokoan) izango zuen bere jatorria seguru asko. 1557an eliza barruan hilobi batzuk bazirela badakigu. Gogora dezagun 1567an Gracia de Goycoecheak kanpoko hilerriko hilarria kendu zuela eliza barruan Maese Miguel de Larrainaga senarraren hilobian jartzeko eta horregatik gatazka sortu zela herritarren artean (ikus 3. zk. Aitzalde; 3. gaia).


(M.P.)

**Hilarria gertutik.**


(M.P.)

**Lehengo etxeen arrastoak.**


(M.P.)

# 68. Larrañagagoikoa (Larrañaga)

Erramus de Larrañaga zen jabea eta dukat bat eman zuen Ermandaderako Santa Marina auzoan zuen etxeagatik. "Larrañaga" abizena mendeetan agertzen da jabeen abizen gisa, Oñatiko hipoteken kontularitzako indizeak erreferentziatzat hartuz gero. Lehenik eta behin Miguel Larrañaga topatuko dugu, 1603. urtean jaioa eta Catalina Perez de Aizalderekin ezkondua 1629an. Francisco Ibañez de Erquicia eskribauaren aurrean 1634ko apirilaren 29an egindako ordainketa-gutuna dute biek. Miguel Larrañaga 1685ean hil zen.

Gure lehen erreferentzia, ordea, Ramus Larrañaga da; sakramentu-liburuen arabera 1563ko irailaren 22an hil zena. Horregatik, 1567ko Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan haren semea, Joan Marin Larrañaga, aurkeztu zen etxearen izenean.

Haren atzetik Joan Marin Larrañaga etorri zen, beharbada bi aldiz ezkondu zena: lehenengo Maria Mendiolarekin, 1558an hil zenarekin, eta ondoren, Maria Juaniz Pagoagarekin; bigarren emaztearekin seme-alaba asko izan zituen.

Erramus Larrañagaren familiarekin lotuta bi anai-arreba edo senide izan daitezkeenak aipatzen dira 1550ean Maryna de Gebararen testamentuan: Maese Miguel de Larrañaga (Gracia de Goycoechearen senarra) eta Maria de Larrañaga.

1655eko parrokia-zerrendaren arabera, Larrañaga etxean Miguel Garmendia eta Maria Hunsain senar-emazteak eta 1655ean jaiotako haien alaba Ana bizi ziren. Ez dirudi Albizturko familia denik, iritsi berriak baizik. Hortaz, etxea errentan egongo zela pentsatzen dugu.



(I.G.)

# 69. Larrarte (Larrarte *honunzkoa* edo hemengoa, Gorostidiranzkoa edo Juan Lopezena)

Maese Joan de Larrarte zen jabea eta dukat bat eman zuen ermandaderako. Marina de Yrisarri izan zuen emazte eta bien alaba, Marina de Larrarte, Miguel de Errandosororekin ezkondu zen 1556ko azaroaren 13an. Bi heriotza-data daude sakramentu-liburuetan: Juan Larrarte Recalde 1586ko ekainaren 12an eta Juan Larrarte Larrañaga 1590eko urtarrilaren 20an.

Bai 1642ko hilobi-planean, bai 1655eko parrokia-zerrendan, etxeari *"Larrarte de Juan Lopez"* deitzen zaio eta hilobiak *"Larrarte acia Gorostidi"* dio. Juan Lopez Larrarte Maria Joaniz Aizalderekin ezkondu zen 1630eko abenduaren 3an.

Albizturko iparraldean, Gorostidi ondoko bi Larrarteak, Larreta eta Intxurbi dira goi mendietako baserrien adibiderik onenak. Esku artean ditugun 1550-1560ko eskrituretan, Larrarteren azpialdeko haranean sortzen den errekari "Y(gu)era(ra)n erreka" (Igaran erreka) deitzen zaio; (ikus Igaran 52. zk.): *"... el río que baja de Larrarte"*. Beynaranen kasuan, aldiz, iturriak aipatzen dira: "...(lindan) *con el arroyo que vaja de las fuentes de Beynaran"* (ikus Markuluts 73. zk.: 1594ko Joan de Marquilosen inbentarioa).




Bi baserriak elkarren ondoan urrutitik ikusita.

**Larrarte Gorostidiruntz.**

# 70. Larrarte (Bidaniaranzko Larrarte, Domingorena edo Miguelena)

Domyngo de Larrarte zen jabea eta dukat batekin hartu zuen parte ermandadean. 1567ko urriaren 9an hil zen. 1642ko hilobi-planean "Larrarte de acia Bidania o de Domingo" moduan agertzen da eta 1655eko parrokia-zerrendan "Larrarte de Miguel" moduan. Miguel hori Miguel Larrarte delakoa izan zitekeen, Larrarteko Domyngo jabearen garaikidea izan zena. Maria de Larrarterekin ezkondu eta bost seme-alaba izango zituen aipatutako Domyngo hori 1567an hil zenerako.

Gracia de Goycoechearen (1567) hilobiari buruzko gatazkara pertsona bakarra bertaratu zen Larrarte etxearen izenean: Miguel de Larrarte, aurrez aipatutakoa seguru asko. "Etxe erre Ermandadea" elkartean "Larrarte" izeneko bi etxek parte hartu bazuten ere, "Larrarte de Juan" bigarren etxearen izenean ez zen inor joan.

Etxe horrekin edo handik gertuko beste eraikin batekin izan zezakeen loturagatik aipagarria da sakramentu-liburuetan agertzen den "Larrarte Arecetegui" abizena: Maria Larrarte, Larrarte Arecetegui 1956ko abenduaren 21ean jaioa eta Juanes Larrarte Arecetegui, Larrañaga, 1593ko martxoaren 14an jaioa.



(M.P.)

**Larrarte Bidaniruntz.**

# 71. Larreta (Larreeta)

Ermandadean parte hartu zuen (dukat batekin). Simón de Larreta zen jabea, Gracia de Olatearekin ezkondua. 1568ko abuztuaren 31n zendu zen. Gracia urtebete lehenago hil zen, 1567ko maiatzaren 26an eta alaba bat utzi zuten, Maria de Larreeta, Martin Aztinarekin ezkondu zena. Simon de Larretak biloba utzi zuen oinordeko gisa, Martin Arano de Larreeta, Maria Larreetaren eta Martin Aztinaren semea, Domingo de Aburruzaren aurrean 1568ko abuztuaren 1ean emandako testamentuaren arabera.

Larretako beste hiru gizonezkok izan zituzten ondorengoak garai hartan: Lázaro Larreta (1556ko urtarrilaren 19an jaiotako beste Simón Larreta baten aita); Pedro Larreta (1557ko maiatzaren 23an jaio zen Pedro Larretaren aita) eta Francisco Larreta (1569ko uztailaren 3an jaio zen Francisca Larretaren aita). Ziur asko horietakoren bat Ermandadean parte hartzen zuen Simón de Larretarena zen Olatea etxean biziko zen. Horrez gain, Leonor de Larreta delakoa Domingo Aburruzarekin (Tolosako Salsoro jauregiko nagusiarekin) ezkondu zen 1563an. Simón de Larreta Albizturko alkate izan zen 1557an, Tolosako Udaleko akten arabera.




**Larreta eta bere saletxea.**

# 72. Lopechea*

1552ko memorialaren arabera, Maria Perez de Urrutume zen jabea eta dukat laurdena eman zuen Lopechea jaunaren etxearengatik. Ez dakigu non kokatuta zegoen edo ondoren izenez aldatu zuen lekuren bat hartu ote zuen.

**Joanes Aburruzaren memoriala (1553).**

**Hilobien planoa, 1758, DEAH. Lopechea 40 zenbakia. 1642.**

# 73. Markuluts (Marquilus)

Jabeak, Joan de Marquilosek, dukat batekin hartu zuen parte Ermandadean orubearen jabe gisa. 1568an Madalena de Yrisarrirekin ezkondu zen eta 1586an hil zen. Ezkontza horren ondorioz, haien seme Joanes Marquilox Yrisarrik haraneko bi ibaiek mugatutako lurrak hartuko zituen oinordetzan, garai batean egiten zen bezala: eskuinetik ezkerrera, "Beñaran errekatik" "Ygueraran errekara"; eta goitik behera, Yrisarri etxetik Arrozpide etxera (toki horretan kokatutako eta Gorostidiren jabetzako Aguirialde etxea izan ezik).Sakramentu-liburuetan hildako lehen pertsona María Marquiloch da (1559an) eta Joanen ama edo senidea izan zitekeen.



(I.G.)

## 16. gaia: Markuluts, hamabi belaunaldi 1552az geroztik

Kasu bitxia gertatu da; izan ere, bi abizenek (bi familiak) soilik osatzen dute etxe horren historia: "Marquilus" eta "Ezeiza" familiek. Sakramentu-liburuetan ageri den lehen ezkontza dagoeneko aipatutako Joan Marquilos eta Madalena Yrisarriren artekoa da 1568an; ondoren, haien seme Joanes Marquilox Domenga Yrigoyenekin ezkondu zen 1612an. Abizenaren jarraitasuna arriskuan geratuko da Joanes eta Domengaren bi seme-alaben (Joan eta Ana) arteko auziaren ondorioz. Ez dakigu Ana Marquilus Yrisarri e Yrigoyenek (1648an Juan Erausquin Aburruzarekin ezkondua) anaiaren aurkako auzia (1675-1686) irabazi ote zuen, baina etxea bere eskuetara igaro zen Oñatiko hipoteken kontularitzaren arabera. Hurrengo jabea Magdalena Erausquin Marquilus alaba izan zen; lehenengo Ramus Olatea Larrarterekin ezkondu zen 1688an eta bigarren aldiz Juan Eznaola Argaiarekin 1692an.

# 73. Markuluts (Marquilus)

Albizturko parrokia-zenbakiaren arabera, 1655ean Markulutsen bizi zen familia Domingo Ynsausti eta Maria Leunda Leterena zen. 1622an ezkondu ziren Azpeitian eta hamabi urtetik gorako lau seme-alaba zituzten eta seguruenik baita beste adingabekoren bat ere. Horrek aditzera ematen duenez, denbora-tarte luzean Markuluts etxea familia horri edo beste batzuei alokatuta egongo zen. 1740. urtean, Markuluts etxea Juan Bautista Eznaola Erausquinen eskuetatik (Magdalena Erausquin Marquilusen semea) Joseph Ezeiza Aizalderen eskuetara igaroko da, etxearen berezko izena den "Marquilus" abizenaren ondorengoen bost belaunaldiri amaiera emanez.

Oñatiko hipoteken kontularitzan Markulutseko jabe gisa agertzen den lehen ezeizatarra Juan Bauptista Ezeiza Olatea da, baina haren aitari Joseph Ezeiza Marquilus izena ematen zaio sakramentu-liburuetan, hark erosi izan balu bezala. Puntu hori argitu gabe dagoenez, atal honen izenburuan historiako hamabi edo hamaika belaunaldi arteko zalantza utziko dugu.

Juan Bautista Ezeiza Olatea Maria Juana Iraeta Querejetarekin ezkondu zen 1747an eta bigarren aldiz Betronila Arregui Irarretarekin 1773an. Urrutume, Aguirre eta Ezeizagoiena (Urquizu) etxeetatik etorritako arbasoak zituen lehen ezeizatarrak sei belaunaldiz luzatu den kateari ekin zion Markulutsen eta duela urte gutxi batzuk amaitu da kate hori, Julio Ezeiza Larrarteren heriotzarekin. Zaila da ingurune geografiko berean hain ibilbide luzeko beste abizen bat topatzea: 1550ean Pedro Ezeiza dugu Urkizun, María de Aguirrerekin Albizturra ezkondu zen 1563an eta abizenak herrian lehen abizen gisa jarraitu du bost mendetan, gaur egun arte.

Lehen Ezeiza ezkontideen ondoren, Juan Joseph Yraeta semea aipatu behar dugu; María Ana Yturriza Oyarzabalekin ezkondu zen 1777an. Ondoren, Juan Bautista Ezeiza Yturriza etorri zen. María Melchora Ezeiza Munita Pagadirekin ezkondu zen 1812an. Haren ondorengoa, Baltasar Antonio Ezeiza Ezeiza 1852an ezkondu zen Vitoria Ezeiza Echenagusiarekin. Horrela, azken senar-emazteetara iritsiko gara, Juan Bautista Ezeiza Ezeiza eta Josefa Antonia Larrarte Baztarrica (1887). Haien semea, Julio Ezeiza Larrarte, ez zenez ezkondu, Ezeiza abizenak Markulutsen egindako sei belaunaldiko katea apurtu egin zen (Julio bera belaunaldi bat bezala kontatuta).

Markulutsen bizi izan ziren edo bertako jabe izan ziren hamaika senar-emazteen katea osatu ondoren, erraza da garai bakoitzean bizi ziren familia taldeak osatzea. Ezkontza-kontratuak, testamentuak eta salerosketak irakurrita, bizimoduari eta zeuzkaten baliabideei buruzko datuak jasotzen ditugu. Etxea eta maizterrak ezagututa, eraikina hobetzeko lanak bilakaera historikoaren une garrantzitsuekin lotuta ageri dira: XVI. mendeko sagardoaren produkzioa eskala handian; hazkunde demografikoa; aberastasuna artoaren etorrerarekin eta abar.

(M.P.)



**Markuluts aurrez aurre bere bi hontza-zuloekin.**


(M.P.)
**Larreta borda atzetik.**


(M.P.)
**Larreta borda erdiko zutabea.**


(M.P.)
**Arrozpide borda aurretik.**


(M.P.)
**Arrozpide borda barrutik.**

# 74. Miranda (Miranda*)

Pedro de Miranda jabe gisa ageri da 1553ko memorialean eta dukat bat eman zuen ermandaderako Miranda etxearengatik. 1550ean Marina de Guebararen testamentuan ere Martin de Myranda aipatzen delako dakigu horren berri. Sakramentu-liburuen arabera, 1567an Maria Myranda jaio zen, Martin Myranda eta Catalinaren alaba. 1557an Pedro de Miranda eta Catalina Eçeyça ezkondu ziren. Elizako lehen fabrika-liburuko (1556-1643) 3. orrialdean, eskribauaren sinaduraren azpian honela irakur daiteke: “vecino de la casa de M. Mirandas"; Martin Mirandaz ari dela suposatzen dugu.



Pedro de Miranda, en Caueza entera; por la
su casa de Miranda//

Joanes Aburruzaren memoriala (1553).

“Miranda” etxearen atal hau, kalean kokatutako familia gisa, leku egokia da Albiztur herriaren sorrerak berekin ekarri zituen askotariko lanbideak aipatzeko. Azterketa hau dokumentatzeko (1550 eta 1600 artean) erabilitako eskrituretan lanbide hauek agertu zaizkigu: nekazaria, hargina, arotza, errementaria, errotaria, serora, zapataria, jostuna, pintorea (urreztatzailea eta brotxazko pintorea), igeltseroa eta kapagilea (jostuna edo kapak egiten zituena). Tolosan bizi zirenenak ez ditugu jaso: eskribaua, sarrailagilea, txikizkako saltzailea (kinkila-saltzailea), erlojugilea...



1.. Oria.
1.. Camio.
1.. Miranda
1.. Echeverria.
1.. Andrenea.
1.. Yrigoyen.

Albizturko Parroki-matrikula 1798. Ordenak Miranda non zegoen adierazten digu.

Apaizaren zerrendak 1655. urteko matrikula parrokialean Miranda non zegoen adierazten digu: Kamio eta Etxeberria etxeen artean.

# 75. Mitxenea (Recarte)

1553ko memorialaren arabera, Maria de Veytiak dukat bat erdi bana eman zuen Recalde behekoa eta Beytia etxeengatik. XVI. mendeko lehen eskrituretan jada bi etxeak topatu ditugu: Recalde goikoa, handik hurbil zegoen Atodo etxearekin lotura handiagoarekin eta Recalde behekoa edo Mitxenea (Recarte), erantsitako Beitia etxearekin lotura handiagoarekin. 32. zenbakian ikusi dugun moduan, Errecalde izenak garai bateko “Recalde de arriba o garaicoa" etxearekin jarraitu du. Recalde behekoa edo Yusok, aldiz, hiru izen izan ditu XVI. mendean eta horrek asko zaildu du etxearen azterketa.



(I.G.)

## 17. gaia: jabe berriarekin etxearen izena aldatzea, gainditu beharreko zailtasuna

Izena aldatzearen ondorioz, etxearen eskrituren erreferentziak nahasian daude Oñatiko hipoteken kontularitzako indizean eta gehiago inplikatu behar dugu ikerketan hiru paragrafotan laburbilduko genituzkeen aldaketak argitzeko:

**1) Recalde de Yuso:** 1558ko ekainaren 1ean Miguel de Munita Joana Pagadirekin ezkondu zen Recalde de Yuso izeneko etxean.

**2) Recarte:** 1572an "Recalde becoa" Maria Perez de Recalderen familiaren eskuetan zegoen. Maria Joanes de Zuloaga Alutondorekin[20] etxean ezkondu zen urte horretan bertan eta 1581ean hil zen ondorengorik utzi gabe, beraz, Maria de Andreonaga, Domingo de Ormaesearen alaba, izendatu zuen oinordeko. Maria Perez de Recaldek *“su casa derrecarte"* aipatzen du beti, bai ezkontza-kontratuan, bai testamentuan.

**3) Michelena:** hipoteken kontularitzan ikus dezakegunaren arabera, 1633an Miguel Munita zen Michelena etxearen jabea eta 1669an hau irakur dezakegu: "la casa de Recarte hoy llamada *Michelena*". Gaur egun Mitxenea deritzo, Mitxelenaren laburdura. Lagunartean “Herreroenekoa” deitzen zaio.

Ateburuan jartzen duen moduan, etxea 1706. urtean berreraiki zen, hegoaldeko bi solairuak harlanduzko paretarekin eta karbonatozko toba arineko blokeekin babestuta. Bi alderdi horietan handik gertu dagoen Errekalderen (32. zk.) berdin berdina da. Hori ere 1700 inguruan berreraiki zen.

# 76. Muñaburuzar (Bunaburu)

Blasio de Bunaburuk dukat batekin hartu zuen parte Ermandadean orubearen jabe gisa. 1558ko irailaren 14an hil zen eta Sebastián Bunaburu eta Maria Çubiaurreren (1557an ezkonduak) familiak jarraitu zuen bertan. Mendearen amaieran, Bunaburu Munaburu idatziko da, Arbuno/Armunorekin gertatu zen bezala. 1597an Pedro Munaburu Çufiaurre jaio zen eta 1589an Blasio Munaburu izeneko beste bat Maria Aguirre (Eçeiza) Aguirrerekin ezkondu zen.

Munaburu abizeneko ondorengo horiek ez dakigu Munaburun edo beste oruberen batean bizi izan ote ziren. Badakigu 1655ean han bizi zirenak Pedro Ybarra Olozaga eta Maria Careaga Amonarro zirela. Handik bi urtera Altzora joan ziren eta han jaio ziren haien bi seme-alabak: Joanes (1657) eta Catalina (1658).

Munaburu ganaduarentzako borda zuen etxea izatetik bi etxe izatera igaro zen XVIII. mendearen amaieran, 1798ko Elizgizonen Plangintzan jasota dagoenaren arabera: *"2 Munaburus"* (Muñaburu eta Muñaburuazpikoa). Tolosa-Elgoibar errepide berriarekin batera, Muñaburu "Munaburu-Venta" bilakatuko da. Gaur egun Muñaburuazpikoa etxean bizi den Pedro Arrueri esker, badakigu Josefa Antonia Careaga Urruzola eta Juan Antonio Errezola Urruzolak etxea 1867 inguruan berritu zutela. Urte hartan, Josefa Antonia Careagak Muñaburu osorik eta 12.000 ezkutu jaso zituen Habanan hildako anaiaren (Manuel Careaga) oinordetzan. Muñaburuberri, errepideaz bestalde, XX. mende hasierakoa da eta Jose Ramón Errezola Careaga eta Maria Iturriozek eraiki zuten.



**Bertako karobia.** (M.P.)

**Karobiaren arkoa, erdia lur azpian estalia.** (M.P.)

(I.G.)

# 77. Muruetxea (Muruechea)

Domenga Muruechea (Domynga ere idatzia) jabeak dukat laurden eta erdiko kuotarekin hartu zuen parte ermandadearen lehen eskrituran. Hurrengo urtean, ordea, Cathalina de Muruechea delakoak hiru laurden dukateko kuota eskaini zuen Muruechea etxearengatik. Bietako bat: Cathalinak Domenga ordezkatu zuen etxearen jabetzan edo bi Muruechea zeuden. Ikus ditzagun bildutako datuak.

Dagoeneko aipatutako Domenga Muruechea 1578ko ekainaren 30ean hil zen, baina elizako liburuen arabera, Domengaren aurretik hauek ere hil ziren: María Hernandez (1563), Maria (1564), Martin (1567) eta Maria Joaniz (1572). Domengaren anai-arrebak edo senideak izan zitezkeen horiek. 1576an Maria Muru Echea (Errementaria) Urrutia jaio zen, eta 1578an haren ahizpa, Gracia Muruechea (Erreria) Murua. Martin zuen aita, errementaria, eta Catalina Muruechea ama, etxearen oinordekoa. Alabek lehen abizen gisa amaren etxekoa hartu bazuten ere, aitaren abizena errepikatzeak lanbidea aditzera ematen digu eta ohiturari jarraiki etxean bertan egingo zuen lan.

Horrez gain, Muruecheak uneren batean bi etxe izan zituen, Albizturko sakramentu-liburuetan, 1552 ondoren, *Muruechea de Suso* abizena topatu baitugu (Juanes Mendiola *Muruechea de Suso* 1593ko ekainaren 23an jaio zen eta Joseph Mendiola eta Maria *Muruechea de Suso* izan zituen guraso). Abizenean suso eta yuso (goikoa eta behekoa) terminoak erabiltzen direnean, bi eraikin zeudelako izaten da. 1552an egoera hori dokumentatu ezin dugunez, etxe bakarra hartuko dugu hemen.

Aurrez esan bezala, Catalina de Muruecheak ere hiru laurden dukat eman zituen ermandaderako Muruechea etxearengatik hurrengo urteko 1553ko memorialean. Agian Domengak Catalinari emango zion etxea ermandadean izena eman eta handik gutxira. Edo bi Muruechea egongo ziren 1552an eta, beraz, bi jabe. Albizturren Murua abizenaz dugun lehen erreferentzia 1517koa da, herritarrek sinatutako konpromiso-gutunean Martin de Murua topatu dugu (ikus “Libro de escrituras antiguas del Concejo de Albiztur”).



Gutxi gora behera 70 cm.

**Errementariek XVI.ean txabetarekiko pasadoreak egiten zituzten. Albiztur eta Goiatzeko piezak.**



Gutxi gora behera 47 cm.

(M.P.)



Gutxi gora behera 60 cm.



AGG-GAOPT

**Muruetxeako eskritura 1.**



AGG-GAOPT

**Muruetxeako eskritura 2.**

## 18. gaia: Muruechea etxea erretzea eta eraistea

1552an dagoeneko badagoen etxe baten adibidea dugu hau; bertan abizen bera zuen familia, Murua edo Muru echea, bizi zen. 1622an erre egin zen eta lurzorua saldu egin zuten eta horrekin batera eraikina desagertu egin zen, eta denborarekin, baita haren oroitzapena ere. Kasu hori irakurrita orube bat guztiz desagertzearen fenomenoa ulertuko dugu. Hori ulertzea askotan zailagoa izaten da baserriaren toponimoak bizirik jarraitzen duenean (ikus Yeraran 52. zk.).

Mende bat nahikoa izan daiteke garai bateko orubeen oroitzapena desagerrarazteko. Hori gaur egun ere gertatzen da. Herritar gutxi batzuk baino ez dute gogoratzen gaur egun Garro eta Gaiztarrorekin muga egiten zuen Urkasoro baserria edo Aitzalderen aldameneko attodotarren oin-etxea. Horrela desagertu zen herritarren oroimenetik Aldaya etxea ere (ikus 8. orubea) eta hori bezala, Ugarte eta Iriarte arteko beste dozena bat etxe guztiz ahaztu dira. Desagerpena zein testuingurutan gertatu zen zehaztasunez jakiteak lagun diezaguke ezohikoa den fenomeno hori hobeto ulertzen. Kasu honetan 1622ko irailaren 17an Francisco Ibañez de Erquicia eskribauaren aurrean egindako Muruecheako lurren salmenta-eskriturak lagunduko digu hori ulertzen.

Etxea erre ostean, bertako familiak saldu eta Errezilera alde egin zuen eta ez dakigu ondorengo jabeak zergatik ez zuen berreraiki. Juan Perez de Eleizalde herriko idazkaria izan zen hurrengo jabea. Eskriturak dioenez, Muruecheako lurzoruak Goyenechea (egungo eskola) eta Elizalde artean zeuden: *"...confinan por la parte de abaxo con cassa solar de eleyçalde que es propio del dicho secretario. Por la parte de arriba con la cassa de goyenechea y por delante con el camino publico que sube desde la plaça de la dicha villa para las cassas de açarolas y por detras con la dicha huerta y las tierras senbradías, y la primera de las dichas tres pieças senbradias confina ..."*. Hau da, Zamora, Goienetxea, Muruetxea eta Elizalde orubeak gutxi gorabehera Arretxearekin lerrokatuta zeudela ikus dezakegu. Eskritura horrek nahiz lehenagoko eta ondorengo beste batzuek orube horren historia ezagutzeko datu ugari eskaintzen dizkigute.



**Muruetxeako eskritura 3.**

# 77. Muruetxea (Muruechea)



Nolabaiteko lotura: handik gertuko ereiteko lursail batek errementeria izena darama euskara zaharrean, "Aroztegia" (ez "Errementegia"). Hala ikus dezakegu 1607ko ekainaren 19an Juan Ochoa de Aguirre eskribauaren aurrean egindako eskritura honetan: "La casa de Babilonia ... *y sus tierras y huerta de Aroztegui que son detrás de la casa y que lindan con tierras de la casa de Goycoechea, Uscasoro y Gomaztegui"*.

Baina "la huerta de Aroztegui" adierazpenak bestelako irakurketa ere onartzen du: urte haietan Aroztegui abizena topatuko dugu, ordurako oso presentzia gutxituarekin bada ere, aipatutako beste askorekin gertatzen den bezala; mende erdian Albizturtik guztiz desagertuko ziren. Adibidez: Aizkorri haundi auzoan "Ygueraran" (Igaranen garai bateko forma, 52. zk.); Ergoienen "Gayztarro" abizena (39. zk.) eta Kalea auzoan "Aldaya" abizena (8. zk.).



(M.P.)

**Errekaldeko heldulekua.**



(M.P.)

**Ospitalzarreko heldulekua.**



(M.P.)

**Elizako ateko heldulekua.**



(M.P.)

**Elizako ate nagusiko heldulekua.**



(M.P.)

**Ugarteko heldulekua.**

# 78. Nekolalde (Necolalde)

Juan de Necolalde zen jabea eta dukat batekin hartu zuen parte ermandadean. Sakramentu-liburuen arabera, Juan Necolalde Graçia Necoralderekin ezkondu zen eta hiru seme-alaba izan zituzten: Domyngo (1557), Marina (1558) eta Domingo (1552). Juan de Necolalde 1563ko azaroaren 29an hil zen, eta emaztea, Graçia, 1596ko martxoaren 28an.

Joan Necolalde elizako diruzaina izan zen Pedro Errekalde erretorearekin batera, 1553ko otsailaren 20ko Juan Lopez de Olazabalen(21) aurreko eskriturak dioenez. Egun horretan Albizturko apaizari, Joan de Urdapilletari, ordainketa-gutuna eman zion orubea eta baratzaren truke. Necolaldeko historiak Etarte etxearenarekin bat egingo du aurrerago (Necolalde goikoa ere deituko zaio 1768an, Oñatiko hipoteken kontularitzako liburuaren arabera).

Albizturko herritarrek 1454an sinatutako Urdaztainen eskrituran Martin Miguel de Necolalde azaltzen da eta hori da abizen horretaz Albizturren dugun lehen erreferentzia.



Nekoalde.

# 79. Olateagabekoa (OlateadeYuso)

Martin Olatea zen jabea eta dukat batekin hartu zuen parte ermandadean. Sakramentu-liburuek ez dituzte behar bezala argitzen 1552-1600 arteko guraso-harremanak: Martin Olatea delakoa 1599ko otsailaren 26an hil zen eta haren aurretik, haren seme-alabak izan zitezkeen biren ezkontzak topatu ditugu Olatea de Yuso abizenarekin. Batetik, Juan Miguel Olatea de Yuso eta Maria Azcarate 1584ko azaroaren 30ean ezkondu ziren eta, bestetik, Catalina Olatea de Yuso Arozpide eta Julian Sasiayn Sasiayn 1589ko irailaren 13an ezkondu ziren.

1576ko Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan Olatea de Yuso etxearen izenean bi lagun azaltzen dira: Juan Miguel Olatea (aurrez aipatu duguna) eta Simon Olatea. Simon Arano Larreta delakoa Gracia Yagonekin ezkondu zen eta 1569ko ekainaren 12an Simon Olatea (Larreta) izeneko semea izan zuten. Zer abizen eman zioten ikusita, Simon Arano Larreta hori Olatea de Yuso etxearen izenean hilobiei buruzko bileretara joandako Simon Olatea bera izango zela pentsatzen dugu. Olatea de Yuso etxeak lehen hilobi-planetik izan zuen hilobia, Simon de Larretaren (ikus 71. zk.) jabetzako Olatea de Susok (goikoa) ez bezala; 1650 arte ez da hilobirik ageri, eta orduan eraitsi berri zen beste etxe baten hilobia hartu zuen.

Argi dagoena da Juan Miguel Olatea de Yuso eta Maria Azcarateren familiak han jarraitu zuela; izan ere, haien alaba Maria Madalena Olatea (1588ko urriaren 16an jaioa) Joan de Galarragarekin ezkondu zen 1629an eta 1655. urtean Albizturko elizako parrokia-zerrendan Olatea de Yuson deskribatzen den familia osatuko zuen.



(I.G.)

**Olateabehekoa ezkerrean eta goikoa eskubian.**

# 80. Olateagagoikoa (Olateadesuso)

Simón de Larreta da jabea, aldi berean Larreta orubearen jabea (ikus 62. zk.), eta Ermandadean dukat batekin hartu zuen parte etxe horren izenean. 1384an Ihoan Martinez de Olatea Tolosara laguntza bila joandako 34 herritarren taldean jasota dago.



(I.G.)

# 81. Olatzaga (Olaça)

Domenja de Olaça zen jabea eta dukat batekin hartu zuen parte ermandadean. Sakramentu-liburuen arabera, haren semea izan daitekeen Pedro Olaçak jarraituko zuen; Maria Gorostidirekin ezkondu eta 1560an Dominja Olaça izeneko alaba izan zuten.

Pedro de Olaçak 50 dukaten truke Ugarteko errotaren zati bat erosi zien Domingo Ugarte eta Maria Joaniz Recalde senar-emazteei 1584ko uztailaren 6an Domingo Aburruzaren[22] aurrean. Pedro Olaça 1586ko martxoaren 27an hil zen Albizturren.



(I.G.)

Ez zuen ermandadean parte hartu. Maria de Orya 1550eko Maryna de Guebararen testamentuan aipatzen da eta datu horrekin etxea bazegoela justifikatuta dago. Sakramentu-liburuetan Gracia de Oria Urdapilleta topatu dugu, 1556ko irailaren 12an jaioa, Miguel de Oria eta Dominja de Urdapilletaren alaba.

1655eko parrokia-zerrendan Oria etxea ageri da eta bertan bizi ziren: Miguel de Landa eta Marta de Mendiola senar-emazteak, Rodrigo de Garmendia, Joan de Albisu, Maria Lopez de Hugarte eta Maria de Landa. Familia bat baino gehiago bizi izan zen etxe hartan eta 1754an Albizturko erretore On Jeronimo Irarzabalek erosi zuen bi eskrituraren bidez: etxearen bi herenak Maria Ana Bautista de Landarekin eta etxearen beste herena Miguel de Landa eta Martha de Mendiolarekin.



**Oria, Maria de. Marina Guebararen hilburukoa (1550).**



**Oriako Joan Otsoa. Marina Guebararen hilburukoa (1550).**

(I.G.)

# 83. Pagadi (Pagadi)

Catalina de Pagadi zen jabea eta dukat batekin hartu zuen parte Ermandadean. Sakramentu-liburuen arabera bi Cattalina Pagadi daudenez, 1578an edo 1584an hil zitekeen. 1384. urtean Tolosara laguntza bila joandako 34 laguneko taldean dagoeneko ageri da abizen gisa (ikus Agiralde 2. zk., 2. gaia). Juan Lopez de Olazabalen aurreko 1547ko uztailaren 25eko eskrituraren arabera, Pedro de Pagadik elizako diruzaina zela hainbat alderdiren arteko akordioan parte hartu zuen[23]. Pedro Pagadi 1558ko azaroaren 3an hil zen. Hipotesi modura Pedro eta Cattalina senar-emazteak izan zirela esan dezakegu.

Miguel de Pagadi eta Juana de Pagadi senar-emazteek jarraitu zuten etxe horretan. Seme-alaba hauek izan zituzten: Juan (1552a baino lehen jaioa), Mariucia (Mauricia? 1560an jaioa), Martin (1563an jaioa) eta Marina (1571n jaioa). Miguel de Pagadi (Fagadi ere idazten da) ere joan zen etxearen izenean 1576an Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkara. Pagadi etxeak beti izan zuen hilobia eliza barruan, ezagutzen ditugun 1642ko lehenengo datuen arabera: 32. zk. ebanjelioaren aldean edo ezkerreko aldean, 6. errenkadan, 2. hilobia erdiko korridoretik hasita; han egon zen, numerazioan egindako ondorengo aldaketaren ondorioz 35. zk. esleitu zitzaion arren.

1655eko parrokia-zerrendaren arabera, Miguel (Munita baserritik etorria) eta Juana Pagadiren semeak jarraitu zuen etxean, Martin Munita Pagadi Pagadik. Lehenengo aldiz Maria Joanez Marquillux Careagarekin ezkondu zen eta 1625en Bernardo Munita semea izeneko semea izan zuten. Bigarren aldiz Catalina Olazarekin ezkondu zen eta Mari Martinez Munita Pagadi Olaza alaba izan zuten.

Ikus dezakegun moduan, Miguel eta Juana Pagadiren ondorengoek Munita abizenari Padagiren (orubea) aurretik eustea erabaki zuten. Horrela, baserriaren abizena hartzeko ohitura albo batera utzi zuten (ezkondu ondoren etxeko abizena hartzearen gaia 1. zk. Agerre baserriarekin, 1. gaian, landuta dago).

Parrokia-zerrendan guztira sei lagun daude konfirmatuta: Martin de Pagadi, Cathalina de Olaza, Bernardo de Pagadi, Cathalina de Aranzabe, Mari Martin de Pagadi eta artzaina. Artzaina baserriko ganaduarentzako bordaren batez arduratuko zela suposatzen dugu. 101 etxe eta baserrien artean, Pagadiz gain beste bi etxeetan soilik aipatzen da artzaina: Gorostidin Martin izenekoa eta izatez Baztangoa, eta erretore-etxean, Geronimo de Echaerri izenekoa. 5 baserri eta etxetan neskamea aipatzen da, eta 3tan, morroia.

Oñatiko hipoteken kontularitzako indizeek Pagadi baserriko eskrituretako erreferentzien zerrenda erakusten digute izen hauekin: Martin Munita (1624); Bernardo de Pagadi (1662, 1667, 1670 eta 1671); Jose Munita Pagadi (1699, 1722 eta 1729); Geronimo Eceiza Urrustume (1818); Juan Bautista Eceiza (1847); Micaela Ugartemendia eta semea (1850); Melchor Eceiza (1851); Micaela Ugartemendia (1853) eta Melchor Eceiza (1855, 1860 eta 1862). Tolosako Artxibo Probintzialean egiaztatuta dauden dokumentu eta eskritura horiei esker, 1552az geroztik Pagadin bizi izan ziren familien zerrenda osatuko dugu (ikus Markuluts 73. zk.).


(I.G.)

# 84. Pagolaenea (Urreeta); (Urreta de atodo; Urreta de Pagola; Pagolarena; Paulene)

Juan de Atodo zen jabea eta dukat batekin hartu zuen parte Ermandadean. Dominja Urreetarekin ezkondu eta bi seme-alaba izan zituen gutxienez: Joan Miguel (1557) eta Marina (1559). Marina Urreta (Attodo), Urreeta Olatea de suso hori Martin Pagola Arbunorekin ezkondu zen 1594ko otsailaren 6an eta hiru seme-alaba izan zituzten: Joanes (1596), Martin (1599) eta Maria (1601). Joanes Pagola Arbuno Hurreta Maria Sancturu Gorostidi Achesaetarekin ezkondu zen 1625eko martxoaren 9an eta Urreta de Attodo familia gisa daude jasota Albizturko 1655eko parrokia-zerrendan, beren lau seme-alabekin batera: Martin, Cathalina, Juan eta Miguel. Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan Joan de Atodo de Urreta aurkeztu zen etxearen izenean.

Etxearen izena Urreta-Attodotik Pagolarenara aldatzeko prozesua ikusteko modua hilobi-planoetan etxearen izenari erreparatzea da. 1758an Pagolarena irakurtzen da laukizuzenaren erdian, baina geroago “Urreta de Attodo o” idatzi zuten gainean letra txikiagoarekin. Hau da, idatzitako guztia honela irakurriko litzateke: Urreta de Attodo o Pagolarena. 1642ko aurreko hilobi-planetik egoki iritzitako informazioa gehituta egin ziren oharpen horiek. 1884ko hilobi-planean Pagolarena soilik ageri da.

Urreta de Attodo etxea eta Ynchurbi edo Pagobacoichaga borda bat eginda azaltzen dira Oñatiko hipoteken kontularitzako indizeetan, aditzera emanez denbora luzean jabe berarenak izango zirela agian.



(I.G.)

## 19. gaia: XVI. mendeko hagin-adarrezko eraztunak eta egurrezko laratzak

Gaur egun Pagolaenean bizi den Juan Ugartemendiari esker ezagutu dugu jatorri oso zaharreko egurrezko begizta edo eraztuna (***antzabila***) eskuz nola egiten zen. Gurdiaren edo leraren soka tenkatu eta korapilatzean, ezinbestekoa zen tokiko hagin-adarrez egin ohi zen eraztuna erabiltzea; izan ere, soka ez da ondo pasatzen sokazko eraztunetik eta eraztuna burdinazkoa denean soka higatu egiten da.

Hori egiteko ilargiaren fase egokiaren zain egoten ziren eta emango zitzaien erabileraren araberako lodierako adarrak mozten zituzten. Adar horiek neurrira moztu ondoren, zurgin-mahaiaren gainean bihurritu egiten ziren, begiztaren forma hartu arte eta, horretarako, aldez aurretik ur berotan irakin behar ziren hogei bat minutuz. Adarraren bi muturrek bat egiten zuten lekuan beheraguneak egiten ziren ahokatzeko eta trebeki errematxatutako iltze txikiarekin lotzen ziren.

Haginaren antzinako erabilera horrek iraun egin du; izan ere, egur leunaren gainean sokaren marruskadura higadura txikia egiten du, burdinazko eraztunarekin gertatzen ez zen bezala. Zeregin horretarako balioko ligukeen hagin baten berri gutxienez badugu. Gutxi gorabehera hiru lodieratako antzabila piezak bildu ditugu: 10, 17 eta 24 mm-koak. Albizturren gaztainondoarekin (Gomaztegi baserria) eta intxaurrondoarekin (Ygaran eta Pagolaenea baserriak) ere egin dira antzabilak. Astigarretan, berriz, haritzarekin (Muxika baserria). Egur motaren arabera, teknika aldatu egiten da: gaztainondoaren adarra sopletearekin berotu eta bihurritu egiten zen. Haritza, aldiz, begizta-forma lortu arte behartu zitekeen une egokian moztuta bazegoen.

XVI. mendean egurrari emandako beste erabilera artezko laratzena izan zen. Egia esan, burdinazkoak zirela pentsatzen genuen Enrike Ibaberen[24] "Los Llares de madera en las cabañas pasiegas (Cantabria-Burgos)" artikulua irakurri genuen arte. Geroago Joan de Marquilosen 1594ko ondasunen inbentarioan topatu genituen aipatuta artezko laratzak:

*Primeramente dijo que inventariaba e inventario la casa llamada de Yeran (ver Igaran nº43) que es en la dicha tierra de Albiztur, sola del dicho nombre, más arriba del rio de Yeran, rodeada de sus propios términos, y unos llares de encina y un escaño viejo que se hallaron en dicha casa para servicio y en custodia de Maria y Marina de Yrisarri, inquilinas de la dicha casa*[25].



**Pagolarenaren atzeko ate arkuduna, harri landuz egina, Ugarte aldera ematen duena.**



**Antzabila gurdian lanean.**



**Antzabila korapilo bereziarekin.**

# 85. Santamarinaundi (Santa Marina)

Pedro de Errecalde erretorea zen jabea eta dukat batekin hartu zuen parte ermandadean. 1552 eta 1600 artean lau erretore izan ziren Albizturko elizan: Pedro de Errecalde, Juan Garcia Asurzia, Juan Garcia Atodo eta Miguel Azarola.

José Agustin Odriozola Lasak “Santa Marina de Arguisain: Huellas Históricas” liburua argitaratu zuen 1992an; ermitari buruzko informazio oso osatua ematen duen lan bikaina da.

Albizturko erlijio-ondarea aztertzeko (elizak, ermitak, erretore-etxeak, elizaren jabetzako eraikina, hilerriak eta bestelako ondasunak) dokumentu ugari ditugu, bai Iruñako Elizbarrutiko Artxiboan, bai Donostiakoan.



(I.G.)

# 86. Semerodi*

1553ko memorialean jartzen du Semerodi etxearengatik dukat bat eman zela, baina ez du zehazten nor zen haren jabea. Une jakin batean etxea Armuñok erosi, behera bota eta orubea baratze bilakatu zela gehitzen du. Attodochipi eta Gomezteguy etxeen artean kokatuta zegoen, bidearen ezkerraldean. 1655eko parrokia-zerrendaren arabera, Semerodin bizi ziren: Joan de Aroztegui, Ana de Legarra, Julian de Jauregui eta Maria de Ygarza. Hipoteken kontularitzan *"Semelodi"* ere deitzen zaio.

La Caueza, digo, Casa de Semerodi encaueza ent.//
Pedro de Yrquidi en una Caueza, por las dos Ca-
-sas de Yrquidi, amedias, y antes tenia la Ca-
-sa de Yrquidichipi Caueza entera, y la otra
fuera, agora quedan amedias. como dho esta//

no existe, comprò Armuño, y derribo, y esta de huerta entre Atto do chiqui y Gomez tegui.

**Joanes Aburruzaren memoriala (1553).**




**Semelodi zen orubean baratza eta negutegia.**

# 87. Torrea

1552ko apirilaren 19an, Joan de Arteaga eskribauaren aurrean agertu zen Maestre Miguel de Yriarte y de Lasquibar de Yrura, Albizturko Torreako jabea, eta ermandadeko kide izateko sinatu zuen. Informazio hori Albizturko Udaleko garai bateko eskrituren liburuan jasota dago eta bertan ez dago zehaztuta etxeren bat erreko balitz zein izango litzatekeen horren ekarpena edo kuota (agian dukat bat ematen zuela jakintzat ematen da, hau da, ermandadean ohikoa zena).

1655eko parrokia-zerrendan “Yrigarte de arriba” gisa azaltzen da Torrea eta Iriarte etxea, aldiz, “Yrigarte de abajo” gisa. Yrigarte de arriba etxean Martin Mendiola, Mariana de Aizalde, Francisco de Bengoechea eta Cathalina de Urrutume bizi ziren garai hartan.

Oñatiko Hipoteken Kontularitzan, ordea, “Torrea” izenarekin ageri da.

Enla tierra é Onibersidad de Albiz-
tur, a diez e nueve dias del mes de Abril de mil-
equinientos e cinquenta y dos años, en presencia de
mi Joan de Arteaga, esc.no de sus magestades, e tes-
tigos de yuso escriptos pareçio presente Maestre
(Dueño de Torrea de Albiztur.) Miguel de Yriarte e de Lasquibar de Yrura pareçio presen-
te el pueblo de Albiztur, estando juntos e congre-
gados segun que lo han de uso e costumbre, es-
pecialmente Ramus de Larranaga, Alcalde, e
Domingo de Arbuno, jurado, y otros, e dixo que

**Joanes Aburruzaren memoriala (1553).**



(I.G.)

# 88. Ugarte (Ugarte)

Martin de Ugarte zen jabea eta dukat bat eman zuen ermandaderako. Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan parte hartu zutenen artean ez da Martin de Ugarte ageri, ordurako hilda zegoelako (1556ko abuztuaren 3an); Domingo Ugarte joan zen etxearen izenean. Oñatiko hipoteken kontularitzako indizeen arabera, 1567rako Domingo Ugarte dagoeneko Ugarte eta Kalea (ikus 64. zk.) etxeen eta bere izeneko errotaren jabe zen.

Domingo de Ugarte lehenengo aldiz Catalina de Gayztarrorekin ezkondu zen eta gutxienez hiru seme-alaba izan zituzten: Joanes (1563), Maria (1565; datu okerra) eta Juan (1590ean hila). Catalina emaztea 1564an hil zen eta Domingo bigarren aldiz ezkondu zen Maria Joaniz Eleyçalderekin 1566an. Seme-alaba hauek izan zituzten: Martin (1569), Cathalina (1571), Andres (1574), Catalina (1576), Gracia (1578), Gracia (1579) eta Magdalena (1584).

XVI. mendean Ugarteko errotari buruzko datuak jasotzeaz gain, errota hauei buruzkoak ere jaso ditugu: Yeraran (52. zk.); Errotaberria (Iribarren Elenarena 58. zk.); Errecalde (32. zk.) eta Ypinça (53. zk.). XVI. mendean zeuden errotei buruzko gaiak aparteko azterketa eskatzen du, izen ugari leku txikian kokatu behar direla (Yeraran, Errotaberria, Errotartea, Goikoerrota...) eta datu frogagarriak falta direla ikusita.

1768. urterako hiru errota baino ez zeuden eta "de arriba, de medio y Ypinza" izenekin ageri dira, Albizturko kontularitzaren liburuko etxeen zerrendaren azpiko azken paragrafoaren arabera. Paragrafoak honela dio: *"(lista de nombres de las casas)...son las casas que actualmente existen en la villa de Albiztur y además tres molinos propios de la Villa nombrados de arriba, de medio, y Ypinza, Casa concejil, y la rectoral, y con la habitación del Hermitaño de Santa Marina componen ciento y veinte casas hoy día 16 de mayo de 1768."*




Ugarte.

# 89. **Urkasoro** (Uscasoro)

Miguel de Uscasorok dukat batekin hartu zuen parte Ermandadean orubearen jabe gisa eta 1574ko martxoaren 26an hil zen. Sakramentu-liburuen arabera, 1563ko otsailaren 21ean ezkondutako Marina Huscasoro eta Antonio Careaga senar-emazteek jarraitu zuten etxe hartan. Gutxienez alaba bat izan zuten, Marina Uscasoro izenekoa, 1565eko azaroaren 25ean jaioa. Elizako lehen fabrika-liburuan Marina de Uscasoro azaltzen da 1568 inguruan Santa Marina elizako administratzaile moduan.

Bada beste familia bat ere, Maria Uscasoro eta Gabriel Ayçaldek (1563ko martxoaren 14an ezkondu ziren) eta haien bost seme-alabek osatua: Miguel Ayçalde Uscasoro (1564), Gracia (1567), Pedro (1570), Cathalina (1575) eta Maria (1578). Uscasoro abizeneko sei lagun hil ziren 1557 eta 1596 artean eta handik aurrera abizen zahar hori desagertu egin zen Albizturtik eta, sakramentu-liburuen arabera, baita probintziatik ere. Gogoan izan behar dugu 1384. urtean Garcia Juanez de Uscasorok eta Martin de Uscasorok Tolosara jo zutela laguntza bila Albizturko 34 herritarrez osatutako taldean.

Muñazpiko Pedro Arruek bazuen baserri horren berri, behin baino gehiagotan kolpatu baitzituen Urcasoro etxearen zimenduko harriak idiz tiratutako goldearekin, gaur egun izen bera hartzen duten eta denok ezagutzen ditugun lurretan.



(M.P.)

# 90. Urkasoro txipi (Uscasoro chipi)

Uscasoro etxeak beste etxe txikiago bat zuen atxikita, hauek bezala garai hartan: Ayçalde eta Ayçalde chipi; Atodo eta Atodo chipi, eta Camyno eta Camyno chipi. Marina de Ezeiza zen jabea eta dukat erdia eman zuen Urcasorochipi etxearengatik. Sakramentu-liburuetatik ateratako bi erreferentzietatik ere frogatzen da existitu zela: 1) Simon de Larrarte Eçeiçaren jaiotza 1556ko urtarrilaren 19an Uscasoro chipin; Catalina de Çalacayn Arbuno Arbunorekin ezkondu zen 1585eko urriaren 6an. 2) Simonen ama izan zitekeenaren, Marina Oteiça Uscasoro chipiren, heriotza 1597ko martxoaren 4an.

Marina de Ezeiza, en media Caueza por la
casa de Vcasorochipi ---------

**Joanes Aburruzaren memoriala (1553).**

Liburu honetan maiz azalduko zaigu txipia edo txikia den etxea. Garai hartan paretagile eta hargin trebeak baziren Albizturren eta etxeak aisa altxatuko zituzten materiale egokiak izanez gero. Argazkian Alkorta baserriko ximaurtokia dugu. Lino Imazek egina. Dena harri hutsez. Ondo erreparatuz gero ikusi liteke hiru paretak harkaitzaren gainean oinarrituta daudela. Paretak behetik gora hiru lodiera ditu: 90 cm, 70 cm eta 50 cm batazbeste.


(M.P.)


(M.P.)


(M.P.)

**Alkortako ximaurtokie.**


(M.P.)

**Lino Imazek egindakoa.**

# 91. Urkidiazpi (Urquidi Chipi)

Pero de Urquidik (Pero Ochoa de Urquidi) dukat bat eman zuen ermandadearen lehen eskrituran Urquidi Chipi etxearen jabe izateagatik, baina urtebete geroago, dukat bat erdi bana eman zuen bi Urquidi etxeengatik: hasierako Urquidichipi eta bestea. Horregatik, garai hartan Pero de Urquidiren familia Urquidichipin bizi zela ondorioztatzen dugu. Egungo bi Urquidietatik Urquidi Chipi zein zen jakiteko, behekoa (Urquidiazpikoa) edo goikoa (Urquidigoikoa), hemen aipatzen ditugun pertsonen dokumentuak beharko genituzke.

Pero Ochoa Urquidi eta Maria Joanizek bost seme-alaba izan zituzten gutxienez: Martin (1556), Maria (1559), Domingo (1562), Joanes (1564) eta Maria (1569). Pero Ochoak etxea ordezkatu zuen 1576an Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan. Urquidi behekoak leku garrantzitsuan zuen hilobia (ezkerraldean, bigarren errenkada, 7. zk.) Albizturko elizan ezagutzen den lehen hilobi-planetik. Urquidi goikoak, aldiz, askoz ere beranduago lortu zuen aurrez beste etxe batena zen hilobia (eskuinaldean, atzealdean, 40. zk.). Horren ondorioz, Urquidi behekoak (Urquidi azpi) antzinatasun handiagoa izango duela pentsa genezake eta, beraz, 1552ko Urquidi chipi gisa identifikatuko genuke.

Luis Maria Mujikak ere eskriturarik zaharrena, 1613koa, Urquidi azpikoari ematen dio eta Urquidi goikoari 1700ekoa, Oñatiko Artxibo Probintzialeko datuen arabera, betiere.

Domingo Aburruzaren aurreko 1580ko abuztuaren 26ko eskrituren arabera, Pero Ochoa de Urquidik larre batzuk errentan hartu zituen enkante bidez Aldaba mendian. Albizturko elizako lehen fabrika-liburuko aktetan ere askotan aipatzen da Pero Ochoa herriko biztanle gisa, 1592ko apirilaren 15ean hil zen arte.

Haren alabak, Maria Urquidik, jarraitu zuen etxean; Pedro Echeberriarekin ezkondu zen 1606ko uztailaren 12an. 1597an Pedro de Urquidi arkabuzari gisa azaltzen da Albizturko eskuadran (ikus 83. zk. Urrutikoetxea). Lau seme-alaba izan zituzten gutxienez: Domingo, Maria Joaniz, Pedro eta Maria. Azken horrek jarraitu zuen etxean eta Miguel Altolaguirrerekin ezkondu zen.

Hori dela eta, 1655eko elizako parrokia-zerrendan Urquidi behekoan 1635eko apirilaren 1ean ezkondutako etxeko ondorengoa, Maria Echeberria Urquidi, haren senar Miguel Altolaguirre eta Lucia de Altolaguirre alaba bizi zirela ikusiko dugu. 1384an Martin de Urquidi Tolosara laguntza bila joandako 34 herritarren taldean jasota dago.



(I.G.)

## 20. gaia: Iturribeltza eta Txorrotxoko iturriak eta lehortea

Bizilagunekin izandako elkarrizketetan onartuta dago XX. mendean urteko lehorte-garaian herriko emari handieneko iturrietara jotzeko beharra orokorra zela, urez hornitzeko, bai norberaren kontsumorako, bai ganaduari emateko. Hurbilen zuten eta funtzionamenduan zegoen iturrira gurdian eramandako kupel eta barrikoteez baliatzen ziren. Hori horrela, Muñazpitik Olatza eta Garrora eta Arrazpiberritik Iyan errekara joaten ziren, esate baterako. Gure iritziz, urteko lehorte hori herria bezain fenomeno zaharra da.

Etxetik gertu iturria berea zuten baserri batzuk soilik izan dute ura mugarik gabe. Horrexegatik, putzu naturaletan pilatutako ura ganadua asetzeko baliabide egokia zen eta ohikoa zen bizilagunek aprobetxatzea. Inoiz lehortzen ez zen Azarolaren goikaldeko *Putzuan* delako putzu ezagunean, kasu. Errekaren alde batean sortzen zen putzura ere jotzen zuten Garrora. Idoiaga baserriaren izena ere badugu, euskaraz putzuaren lekua esan nahi duen toponimoa. Idoiagako lurren mugan Iturribeltza iturria zegoen. Oso iturri handia zen, hiru aldeak itxita zituena eta arkua sabai moduan. Egungo errepideak Urkitik Idoiagara bidean egiten duen kurba egiteko bota egin behar izan zen.

Handik gertu Txorrotxo putzua zegoen, dakigunez Albizturko ur-putzurik sakonena zen, baina Nekoaldetik Leundenera jaisten den errepidea eraikitzean desagertu egin zen. 1825eko Albizturko apaizak parrokia-liburuan *"La fuente de Chorroa"* aipatzen duenean Txorroa putzuari (eta ez Torrotxoari) egiten dio erreferentzia. Lehorteak Albizturko eguneroko bizitzan zuen eraginagatiko kezka handia azaltzen zuen: *"Año de 1821. Desde las temporas de diciembre del año ultimo sigue buen tiempo, todo Henero en 1821 buen tiempo y constante, hacia el fin eladas. Febrero siguio elando, y algunas escarchas. Por dos noches llovio un poco, en los demas sereno y eladas continuas. Marzo primero y segundo dia muy templados, y cambio el aire y llovio el cuatro, y cinco y toda la primavera.*

*La fuente de Chorroa se agoto quasi lo mismo que con las sequias del verano, pues venia a gastarse de dia hasta un palmo del ondon.*

*El verano seco quasi sin llover, y asi hubo poco maiz aunque la cosecha de trigo fue buena, y con unas aguas que cayeron aprovecho tanto a la castaña, que hubo buena cosecha, particularmente en los altos."*


Año de 1821.
Desde las temporas de Dre. del año ultimo
sigue buen tiempo, todo Henero de 1821 buen
tiempo y Constante, hacia el fin eladas Febrero
siguio elando, y algunas escarchas por dos noches llo-
bio un poco, en los demas sereno y eladas contin.
Marzo primo. y segdo. dia mui templados y cambio el
aire y llobio el quatro y cinco, y toda la Primava.
La fuente de Chorroa se agoto quasi
lo mismo q. con las sequias del verano, pues venia a
gastarse de dia hasta un palmo del ondon
El verano seco quasi sin llover, y asi
hubo poco maiz aunque la cosecha de trigo fue buena, y con unas
aguas q. cayeron aprovecho tanto ala Castaña, q. hubo buena
cosecha particularm.te en los altos.

**Lehortea (Libro 4º Bautizados/f.308r/DEAH).**

Gracia de Goycoecheak (ikus 44. zk. Goikoetxea) argi eta garbi adierazten du 1587ko testamentuan Txorroako iturria eraiki zuela: " … las tierras que su casa de Goycoechea tiene suyas que son el manzanal que esta pegante a la iglesia parroquial de Albiztur (Elizazpia) y la tierra labrada que es en Txorroa apegante a la casa de su Hospital … // Y también digo y declaro que tengo por mis bienes pro-

pios mios la dicha mi casa de Goycoechea … y la fuente que yo he edificado a mi propia costa en tierra propia con su camino amojonado sin parte de ningún vecino con lo demás anejo y pertenecinete a la dicha casa". Txorroako iturri hori Labayeni esker 1864an egindako egungo lixiba-tokiko obran estalita geratu zela ondorioztatzen dugu.

Ganaduarentzako ura lortzeko beste modua teilatu azpian euri-ura jasotzeko tokiko kareharriz zizelkatutako uraskak jartzea zen. Atxistako lixibatokiko aska da horren adibide; egungo orbeltokia eraiki aurretik teilatu azpian paretaren kontra kokatuta egon zen. Goikoetxeako aska beste adibide bat da; hiru metrotik gorako luzera du eta teila azpian dago. Bere garaian Loreto Lasquibarrek (1917-2010) kontatu zigun moduan, *aska* hori, Gipuzkoako handienetakoa izango dena, garai batean Goikoetxeara ezkondutako emakumearen ezkonsariaren parte izan zen. Tamaina handiko harria handik gertu dagoen Leundene arrokatik atera zen. Hamabi idi parek etxeraino garraiatu zuten eta han landu ondoren paretaren parean jarri zen.

Amaitzeko eta bitxikeria moduan, Zamora etxeko putzua (98. zk.) eta Iyan baserriaren barruko iturri naturala (Igaran 52. zk.) aipa genitzake, besteak beste.



Gure Gipuzkoakak

**Iturri beltza gaur Idoiaga baserrirako biurgunean estalita dago errepidearen azpian.**



**Iturri beltzako barruko ur putzua.**




(M.P.)

**Alkorta haundiko bozaera-arkua.**

# 92. Urkidigoikoa

Urquidi Chipia existitzen bazen, beste Urquidi etxe bat zegoelako izango zen. Bigarren horrek ermandadean parte hartu zuen 1553tik aurrera, Pero Ochoa de Urquidik dukat erdia jarrita. Ez dakigu 1552an etxean norbait bizi zen edo zein egoeratan zegoen. 1655eko elizako parrokia-zerrendari esker, ordea, badakigu Urquidi goikoan garai hartan adinez nagusiak ziren hiru lagun bizi zirela gutxienez: Maria de Salsamendi Otaegui, Francisco de Egurrola Echaverekin ezkondua, eta Fermin de Ugarte Araquil. Eskura ditugun datuekin zaila egiten zaigu senar-emazte horiek Urquidi abizeneko ondorengoekin lotzea sakramentu-liburuetan. Horregatik, Egurrola eta Salsamendi familiak urruneko ahaideak edo kanpotik etorritakoak izango ziren agian. Urquidi goikoa etxeko salerosketa-eskriturak edo ezkontza-kontratua irakurtzeak 1552ko Urquidi behekoa etxeko familiarekin, hau da, Urquidi behekoa etxeko Pero Ochoa eta Maria Juanizekin, guraso-harremanik egon ote zen argitzen lagunduko liguke seguru asko.

Beste kasuetan ez bezala, 1552an baserri txikia edo Chipia Urquidigoikoa baino garrantzitsuagoa zela ikusten da. Garai hartan zerbait gertatuko zen Urquidigoikoan, baserriak etxebizitza gisa normal ez funtzionatzeko eta jabeak elizan hilobia izateko eskubidea ez eskuratzeko 1642an 84 nitxoen edo hilobien plana egin zenerako.



(I.G.)

# 93. Urretabitarte (Urreetademedio)

Maria de Urreeta zen jabea eta dukat batekin hartu zuen parte ermandadean. Martin de Urretarekin ezkondu zen 1569ko otsailaren 2an eta bi alaba izan zituzten gutxienez: Maria (1569) eta Gracia (1575). Maria de Urreeta 1586an hil zen eta Necolalde erdiko Maria Urreta alabak jarraitu zuen etxean 1591ko otsailaren 10ean Martin Aburruça Larrañagarekin ezkonduta. Bi seme-alaba izan zituzten gutxienez: Martin (1591) eta Maria (1594). Bigarren alaba hori da, Maria Aburruza Larrañaga, Albizturko 1655eko parrokia-zerrendan agertzen dena, Joanes Herausquinekin ezkonduta.

Beste alabak, berriz, Gracia de Urreta Necolaldek, Necolalde etxea jaso zuen oinordetzan aitarengandik. Handik zetorren Martin Urreta Necolalde Francisco Ibañez de Erquiciaren aurrean egindako 1623ko ekainaren 6ko testamentuaren arabera.

"Urretabitarte" etxeak banaketaren berri dugun 1642ko lehen datatik du hilobia, baina ez Maria de Urreetak, ez beste urreetatar batek ere ez zuen Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan parte hartu. Martin Urretak aurreko etxearen abizenarekin hartuko zuen parte beharbada eta horregatik ez dugu identifikatu. Agian gertuko bizilagunen bat (Joan de Urreeta-Attodo) joango zen bere izenean.


(M.P.)
(I.G.)

# 94. Urretaundi (Urreeta); (hango Urreta)

Miquela de Urreeta zen jabea eta dukat bat eman zuen Ermandaderako. Sakramentu-liburuen arabera, Miguela de Urreetak eta Martin Urretak bi seme-alaba izan zituzten gutxienez: Stephan (1555) eta Sebastian (1561). Sakramentu-liburu horiek ez digute familia hori 1655eko parrokia-zerrendan adierazitakoarekin lotzea errazten, hau da, 1634ko ekainaren 29an ezkondutako Angela de Urreta eta Domingo de Munita senar-emazteekin. Beste ezer baino lehen, argitu ditzagun bost Urreta etxeei buruzko zenbait alderdi.



(I.G.)

## 21. gaia: lehen hiru "Urretei" buruz dakiguna eta ez dakiguna

Lehenik eta behin, hipotesi modura Urretamendi Urreta-Atodoren (Pagolanea) eta Urretabitarteren aurrekoa izan zela pentsatu behar dugu; Aguirre, Olaza, Marquilox eta Alcortan gertatzen den bezala; horiek guztiak Albiztur inguruko baserriak dira. Adibide horietan guztietan "grande" delako eraikina da zaharrena eta atxikitako bigarren etxea txikiagoa izan ohi da, nahiz eta beti ez den horrela (beharbada garai batean hasieran ganaduarentzako borda izan zirelako eta beste garai batean etxebizitza izatera pasatu zirelako). Horren adibide dira Aguirre-menor, Olaza-menor, Marquilox-menor eta Alcorta-menor (Urquidi Chipia 91. zk. eta Kareagaundi 67. zk. salbuespenak lirateke).

Beste bi “Urretak”, Urretaberri eta Urretatxiki, ez dira etxebizitzak 1552an eta 1655ean aipatutako zerrenden arabera. Ohitura oso zabaldua zenez, agian bordak edo saletxeak izango ziren hamarkada askotan. Oñatiko Artxibo Probintzialeko Albizturko Hipoteken Liburuko 1768ko zerrendan ageri dira lehenengo aldiz etxe moduan. Hori dela eta, azalpen-taula honetan 1552an ageri diren lehen hiru etxeak soilik jaso ditugu:

1384tik dugu Urreta etxearen berri, Iohan Martinez de Urreta Tolosako herritartze-gutunean jasotako herritarretako bat delako. Ez dakigu nor ziren hiru "Urreta" etxeen jabeak 1530ean, hau da, ermandadeko eskritura sinatu baino 22 urte lehenago. Horren ondorioz, ezin dugu esan zein den “Albizturko Isabel Atodo Urretaren" abizenaren jatorria (Vicente Bernedo anaia domingotar beneragarriaren ama). Domingotarren arabera, amaren aldeko arbasoak Mariana de Urreta eta Juan de Atodo izan ziren (Albizturren ezkondu ziren 1517an). Hiru Urreta etxeetakoren batekin zuten lotura egiaztatzen duten dokumentuak falta ditugu, ordea (ikus Atodo 18. zk. eta Atodochipi 19. zk.).

Hiru etxeek izan zuten beren lekua eliza barruko lehen hilobi-planean: Urreta Allende 94. zk.; Urreta bitartea 93. zk. eta Urreta de Atodo-Pagolarena 84. zk. 1567ko hilobiei buruzko gatazkan Joan de Atodo de Urretak eta “Martin” izeneko bi lagunek hartu zuten parte; litekeena da horiek beste bi Urretekin zerikusia izatea.

| URRETA-ATODO | URRETABITARTE | URRETAUNDI |
|---|---|---|
| Honela ere ezagutzen da: Urreeta (Attodo); Urreta-Pagola; Paulene; Pagolarena; Pagolaenea. | Honela ere ezagutzen da: erdiko Urreeta. | Honela ere ezagutzen da: Urreta-Allende; Urreeta-araurrena; Urreta Angelarena. |
| 1552: jabea, Juan de Atodo, Dominja Urreetarekin ezkondua. | 1552: jabea, Maria de Urreeta, Martin Urretarekin ezkondua. | 1552: jabea, Miquela de Urreeta, Martin Urretarekin ezkondua. |
| 1655: bertako familia, Juan de Pagola eta Mari Sancturu de Gorostidi. | 1655: bertako familia, Maria de Aburruza eta Joan de Erausquin. | 1655: bertako familia, Domingo de Munita eta Angela de Urreta. |

## 22. gaia: Urreta auzo oparoa eta bordak etxebizitza bihurtzeko prozesua

Urreta auzoko (*Urreta bailara*) baserrien oparotasuna etxeak berreraikitzeari eta baserrien lurretan berriak eraikitzeari lotuta dagoela esan daiteke. Borda berri horiek, denbora igaro eta bizi-maila hobetu ahala, familiako beste kide batentzako etxebizitza bihurtu izan dira. Kide hori, era berean, prozesu bera errepikatzen saiatuko zen beste borda bat eginez. Fenomeno hori argi ikus daiteke Urretatxiki eta Urretaberri baserrien kasuan. Borda edo saletxe izan zitezkeen XVIII. mendean etxebizitza bihurtu ziren arte.

Bestalde, baserriaren lurrak behar adinakoak ez zirenean, maiorazkoak beste batzuk eskuratzen zituen. Hala egin zuten Urreta de Atodok Intxurbirekin, Simon de Larretak Olateagoikoarekin eta Elizaldek Azarolako etxondoekin (“etxondoa” terminoa etxe nagusiarekiko maila-ezberdintasuna adierazteko erabiltzen da batzuetan).

Aurrera egiteko modu horren adibide garbiak dira 1552ko hamabost kasu hauek:

- Urreta bailara auzoa, bertako hiru baserrien izenetan erro bera izanik: Urretaundi, Urreta-Atodo eta Urretabitarte.
- Bost baserri bi etxerekin: Azarolak, Yrazustak, Larrarteak, Olateak eta Urquidiak.
- Bina etxe edo gehiagoren jabe ziren bi jabe: jabe bat Yriarte eta Yrisagastirentzat; jabe bat Gorostidi, Garaikoetxea eta Aguirialderentzat.
- Eta bost etxe eranskin txikiagoekin: Aitzalden, Aitzalde-chipi eta Aitzalde-goyena; Attodon, Atodo-chipi; Kaminon, Kamino-chipi; Yribarrenan, Yribarrena (II), eta Urcasoron, Urkasoro chipi.

Baserria hobetzeko eta, horren ondorioz, bordak etxebizitza bihurtzeko aipatu dugun prozesu horrek indarrean jarraitu zuen denbora igaro ahala eta 1768an beste 15 kasu zeuden:

- Bederatzi borda jabego bakarraren barruan, etxe nagusiari atxikita eta baserri-etxebizitza bihurtuta: Aguirre-menor; Careaga-menor; Olaza-menor; Alcorta-menor; Marquilos-menor; Urretanuevadeallá; Urretanuevadeallí; Larrañaga-borda eta Arrozpideabajo.
- Eta sei borda isolatu, bakoitza bere lur edo lursail propioarekin eta baserri-etxebizitza bihurtuta: Inchurbia; Aztizaval; Toledo; Etarte (Necoaldedearriba ere esaten zaio); Lizarraga eta Izatza[3].

Amaitzeko, esan behar da 1552tik 1768ra kalean sortutako etxerik gehienak ez direla deskribatu dugun Urreta auzoaren eredukoak, oso lotuta baitzeuden herrian zeuden hainbat lanbide eta zerbitzurekin (ikus Miranda 74 zk.) Neurria aldakorra da, askoz txikiagoak izan zitezkeen kasu batzuetan eta, itxuraz, sakabanatutako baserriak baino errazago eraitsi edo saltzen ziren enkantean.



(M.P.)

**Urretaundiko ate arkuduna.**

# 95. Urrutikoetxea (Urrutia)

Domingo de Urrutia zen jabea eta Ermandadeari dukat bat eman zion. Dominja Urrutico Echearekin ezkondu zen Domingo, eta Pedro izeneko seme bat izan zuten 1558ko irailaren 17an. Sakramentu-liburuen arabera, Joanes Careaga izan zuen hurrengoa, 1570eko urriaren 15ean Maria Urruticoechearekin ezkondua. Gutxienez alaba bat izan zuten, Barbara, 1574ko abuztuaren 22an. 1576an Urrutia abizena zuten bi pertsonak Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazka batean hartu zuten parte: Domingo Urrutiak eta Joan Urrutiak. Eta 1597an, Domingo Urrutia ez da Albizturko arkabuzarien zerrendan azaltzen, Tolosakoan baizik, Irun-Uranzu frantsesengandik defendatzeko Francisco de Olaesoak zuzendutako eskuadrako kide gisa.

Urrutia etxeak elizan izan zuen hilobia 84 hilobiko lehen planetik aurrera (ikus 3. zk. Aitzalde barrena, 3. gaia). Urrutiatarrei buruz bada Jose Antonio Arruek egindako azterlan osatu eta sakon bat. Arrue etxe horretan jaiotako azken belaunaldiko kidea zen eta azterlan hori laster argitara ateratzea espero dugu.

1655ean, aldaketa bat ikus daiteke: ez dugu etxe horretan Urrutia abizena duen inor aurkitu. Vicente de Caminos eta Angela de Mendizabal dira parrokia-zenbakiak jasotzen dituen bi lagunen izenak. Angela de Mendizabal da Urrutia sendiaren ondorengoa.



(I.G.)

## 23. gaia: Albizturko Arkabuzarien eta Mosketarien Eskuadra, 1597ko martxoaren 24koa, Irun frantsesengandik defendatzera joandakoa

Goian aipatu dugun Jose Antonio Arruek emandako argibideei esker lortu dugu Mateo de Munita kapitainaren agindupean eskuadra osatu zuten 35 albizturtarren zerrenda. 27 arkabuzarik eta 8 mosketarik osatzen zuten zerrenda. Kide guztien abizenak zerrendako baserri edo etxeei dagozkie, lau izan ezik: Alcelus eta Mendiola (jatorria Errezilen duten abizenak biak eta Albizturrera ezkonduak XVI. mendean gutxienez), Sara (hargin-maisua, izen bereko herritik zetorrena gure ustetan) eta Argana.

**- 27 arkabuzariren zerrenda:** Pedro de Alcelus alkatea; Juan de Ayçalde maisua; Juanes de Gorostidi; Domingo de Larrarte; Philipe de Sara; Martin de Beynaran; Miguel de Yrisarri; Asencio de Artucha; Juanes de Ureeta; Domingo de Ayçalde; Juanes de Yraçusta; Simon de Lareta; Martin de Ureeta de Yriarte; Miguel de Urutume; Juan de Careaga; Esteban de Ureeta; Juanes de Eznaola; Martin de Arbuno; Martin Ruiz de Careaga; Juan de pagadi; Pedro de Urquidi; Martin de Attodo; Juan de Achesaeta; Miguel de Marquillos; Martin de Loydi de Alcorta; Ambrosio de Açarola; Miguel de Argana.

**- 8 mosketariren zerrenda:** Juan de Larranaga; Josepho de Mendiola; Juan de Lararte; Juan de Olaça; Martin de Eznaola; Martin de Aburruça de Ureeta; Juanes de Celacayn eta Blasio de Munaburu.



Urrutikoetxeko gailurreko teila galanta, 63 cm luze.



Urrutikoetxeko teila galanta, 29,5 cm zabal.



120

Lista de la gente de guerra que fue de la villa de Tolosa y su jur[isdicción a la] universidad de yrun uranço a defender la entrada que en ella quieren hazer Mos de Agramont Gouernador de Bayona con otros Mosiures de la Bort, a los veynte y quatro del mes de março del año de mill y quinientos e noventa y siete es la siguiente



| | |
|---|---|
| Juan de Larranaga | mosquetero |
| Josepho de mendiola | mosquetero |
| Juan de lararte | mosquetero |
| Juan de olaça | mosquetero |
| Martin de eznaola | mosquetero |
| Martin de aburruça de ureeta | mosquetero |
| Juanes de celacayn | mosquetero |
| Blasio de munaburu | mosquetero |



De la esquadra de mateo de munita capitan de Albiztur

Albiztur

| | |
|---|---|
| Pedro de alcelus alcalde | arcabuzero |
| Maese Juan de ayçalde | arcabuzero |
| Juanes de gorostidi | arcabuzero |
| Domingo de larrarte | arcabuzero |
| Philipe de Sara | arcabuzero |
| Martin de beynaran | arcabuzero |
| Miguel de yrisarri | arcabuzero |
| Asencio de artucha arcabuzero | arcabuzero |
| Juanes de ureeta | arcabuzero |
| Domingo de ayçalde | arcabuzero |
| Juanes de yraçusta | arcabuzero |
| Simon de lareta | arcabuzero |
| Martin de ureeta de yriarte | arcabuzero |
| Miguel de urutume | arcabuzero |
| Juan de careaga | arcabuzero |
| Esteban de ureeta | arcabuzero |
| Juanes de eznaola | arcabuzero |
| Martin de arbuno | arcabuzero |
| Martin ruiz de careaga | arcabuzero |
| Juan de pagadi | arcabuzero |
| Pedro de urquidi | arcabuzero |
| Martin de attodo | arcabuzero |
| Juan de achesaeta | arcabuzero |
| Miguel de marquillos | arcabuzero |
| Martin de loydi de alcorta | arcabuzero |
| Ambrosio de açarola | arcabuzero |
| Miguel de argana | arcabuzero |

Arcabuceros. Tolosako Udal Artxiboa.

# 96. Urrutume (Urrutume)

Martin de Urrutumek etxe honen jabe gisa hartu zuen parte ermandadean dukat bat emanda. Sakramentu-liburuetan haren heriotza-aktarik aurkitu ez dugunez, baliteke 1552 eta 1555 artean hil izana eta, beraz, haren heriotzaren berri idatziz jasota inon ez azaltzea. Juan Urrutume izan zuen hurrengoa, Petronila Gorostidirekin 1576ko abuztuaren 25ean ezkondua. Catalina alabak jaso zuen maiorazkoa eta Juan Eçeiça Aguirrerekin ezkondu zen hura. Familia hori deskribatuta gelditu da Albizturko 1655eko parrokia-zerrendan eta honako bederatzi pertsona hauek osatzen dute ordura arte baieztatukoen zerrenda: Joan de Ezeiza eta Cathalina de Urrutume (aitona-amonak), Lucia de Larrumbe eta Miguel de Ezeiza (etxeko hurrengo senar-emazteak), Domingo de Jauregui, Bernardino de Ezeiza, Maria de Ezeiza, Ignacio de Ezeiza eta Martin de Ezeiza. Juan Carlos Guerrak familia honek izandako garapena jaso zuen 1928ko "Ensayo de un Padrón Histórico de Guipúzcoa..." liburu ezagunean (ikus 198. orria). 1597an Irun-Uranzu frantsesengandik defendatzeko Albizturko herriak osatu zuen eskuadrako arkabuzari gisa azaltzen da Miguel de Urrutume.

Guerraren arabera, Ezeiza abizenak Urkizu auzoan du abiapuntua, gure iritziz Ezeizagoyena etxean. Hainbat lerro ditu ondorengotzak: Ezeizabarrena, Ezeizagoyena, Barrenas, Ezeiza-Urrutume eta Ezeiza Marquillus (ikus 73. zk.).

Buenos Airesko Eceiza aireportuak Geronimo Antonio Ezeyza Yrarzabalen (1759an jaioa) abizena du izen. Gizon hura Urrutume etxeko ondorengoa zen eta 1767 inguruan emigratu zuen Argentinara: Miguel Ezeiza Urrutume Chinchurreta eta Maria Antonia Yrarzabal Pagola izan zituen gurasoak; aitona-amonak, berriz, Martin Ezeiza-Urrutume eta Maria Chinchurreta; eta birraitona-amonak Juan Ezeiza-Urrutume Larrumbe eta Magdalena de Ayçalde (birraitona aurreko paragrafoan aipatutako ezeiza-urrutumetarren familiakoen ondorengoa da).



(M.P.)

# 96. Urrutume (Urrutume)

Ekar dezagun gogora Urrutume abizena 1384an azaltzen dela lehen aldiz, Martin Martinez de Urrutume albizturtarrarekin. Laguntza-eske Tolosara joan ziren 34 herritarren artean zen. Baina goian ikusi dugun moduan, Catalina de Urrutumerekin desagertu zen Urrutume abizena lehen abizen gisa eta Ezeiza-Urrutume edo Ezeiza izatera igaro ziren.

Hizpide dugun garaian (1552-1600), Catalina Urrutumeren aita Joan edo Joanes Urrutume azaltzen da egiaztatu ahal izan ditugun agirietan. 1576an, Joanes Urrutume izan zen etxearen ordezkari Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan. Eta 1579ko otsailaren 2an, Joanes Urrutume eta Martin Gorostidik gatazka konpontzeko akordio bat sinatu zuten Juan Lopez de Olazabal eskribauaren aurrean. Gaur egungo oinetxea bilobak eraiki zuen 1690ean; Miguel de Ezeiza-Urrutumeren seme Juan de Ezeiza-Urrutumek, alegia. Juan Ezeiza-Urrutume hura Magdalena de Aizalderekin ezkondu zen eta Joseph Ezeiza-Urrutume Aizalde semeari esker, Ezeiza abizena Markuluts baserrira igaro zen eta gaur egunera arte iraun du han (ikus Markuluts 73. zk.). Urrutumeren etxeak 1642 urtetik izan zuen Albizturko elizan hilobia.



(I.G.)

**Urrutume obra aurretik.**



(M.P.)

**Urrutume zaharberrituta.**

# 97. Zalakain (Çalacayn)

Juan de Çalacayn zen jabea eta Ermandadeari dukat bat eman zion. 1556ko martxoaren 8an hil zen Juan eta Martin Çalacayn izan zuen ondorengoa. Maria Çalacaynekin (Aguirre etxekoa, ziurrenik) ezkondu zen eta zazpi seme-alaba izan zituzten gutxienez: Joan (1566), Catalina (1567), Pedro (1569), Maria (1571), Martin (1574), Madalen (1576) eta Issabel (1578).

Martin de Çalacayn izan zen etxearen ordezkari Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan, 1567an. Laurogeita zortzi urte geroago, eta Albizturko parrokia-zerrendaren arabera, Zalacainen honako hauek bizi ziren 1655ean: 1632ko irailaren 29an ezkontzaz batutako Maria de Zalacain Artucha eta Miguel de Aburruza, Gracia de Artucha (Mariaren ama) eta zazpi seme-alabak: Martin (1608), Maria (1634), Joanes (1641), Mari San Joan (1642), Diego (1645), Cathalina (1646), Maria (1649) eta Maria Ygnacia (1651). Miguel de Zalacain, Mariaren iloba izan zitekeena ere haiekin bizi zen. Maria Zalacain Artucharen gurasoak Joanes Zalacain eta Gracia Artucha izan ziren. Maria Aburruza Zalacain alaba Bartholome Larrarterekin ezkondu zen 1657ko apirilaren 22an. Zalacain etxearen jabe zirela, 1683an etxea hipotekatu zuten Mariaren ahizpa Ygnacia Aburruza Zalacaini senipartea ordaintzeko. Lau seme-alabetatik zaharrenak, Martin Larrarte Aburruzak (1661), etxean bizitzen jarraitu zuen.



(I.G.)

## 24. gaia: ermandadea indarrean zen 1765ean Zalacain erre zenean

Albizturko elizako fabrika-liburuan, jasota dago 1765ean Zalacain erre egin zela: *"Quema de Zalacain en 9 de Maio de 1765 y en contribuzion para su reedificacion por la Casa Rectoral y de Lezi o Miliarena. Y también dio en data y pagados seys reales y 25 maravedies para la reedificación de la casa de Zalacain que se quemó por incendio casual en 9 de Maio de 1765 a saver por la Casa Rectoral y Seroral a dos reales y veinte maravedies encabezadas en un cuarto de cabeza cada una, y el real y doce maravedies restantes por la Casa de Miliarena o Lezi encavezada en medio cuarto de Cabeza conforme a la escritura de sociedad ottorgada el año de 1552 por los dueños de Casas"*. Amaitzeko, 1384an Tolosara laguntza-eske joan ziren 34 herritarren artean Çalacayn abizeneko bi lagun zeudela aipatuko dugu: Pedro de Çalacayn eta Doña Elvira de Çalacayn. Aipamen berezia merezi du aipatu dugun Doña Elvira de Çalacaynek, bera izan baitzen taldeko emakume bakarra eta haren izena, "Doña" aurretik duela, zerrendan azken aurrekoa da beste pertsona garrantzitsu batekin batera; Albizturko elizako erretore Pedro de Errecalderekin, hain zuzen.

214

Razon de las obras de Carpinteria Solo-
Mampatura Con Su Basalan Conforme la
traza y Condiciones Seguientes y en la Casa
Llamada Zalacain ____

Es Como Se sigue ____

P. Al

Primeram. por el Asiento de treze mil tejas Con
Inclusion de Subir y asentar Consus Piedras
a Razon de Doze Reales por Cada Milar ynpor
tan 156 Reales de Vn ____ 0156=00

Iten mas llevara Diez y nuebe estados y medio de esqusa
les a Real y medio por Cada estado ynportan 29 Rs
y medio ____ 0029=17

Iten mas Beynte y dos estados de Arlatas a Razon de
por Cada estado tres Reales Con Prebencion doy es
te Precio las tejas Canales de los Buelos Devera en
botir haciendo Su Justo oyo en la Arlata para q.
no aga daño el Biento y la Arlata que tenga de gu
reso quatro onzas ynportan 66 Reales ____ 0066=00

Iten mas llevara ochenta y Seys estados de Ripea ento
do los tejados a Razon de Por Cada estado quatro Re
ales de Vn Con Su Basalan y Zerar y Su Asiento
ynportan 344 Reales de Vn ____ 0344=00

Iten mas llevada Dos cientos y nobenta y Seys estados de Cabrios
a Razon de por Cada estado dos Reales de Vn ynpor
tan 592 Reales de Vn ____ 0592=00

1187=17

Zalakaingo obraren eskritura 1765.

Ytem mas Setenta y Seys estados de goyadas A Razon de por Cada estado nuebe Reales de V.n ynportan ——— 1187 / d 0684

Yten mas llevara Beynte y tres estados de Caballetes a Razon de por Cada estado Siete Reales y medio ynportan 172 Reales y medio ——— d 0172

ytem llevara treynta y nuebe estados de Portes Con forme la traza a Razon de Por Cada estado Catorze Reales de V.n ynportan 546 ——— d 0546

ytem llevara Catorze estados de Porontales en de Bajo de los Portes que Ban a galur y por Cada estado a Razon de nuebe Reales de V.n ynportan 126 Reales de V.n ——— d 0126

Ytem mas llevara Beynte y quatro estados de Prontales a Razon de Por Cada estado ocho Reales y medio ynportan 204 Reales de V.n ——— d 0204

Yten llevara Ciento y treynta y tres estados de trabiesas entre los Portes Conforme la traza a Razon de Por Cada estado dos Reales y medio ynportan 332 y medio ——— d 0332

Yten mas llevara quarenta y Seys estados de Rezumas a Razon de Por Cada estado tres Reales de V.n ynportan 138 Reales ——— d 0138

339…

215 3390=00

Yten llevara Beynte y quatro estados de entengas a Razon de por Cada estado quatro Reales de V.n ynportan 96 Reales de V.n ——— d 0096=00

Yten mas llevara ocho estados de Zapatas en de bajo de los Portes de la fachada a Razon de por Cada estado dos Reales ynportan 16 Reales d 0016=00

Yten mas llevara Beynte y dos estados de Prontales en de Bajo de los Mandios a Razon de por Cada estado Cinco Reales de V.n ynportan 110 R.s d 0110=00

Yten mas llevara Ciento y quarenta estados de quartones o Solibos a Razon de Por Cada estado dos Reales y quartillo en los de ganbara y en Sobre la Bodega ynportan 315 R.s de V.n d 0315=00

Yten mas llevara Beynte estados de Mandios nuebos en el Mandio a Razon de Por Cada estado diez y Siete Reales ~~por Cada estado a Razon~~ ynportan 320 y se entiende con sus Basalan y Serar y Juntar en Junta llano ——— d 0315=00

Yten llevara Seys estados de Coloma en el Suelo de la Cozina tres onzas de grueso lo menos a Razon de Por Cada estado Doze Reales V.n Con su Basalan y Serar y Juntar en Junta llano ynportan 72 Reales ——— d 0072=00

4312=00

Zalakaingo obra 1765.

Yten mas lleuara Cinquenta y ocho estad de tabla a Razon de p.r Cada estado 12 Reales de V.n Con su Basalan y Serar y Juntar en media Junta ynportan 696 ——— 0696

Yten lleuara treynta y quatro estados de Colomas entre las Argamasas de quatro Apocientos los dos de Junto la Cosina y otras dos de ganbara y Regulo por Cada estado dos Reales y ynportan 68 Rs — 0068

Yten mas lleuara quatro Ascasanes en Cabezeras de tres Bentanas y en Cabezera de una Puerta Regulo su manifatura Beynte Reales de V.n — 0020

Yten una escalera para ganbara Con Doze gradas y Con sus Banzos ynporta su Manifatura 33 Reales de V.n ——— 0033

Yten otro escalera Con ocho gradas y Con sus Banzos Regulo Con su Basalan y una Puerta le uantarizo desde la Cosina ala Bodega y la escalera adeser en el mismo hueco ynportan las dos Partidas Con su Basalan treynta y nuebe Reales y Solamente el oficial que se Remata tendra obligacion de hazer la escalera en donde enchena el Dueño de la Casa ——— 0039

5170

5170=00

Yten mas lleuara una Puerta de Armazon Con quisio y Contra quisio y que tenga de Alto ocho pies y de Ancho siete pies en la entrada de la Fachada y que sea en dos ojas ———

Yten otra Puerta de Armazon Con quicio y Contra quicio en la entrada del Mandio que tenga de Ancho siete Pies y de Alto otro tanto y que sea en dos ojas ———

Yten otra Puerta de Armazon Con quisio y Contra quisio y que tenga de Alto siete pies de Alto y de Ancho quatro pies y es el Paraje llamado o Setio de la Bodega

Yten otra Puerta Cencillo en dos ojas Prente de la Carrera y entrada de la Cosina seis pies y medio de Ancho y de Alto siete pies ———

Yten quatro Puertas Cencillos tres pies y medio de Ancho por Cada uno y de Alto siete pies menos un quarto y las dos Puertas para dos apocientos de la de la Cosina y otras dos Puertas para dos apocientos de ganbara ———

Yten tres Bentanas Con sus marcos que se an en dos ojas el uno Para Cosina y el otro Segundo para el apociento de hanzea la fachada y el otro lao que mira a poniente ——— 5170=00

**Zalakaingo obra 1765.**

05170
Yten las tres Bentanas y las tres Puer
tas de Armaron y otros Cinco Puertas
Cencillos Regulo atoda Costa Con Ma
terial y todo acosta de oficial Con su
Manifatura Sin ynclusion de Claba
zon ynportan quatro Cientos y tre
inta y dos Reales de V.n ——— 00432

Yten mas lleuara diez y Seys estados
de Marcos en Puertas de Armaron y
tanbien lleuaran en los Puertas Cen
cillos y Regulo por Cada estado de
Marco Con sus Batireros Cinco Reales
de V.n ynportan Sin ynclusion de Cla
uazon montan ochenta Reales — 00080
5682

Suman todas estas Partidas Cinco
mil Seis Cientos y ochenta y dos Rea
les de V.n

En la Vniversidad de Regil a ocho de Junio
del año de mil Setesientos y Sesenta y
Cinco hize este declaracion yo Josph Fran.d
de Arranegui Como Perito aprabado de
esta Muy Leal Prouincia de Guipuz
co y Firme — Josph Fran.d de Arranegui

**Zalakaingo obra 1765.**

# 98. Zamora (Çamora)

Martin de Yriarte zen jabea Ermandadeari dukataren hiru laurden emanda. Anna (...) izan zuen emaztea eta bi seme-alaba izan zituzten: Gracia (1557) eta Ramus (1559). 1573ko urtarrilaren 1ean hil zen Martin. Martin Yriarte, “mayor en días”, eta Martin Yriarte ”menor en días” Gracia de Goycoechearen hilobiari buruzko gatazkan izan ziren. Hilobien planean 40. hilobian jasota dagoen oharrari esker, badakigu Zamora etxea abadetxea izan zela 1642an. Albizturko parrokia-zerrendaren arabera, Martin Olasagasti Zamora etxean bizi zen 1655ean: ordurako Cathalina Goenechearekin ezkonduta zegoen (1635ean) eta seme bat zuen, Martin, 1638an jaioa.

Zamora etxea Marina de Gebararen 1550eko testamentuan ere aipatzen da: "Joan Marin de Atodo, cobrar de él por acabar donde hizo la casa de Çamora". Hortaz, Marina de Gebara zen Zamorako lurzoru edo garai bateko etxearen jabea. Joan Marin de Atodo, Atodo Lizentziatuaren oinordekoa, 1574ko ekainaren 10ean hil zen.

Zamora etxea, ordea, 1550. urtea baino lehenagokoa zen, 1517an Nicolas de Zamora topatu baitugu orduan sinatutako konpromiso-gutuneko herritarren zerrendan (ikus “Libro de escrituras antiguas del Concejo de Albiztur”).

1576ko urriaren 23an, Albizturko “Libro 1º de Cuentas de Fábrica” delakoan, Martin de Yriarteri haren sutegia elizarako kanpai batekin lotutako lanak egiteko erabiltzeagatik egin zioten ordainketa aurkitu dugu: "Y también se gastaron diez reales y medio en hacer ferros y otros aparejos para hacer la campana en la fragua de Martin de Yriarte" . Zamora etxea eliza inguratzen duen etxe multzoan zegoenez, Yriarteren sutegi hura Arozteguiren lursailekin edo Muruecheako errementaldegiarekin lotuta egon zitekeela uste dugu (ikus 77. zk. Muruechea). Beste aukera zera da, sutegi hura Yriarte etxearen inguruarekin lotuta egotea (Errecaldeko *sutegia*).



(I.G.)

# 99. Zapatarietxea (zapatariechea*)

Ez dugu kokapenaren berririk. Honako aipamen hau dago Maryna de Guebararen 1550eko testamentuan: *"Y también mando dar a piza de çapatariechea un real"*. *Zapatarisoro* izeneko lursaila Luis Maria Mujikaren zerrendan azaltzen da. Ez dago izen hori dagokion abizenik sakramentu-liburuetan. Hau da, baliteke izen horretako oinetxea existitu izana, edo baliteke zerrenda honetan aipatutako etxe baten bigarren izena, lagunarteko erabilerakoa, izatea. Horixe gertatzen da gaur egun *Errementerizar* (Errecalde du izena) edo *Herreroenekoa* (Mitxenea) etxeekin. Bestela, baliteke jada aipatuta dagoen oinetxe bati erantsitako etxetxo bat izatea. (ikus Errekalde, 32 zk.).



A. Erviti

**Errekalde Gomaiztegitik**



AGG-GAOPT

**Marina Guebararen hilburukoa**



(M.P.)



(M.P.)

**Txingudea oinetakoak konpontzeko, Atxisaetako Jose zenari esker.**

# 100. Zubiaurre (Çubiaurre)

Martin de Çubiaurre zen jabea eta dukataren hiru laurdenekin hartu zuen Ermandadean parte. Sakramentu-liburuetan ez dugu haren heriotzaren aipamenik aurkitu; izan ere, 1576an izan zen hilobien gatazkan, Domingo eta Joan Çufiaurre izan ziren etxearen abizenarekin aurkeztu zirenak. Bietako bat beste etxe batean biziko zen beharbada, ez dakigu; izan ere, abizen bereko bi familia aurkitu ditugu. Hona hemen xehetasunak:

Martin Çufiaurreren alaba izan zitekeen Mary Martin Çufiaurre, 1572an Gaspar Errandosorekin ezkondua eta 1575eko irailaren 21ean jaiotako Maria alaba zuena. Mary Martin 1580 maiatzaren 4an hil zen, baina ez da Çubiaurre abizena duen familia bakarra. Goian aipatu dugun Joan Çufiaurreren alaba Maria Joaniz Çubiaurre izan zitekeen. Lope Urreetarekin ezkondu zen eta Joan Çubiaurre (Urreta) Çubiaurre izeneko seme bat izan zuen, 1557ko abuztuaren 5ean jaioa. Çufiaurre edo Çubiaurre 1580an desagertu zen Albizturren abizen gisa.

Zubiaurre kalearen ezkerraldeko etxe mota bat da. Inguruko hiru etxeak (Andrenchipi, Iribarren eta agian Floreaga) eraitsita, orain, isolatuta dago, Elaneren aurrean. Oso litekeena da lantzeko lurren beharra izatea bere garaian motibo bat edo besteagatik eraitsitako etxe haiek ez berreraikitzeko arrazoietako bat. Edo agian, arrazoia etxe haiek berreraikitzeko beste lur batzuk aukeratu izana izango da. Horixe gertatu zen Leundene etxearekin (lehen “Simonarena” zuen izena eta jatorriz “Muruechea”; ikus 77. zk.). Bestela, beharbada jabeek eraitsitako etxearen materialak enkantean saltzeko beharra izango zuten, Aldaiaren kasuan gertatu zen moduan (ikus 8. zk.).



(I.G.)

## 25. Haritzezko habeen adina

Gaur egun jakin daiteke gure baserri eta etxeen euskarri diren haritzak noiz moztuak diren. Nahikoa da habe edo zutoinaren xafla bat moztu eta aztertzen dituenari eramatea. Ebakidurako eraztunen haziera mikroskopioan begiratu eta hazkunde-lerro hori denboran koka daiteke. Teknikariak espezializazioa eskatzen duen metodo bat aplikatzen du eta aplikazioa aldatu egiten da zuhaitz-espeziea bat edo bestea izan. 200, 300 urte... habeak eta zureria oro har, berrerabili egin izan dira baserriak berritzeko eta, horregatik, oso litekeena da lan honetan aipatu ditugun etxeetan, guk uste baino zaharragoa den aleren bat izatea. Zuhaitzaren adina jakiteko egiten den kalkulu horri Azterketa Dendrokronologikoa esaten zaio. Esaterako, azterketa horiei esker ziurtatu ahal izan da XVI. mendean hondoratutako itsasontziak euskal jatorrikoak zirela.

Markuluts[25] baserriko lizar mugarratuei mota horretako azterketa bat egin eta jakin izan genuen noiz landatutakoak ziren: 1861ean landatu zituen Baltasar Antonio Ezeiza Ezeizak (1814-1890). Victoria Ezeiza Echenagusiarekin ezkondua zegoen. Haien atzetik etorri ziren Juan Bautista Ezeiza eta Josefa Larrarte senar-emazteak, eta azkenik, Julio Ezeiza (1910-1985) haien semea. Hala, ezeizatarren hiru belaunaldik edo haien maizterrek zaindu zituzten lizar mugarratuak, bazkarako erabiltzeko bi urtean behin inausiz. Lizar horiekin bizi garen laugarren belaunaldia izango ginateke gu. Bi urtean behin inausiz izandako elkarbizitza horri esker, orain, 200 urteko lizar mugarratuak ditugu Albizturren eta Joxe Elola Unanue zenaren baserriaren ondoko Douglas izei ezagunaren adinaren bikoitza dute.

Haritzezko habeak eta harri landuak 1552ko Albiztur hartatik gelditu zaigun herentziaren parte dira. Ikusi dugunez, garai hartan Albiztur erabat egituratua zegoen gutxienez ehun baserri edo etxeen artean.



**Ehun urtetik gorako lizar mugarratuak, urtero ardientzat hostoa eta artzaiarentzat egurra.**

(M.P.)

**Zubiaurreko zimela, txapela osoaren lotune.**

Juan Bautista Mendizabal Juaristik (Azkoitia) eginiko transkripzio dokumentala: jatorrizkoa letra prozesalean, 4 foliotan. Ortografiaren eguneraketa partziala egin diogu eta puntuazioa ere txertatu diogu, testua hobeto ulertze aldera: Lehen zatia (lehen orrialdea eta bigarrenaren hiru laurden zortzi orrialdetatik).

***1552-01-17. Albiztur***

***Ermandade-eskritura, Juan de Aburruza eskribauaren aurrean Albizturko Unibertsitateko herritarren artean egina, haien etxeek su hartuz gero laguntza jasotzeko eta etxeak berriro eraikitzeko aukera izan dezaten. Jabeen izenak eta haien etxeen izenak daude jasota; baita adostu zituzten baldintzak ere. Lekuko izan ziren Juan García de Asurcia, Albizturko parrokiako benefizioduna eta Domingo de Aburruza, gazteena, Tolosako herritarra.***

"Sepan cuantos este instrumento público de Hermandad /
sociedad e compañía, composición e iguala vieren, como nos /
Don Pedro de Recalde, Rector de la Iglesia Parroquial de Nuestra Señora Santa María de la /
tierra de Alviztur, e Joanes de **Recalde**, su hermano, por la casa de Recalde, de cabeza entera, /
y más yo, el dicho Rector nombro y pongo la casa de la **abadía** en un cuarto y la **mon** /
**gia** en otro cuarto, y más nombro la casa de **Santa Marina** en cabeza entera; /
E Don Joan García de Atodo por la casa de **Aiçalde** en medio cuarto; E Ramus de La /
rrañaga, Alcalde al presente en la dicha Universidad por la casa de **Larrañaga**, de ca /
beza; Martín de Alcorta por la casa de **Alcorta**, de cabeza; Simón de Larreeta, dos /
cabezas por la casa de **Larreeta** y **Olatea** de suso; Maestre Joan de Larrarte, de cabeza /
por la casa de **Larrarte**; Joan de Marquilus, de cabeza entera por la su casa de **Marqui** /
lus; Martín de Yriarte, menor en días, dos cabezas por las casas de **Yriarte** e **Yrisagas** /
**ti**; Pedro de Camino por la casa de **Yribarren**, de cabeza; Joan de Çalacayn por la /
casa de **Çalacayn**, de cabeza; Joan de Necolalde de cabeza por la casa de Necolal /
**de**; Joan de Artucha, menor en días, de cabeza por la su casa de **Artucha**; Pero /
Ochoa de Urquidi, de cabeza por la su casa de **Urquidi chipi**; Martín de Olatea, /
de cabeza, por la casa de **Olatea de yuso**; Juan de Gayztarro, de cabeza por /
la su casa de **Gayztarro**; Martín de Ugarte, de cabeza por la su casa de **Ugar** /
**te**; Domingo de Larrarte, de cabeza por la su casa de **Recarte**; Martín de A /
çarola, de cabeza por la su casa de **Açarola de abajo**; Simón de Aza /
rola, de cabeza por la su casa de **Azarola de suso**; Pelayo de Achesaeta, /
de cabeza por la su casa de **Achesaeta**; Martín de Urrutume, de cabeza /
por la casa de **Urrutume**; Domingo de Arbuno, de cabeza por la casa de Ar /
**buno**; Martín de Yrarzabal, de cabeza por la su casa de **Yrarzabal**; /
Martín de Garro, de cabeza por la su casa de **Garro**; Domingo de Yrazusta, menor /
en días, de cabeza, por la su casa de **Irazusta de yuso**; Joan de Beina /
ran, de cabeza por la su casa de **Beinaran**; Martín de Yeraran, de cabeza por /
la casa de **Yeraran**; Martín de Aguirre, de cabeza por la su casa de **Aguirre**; Blasio /
de Bunaburu, de cabeza por la su casa de **Bunaburu**; Joan de Atodo, /
de cabeza por la su casa de **Urreeta**; Joan de Erausti, de cabeza por /

la su casa de **Erausti**; Domingo de Urrutia, de cabeza por la su ca /
sa de **Urrutia**; Miguel de Uscasoro, de cabeza por la su casa de **Uscaso** /
**ro**; Joan Martinez de Idoyaga, de cabeza por la su casa de **Idoyaga**; /
Joan de Recalde, de cabeza por la su casa de **Eleizalde** e de **Arrese** y por la /
casa de **Guebara** en un cuarto; Joan de Aranzabe, de cabeza por la su casa /***(Fol. 1r)***
de **Aranzabe**; Domenja de Olaza por la casa de **Olaza**, de cabeza; Catalina /
de Careaga, de cabeza por la casa de **Careaga**; María de Gomeztegui, de cabeza /
por la su casa de **Gomeztegui**; María de Urreeta por la casa de **Urreeta de medio**, /
de cabeza; Catalina de Pagadi, de cabeza por la casa da **Pagadi**; Miquela /
de Urreeta, de cabeza por la casa de **Urreeta**; Marina de Arrozpide, de cabeza /
por la casa de **Arrozpide**; Martín de Asurçia, de cabeza por la su casa de /
**Asurçia**; Joan de Errandosoro, de cabeza por la su casa de **Errandosoro**; /
Miguel de Bunita, menor en días, de cabeza por la su casa de **Bunita de aba** /
**jo**; Domingo de Eçeiça de suso, de cabeza por la su casa de **Eçeiça**; Catali /
na de Eçeiça, viuda, de cabeza por la su casa de **Eçeiça de yuso**; Joanes de Urqui /
çu, nieto de Iñigo, de cabeza por la su casa de **Urquiçu**; Sabastian e Ma /
rina de Urquiçu, por estar so un techo las dos casas, en una cabeza por la dicha /
su casa de **Urquiçu**; María de Echeberria en tres cuartos por la su casa /
de **Echeberria**; Martín de Zubiaurre, en tres cuartos por la su casa de /
**Zubiaurre**; Martín de Yriarte, mayor en días, en tres cuartos por la /
su casa de **Zamora**; Elena de Yribarren en media cabeza /
por la su casa de **Yribarren**; Domingo de Ormaechea, en /
media cabeza por la su casa llamada **Echeberria**; Domeca /
de Atodo, en media cabeza por la su casa de **Atodo**; Esteban /
de Alday, en un cuarto por la su casa de **Alday**; María /
de Erausti, en un cuarto por la casa de **Ybargoen**; Joanes de Az /
tegui, en un cuarto por la su casa de **Camino**; Marina de Ysa /
saga, en un cuarto por la su casa de **Aiçalde chipi**; María de /
Recalde, en un cuarto por la su casa de **Goyenechea**; María An /
dres de Babilonia, en un cuarto por la casa de **Babilonia**; Domen /
ja de Muruechea, en cuarto y medio por la su casa de **Muruechea**; María de /
Atodo por la casa de **Atodo chipi** medio cuarto; Miguel de Oriar por la casa /
de **Milia de Urdapilleta** medio cuarto; Magdalena de Balda, medio cuarto por la ca /
sa de **Balda**; María de Guruceaga, medio cuarto por la casa de **Guruceaga**; /
vecinos que somos de la Universidad de Alviztur e de la Villa de /
Tolosa, por nos e por nuestros herederos e subçesores, que heredaren e sub /
çedieren en las dichas nuestras casas, de aquí adelante perpetuamente, de / ..."

# 4. Oharrak

Año 1845 =

folio 107.

Num. 9º
Yrarzabal.
Miguel Antº de
Yrarzabal, Dueño
no testó.

Dia doce de octubre de mil ochocientos cuarenta y cinco dia de Domingo habiendo oido la misa de ocho se retiró á su casa acia las once de dia Miguel Antonio de Yrarzabal Dueño de Yrarzabal ~~esta~~ casa de esta villa, tenia cerca de ochenta años, salio luego de su casa á pacer un ganado de su cuerda; el ganado salto de un ribazo á una heredad contigua á comer maiz, y como el viejo estaba asido de la cuerda, ~~le tiro~~ le vencio el ganado y le tiró asi ~~ti~~ y cayo del ribazo, y se desnucó; por lo que no hubo lugar para administrarle ningun sacramento; pero él los frecuentaba muchas veces al año, y hacia algunos quince dias que estubo en la Yglesia á recivirlos; era viudo de Maria Miguel de Aramburu, ambos naturales y residentes de esta Villa de Albiztur, y el dia siguiente despues de los sufragios de la Yglesia su cadaver fué enterrado en el campo santo de la misma; en cuya verdad firmé. Yrarzabal entre renglones = valga y no lo testado.

Dn Pedro Manuel de Ezeiza
Rector

Nº 10 Ybargoyen
Maria Catalina de
Arruti – no testó.

Dia cinco de Noviembre de mil ochocientos cua-
renta y cinco habiendo recivido los ...


Año 1845 — Folio 107.

Num. 9º
Yrarzabal.
Miguel Ant.º de Yrarzabal, Dueño no testó.

Dia doce de octubre de mil ochocientos cuarenta y cinco dia de Domingo habiendo oido la misa de ocho se retiró á su casa acia las once de dia Miguel Antonio de Yrarzabal Dueño de Yrarzabal casa de esta villa, tenia cerca de ochenta años, salio luego de su casa á pacer un ganado de su cuerda; el ganado saltó de un ribazo á una heredad contigua á comer maiz, y como el viejo estaba asido de la cuerda, le venció el ganado y le tiro asi [illegible] y cayo del ribazo, y se desnucó; por lo q.e no hubo lugar para administrarle ningun sacramento; pero él los frecuentaba muchas veces al año, y hacia algunos quince dias q.e estubo en la Yglesia á recivirlos; era viudo de Maria Miguel de Aramburu, ambos naturales y residentes de esta Villa de Albiztur, y el dia siguiente despues de los sufragios de la Yglesia su cadaver fué enterrado en el campo Santo de la misma; en cuya verdad firmé. Yrarzabal entre renglones Valga y no lo testado.
D.r Pedro Manuel de Ezeiza
Rector

[illegible] Ybarguren
Maria Catalina de [illegible] no testó.
Dia cinco de Noviembre de mil ochocientos cuarenta y cinco habiendo [illegible]

Baserritar baten herotz-oharra (Libro 4º Defunciones/f.107, nº 9/DEAH).

